# Araguaney lorea

MARTIN DE ARANEZIO



**atara**miñe

EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

**www.literaturakoadernoak.org**

*Maria Mercedes Antxetaren oroimenez,*
*araguaney lore hondatu guztien oroimenez.*

Alguien limpia la celda
de la tortura
que no quede la sangre
ni la amargura

alguien pone en los muros
el nombre de ella
ya no cabe en la noche
ninguna estrella

alguien limpia su rabia
con un consejo
y la deja brillante
como un espejo

alguien piensa hasta cuando
alguien camina
suenan lejos las risas
una bocina
y un gallo que propone
su canto en hora
mientras sube la angustia
la voladora
alguien piensa en afuera
que allá no hay plazo
piensa en niños de vida
y en un abrazo

alguien quiso ser justo
no tuvo suerte
es difícil la lucha
contra la muerte

alguien limpia la celda
de la tortura
lava la sangre pero
no la amargura.

– Mario Benedetti –

# Hitzaurrea

«Tortura ahalguztiduna da; haren menpe dagoen gizakia torturatzailearen esku dago guztiz, erabat, eta nahi duena egin diezaioke. Ezer ez da geratzen torturatuarengandik: bere gorputza eta arima birrinduta daude, garaituta, "bihurrituta", dardarka eta minez garrasi eginarazten diotenen zerbitzura. "Tortura" izenean bertan dago "txarkeria" bat. "Bihurrituz" torturatzen da, eta "gaizki" bat da emaitza. Torturak ez du "zuzenbidea" jasaten. Gizabanako batek jasan dezakeen tirania handiena da; gizakiaren subjektibotasuna bera suntsitzen du, eta horregatik bakarrik bateraezina da zuzenbidearekin».

*"Cautio Criminalis"*, Friedrich Von Spee, 1631.

Von Spee jesuitak ezer gutxi imajinatuko zuen idatzi eta ia bost mende geroago oraindik gaurkotasun handikoa izango zenik bere lan humanista.

Komunikabideen bonbardaketa etengabearen menpe dagoen mundu honetan, planetako edozein tokitan gertatzen dena ia denbora errealean ezagutzeko aukera ematen digute. Estatuak eta Elizak, mendeetan zehar ezarri duten iluntasunean, beren lan zikina sekretu bat izan zedin ahalegindu dira, gehienera ere kondenatuz, baina torturaren gaitzak gure gizarteetan presente jarraitzen du zoritxarrez.

Estatuek, eta baita Elizak ere, beti justifikatu dute beren jokabidea, tortura modu sistematikoan erabiltzea gizartea etsaiarengandik defendatzeko premian, barnekoa zein kanpokoa izan etsai hori. Torturari buruzko legeak ere egin zituzten hasiera batean, eta tormentuari babes legala eman zioten, ustezko «guztien ongiaren» arabera. Baina praktikan ez da izan une bakoitzean Estatuan nagusi diren klaseen interesen defentsarako baino. Ezarritako ordena onartzeko uzkur ziren indar edo norbanakoek boterearen baliabideak arriskuan jartzea eragoztea zen helburua. Horrela, oinazea ez zen oposizioko bitartekoetan egon zitekeen bilbadura ezagutzeko metodo soila, masa-izua sortzeko eta matxinadarako tentaldia zutenei atzera eginarazteko erreminta perfektu bat ere bazen. Antzinako zuzenbidean —eta gure egunetako praktikan ere— delitu arruntez akusatutakoek beren egitateak aitor zitzaten erabili zen tortura, jakina, edo konplizeak sala zitzaten. Une batean, baina, Estatuak eta Elizak beren aurkariengandik defendatzeko darabilten metodo gisa hartzen da oinazea, eta erakunde horien segurtasun-sarearen parte bihurtzen da tortura.

Batzuk saiatu dira konbentzitzen tortura Estatu ez-demokratikoek erabiltzen duten zerbait dela, beren burua defendatzeko eta beren sistema politikoa deuseztatzeko edozein ahalegin zapaldu eta zapuzteko modu sistematikoan erabili duten arma dela. Esan digute iraganeko kontua dela eta gizarte demokratikoetan gai hori gaindituta dagoela, legeek herritarrari ematen dioten babesari esker. Errealitatetik oso urrun daude, hala ere, diskurtso horiek.

Darius Rejali, jatorri irandarreko ikerlari estatubatuarra, bere bizitzako urte asko tortura aztertzen eman dituena, oso kritikoa da Estatu demokratiko deritzotenek torturarekin duten harremanari dagokionean. Rejalik dioenez, torturaren arloko berrikuntzarik zitalenak gizarte demokratiko deiturikoen baitan egin dira. Horregatik, gizarte ez demokratikoen berezko zerbait dela esanaz oinazea iraganeko zerbait dela sinetsarazi nahi diguten Estatu hipokrisia salatzen du. Estatu demokratikoek tortura metodoak “hobetu” dituztela salatzen du Darius Rejalik bere obran; torturatuengan arrastorik ez uzteko eta tortura estaltzeko helburu bakarrarekin egin dutela, hain zuzen. Beraz, ondoriozta daiteke edozein sistema politikotan tortura aplikatzea behin eta berriz errepikatzen den praktika dela, eta Estatuak horretara jotzen duela bere interesak eta une jakin batean nagusitasuna gauzatzen duten klase sozialak defendatzeko.

Are gehiago, torturan bereizketa egiten duen tesia onar genezake, tortura “gogorra” edo “biguna” bereizten duena alegia. Egiatzat onar genezake, nahiz eta gertakariek beti ukatu, tortura “gogorra” Estatu autoritarioen edo Elizetako garairik ilunenaren ezaugarria dela; aldiz, Estatu moderno eta demokratikoek (hemen Elizak ikusezin bihurtzen dira, beren erantzukizun historikoa alde batera utzita) presio psikologiko eta tortura “biguneko” metodoetara jo behar izaten dute, legezko bizikidetza arriskuan jartzen dutenen aurrean gizartearen eta guztion ongizatea defendatzeko... Baina geure burua engainatzen ariko ginateke.

Edozein tortura mota erabiltzeak esan nahi duen krudelkeria beti bat eta bera da: tortura. Pertsona bat kolpeka txikitu daiteke, elektrodoen bidez erre daiteke, oxigeno faltagatik

bihotza ia gelditu arte urperatu daiteke, gurpilean muskulu-zuntzak luza dakizkioke ia urratzeraino... Baina, tortura "biguna"ren kasuan, egun askotan lo hartzen ez uztea bezalakoa izango litzateke erasoa, edo pertsona bat elikatzeari edo edateari uzten bazaio, zentzumen isolamenduan jartzen bada edo, alderantziz, zarata lehergarria jartzen bazaio. Desberdintasun bakarra da tortura erabiltzeagatik jarritako salaketen aurrean Estatuaren erantzukizuna lausotu egiten dela, eta tortura aplikatzean sortzen diren marka fisikoak desitxuratzen direla. Tratu txarrak epaile edo fiskal baten aurrean salatu nahi baditu torturatuak, jada ez du tratu txarren frogarik edukiko, ez da tortura frogatzen duen ebidentziarik egongo. Baina pertsonaren suntsipen gradua berbera izango da.

Ezberdintasunik ba al dago Maria Mercedes Antxetak eta garai hartako beste milaka atxilotuek Meliton Manzanasen eta BPSeko agenteen eskuetan 1961ean jasan zituzten oinazeen eta 1983an Joxean Lasak eta Joxi Zabalak Galindo eta bere tropen eskuetan jasandakoaren artean? Lehenak frankismo garaiko gertaerak dira, eta Joxi eta Joxeanenak, berriz, "demokrazia" garaikoak; hori da desberdintasun bakarra. Bi kasuek erakusten digute, edozein garai edo erregimen politiko dela ere, Estatuak tortura baliatzen duela disidenteak menderatzeko tresna gisa, eta horrela egin zuen Antxetaren kasuan, ustezko disidentea baitzen.

Joxi eta Joxeanekin ere ez zuten lanik hartu jada inposatzen ari ziren metodoa, tortura "biguna" deiturikoa alegia, erabiltzeko. Estatuaren erantzukizunak salbuetsi eta tortura praktikak ezkutatzen ditu metodo honek. Bi kasu horiek tortura "gogorraren" adibideak dira; bi kasu horietan Estatuak ziurrenik hasieratik aurreikusia zuen atxilotuen gorpuak desage-

rraraztea, ahalik eta sufrimendurik handiena eragin eta zekiten edo izan zezaketen informazio guztia atera zietela ziurtatu ondoren.

Joxi eta Joxeanen kasuan, Joseba Arregi edo Mikel Zabalzaren kasuetan bezala, batzuk aipatzearren, Estatuak azken ondorioetaraino eraman zituen bere planak, zoritxarrez, eta torturatzaileek hildako bi gazte gipuzkoarren gorpuak urte batzuk geroago agertu ziren. Mercedes Antxetak zorte pixka bat gehiago izan zuen, baina ez askoz gehiago, askatu eta 46 egunera hil baitzen Venezuelako ospitale batean bere gorputza txikitu zuten tortura izugarrien ondorioz.

Frankismoaren eta haren ondorengo sistema politikoaren artean jarraipen-hari sendoak daude, eredugarri izan nahi baina aurreko jardunbideak ezertan aldatu ez zituen trantsizio baten ondorengo sistema baita. Oposiziogileak heriotza zigorrera edo espetxealdi luzeetara kondenatzen zituzten epaile eta fiskal berberak utzi zizkion Frankismoak “demokraziari”. Erregimen frankista babestu zuten figura politiko asko utzi zizkion frankismoak ondorengo sistemari; bere jardunbidea ezertan aldatu ez zuten polizia gorputzak eta militarrak utzi zizkion; Frankok agindutako Monarkia utzi zion… Eta batez ere tortura utzi zion disidentziarekin amaitzeko arma gisa. Torturak berak denbora zeharkatu zuen, Estatua babesteko sofistikatuagoa bilakatuz, hori bai, baina polizia eta militar berberek jarraitu zuten statu quo hegemonikoaren aurka zeudenak torturatzen eta nola torturatu erakusten. Oso desberdintasun gutxi dago frankismoko Manzanas edo Conesa edo Billy el Niño, eta trantsizioko eta demokraziako Hidalgo edo Galindoaren artean. Estatu baten aparatuetako tresnak baitira guztiak; iragana eta oraina parekatzen dituen denbora lerroak, denbora ezberdinak batzen dituzten tresnak, garai

batean oposiziogileak edo bestean "terroristak" akabatzeko esku indartsua behar dela erabakitzen duen Estatuaren tresnak.

Ofiziozko torturatzaileek duten zigorgabetasunari dagokionez, Estatuaren konplizitatea dute uneoro beren lana edo lanaren ondorioak ezkutatu edo minimizatzeko; epaile eta fiskalek beste alde batera begiratzen dute torturaren ebidentzia nabarmena denean, eta biktima biktimario bihurtzen dute gehiegitan, funtzionarioen praktikak salatzen dituenean batez ere. Eta tortura estaltzeko eta babesteko prozesuan parte hartzen dute komunikabideek, jakina, prozesu horretan Estatuaren eginkizuna defendatuz, ebidentziak ezkutatuz edo albiste faltsuak emanez, defendaezinak diren gertakarien aurrean beharrezkoa iruditzen bazaie ikusleen arreta desbideratzen saiatuz.

Polizien eta militarren ezaugarri izan den ustelkerian ere agertzen da garai ezberdinen antzekotasuna. Estatuak ematen dien boterea erabiltzeko izan duten onargarritasuna ikusi besterik ez dago, "legezko" gaietan ez ezik legez kanpokoetan ere. Meliton Manzanas buru zuen Brigada Politiko Sozial frankista erreferentea bazen Bidasoaz alde bietako Euskal Herrien arteko merkantzia kontrabandoan, Galindo eta bere gizonak ez ziren gutxiago euskal hiri eta herrietan heroina tonak sartzeko orduan. Trafiko horrek asmo politiko eta sozial argiak zituen, jakina; euskal gazteria desaktibatu behar zen, egiteke zeuden aldarrikapenetan konprometitu ez zedin; baina beren zerbitzuen ordainetan Estatuak ematen zien sari gehigarri bat ere bazen.

Ez zen kasualitatea 1980ko hamarkadan kontrabandoko tabako-trafikoa ere Intxaurrondoko kuarteletik babestu, monito-

rizatu eta kontrolatzea, halakoak baitziren Estatuak, kondekorazio eta soldata edo gradu igoera ugariez gain, lehen lerroa sutsuen defendatzen zuten haiei ematen zizkien sariak.

Estatu espainiarrean torturak jarraikitasun historikoaren ildo doilorra du, eta, ondorioz, sortzen joan diren polizia-kideak ere kutsatu ditu, Ertzaintza kasu, aurreko egoera eta metodo mingarri horiekiko haustura puntua izan behar zuen arren. Gai errepresiboetan hain sartuta egon ez diren foruzain edo udaltzainak ere kutsatu egin ditu.

Euskal Herrian polizia-eredu berri baten beharraz hitz egiten da orain. Ez da eztabaida berria, eta ez da kasualitatea poliziaren bat edo beste herritarren aurkako indarkeriaren protagonista den bakoitzean agertzea gai horren inguruko debatea. Baina gizarteak jakin behar du aldaketak erabatekoa izan behar duela; ezin da kontzientzia polizial berri bat sortu iraganeko kontsignak bizirik mantenduz. Oposizioaren errepresioan eta barne etsaia akabatzeko logikan hezi eta trebatutako poliziak agintez aldatzea ez da nahikoa. Ezinezkoa da tratu txarretan eta torturetan parte hartu duten polizia-kideak birziklatzea, horrela eginez gero eredu berria hilda jaioko litzatekeelako eta abiapuntuko portura itzultzea litzatekeelako. Herritarren kontzientzia berri bat nagusitu behar da, beti atzerriko lurretan okupazio-indar gisa jokatu duten poliziak Euskal Herritik behin betiko aterarazten dituena. Baina, era berean, beharrezkoa da euskal polizia, euskal gizarte osoaren zerbitzura egongo den polizia, zuzenbidearen mende ariko dena, gure hizkuntzan zuzenduko zaiguna, guztion eskubideak errespetatuz eta gizarteari eragiten dioten arazo larriak konpontzeko lan egingo duena eta ez interes partikular batzuen zerbitzuen arabera. Herrialdearen parte sentitzen diren pertsonek osatu behar dute polizia hori, eta ez atzerritar poli-

zia edo militar infiltratuek. Jokabide humanista, gizartearekiko hurbila, lagunkoia izan behar dute poliziek. Esango genuke Ertzaintza orain bihurtu den horren guztiaren kontrakoa behar duela izan. Euskal gizarteko sektore zabalek arbuiatzen duten polizia eredu bihurtu baita denboraren poderioz, gazteriaren eta lan-gatazka eta mobilizazioetan dabiltzan langileekiko jarreran erakutsi duten jarreragatik. Arazoak daudenean gizarte sektore batzuen aurka zakarki jarduteko, zigortzeko eta zapaltzeko tresna bihurtu dute polizia hau, Euskal Herriaz kanpoko ordena politiko eta sozial bat ezartzeko, euskal gizartearen nahien etsai izanez.

Polizia gizartearen isla dela esaten da. Gure gizarteak balore faltak, ezaugarri autoritarioak eta irizpide errepresiboak baldin baditu, poliziak ezaugarri horiek izango ditu, halako izaera izango du, balore falta berberak partekatuz. Polizia desberdin bat posible izan dadin, beharrezkoa da aurretik gizartea ere aldatzea, paradigmak beste batzuk izatea. Eta hori gauzatzen ez den bitartean, beharrezkoa da bidea egiten joatea gutxienez. Polizia-jarduerak herritarren kontrolpean jarri behar dira, eta akademietan, kuarteletan eta polizia-etxeetan irakasten diren balioen kudeaketa gardena izan behar da, giza eskubideekiko errespetuzkoa dela bermatuz. Beharrezkoa da poliziaren korporatibismoa ez onartzea, ez dadin bihurtu edozein gizarte-aldaketaren aurkako botere faktiko berri.

Hau ez da autore honi idaztea gustatuko litzaiokeen liburua. 1961eko udan Maria Mercedes Antxeta euskal-venezuelar gazteari Donostian gertatu zitzaiona ahalik xehetasun handienekin kontatzea baitzen helburua hasiera batean. Gertaera haien kronika zehatza egin ordez eleberri forman idazteko erabakia urrats bakoitzean aurkitutako informazio faltaren

ondorioa izan da. Ezin izan da Maria Mercedes gaztearen zuzeneko ondorengorik edo familiakorik aurkitu, ez Venezuelan, ez Euskal Herrian. Espainiako poliziarengandik jasan zituen torturei buruzko argibiderik ematen digun dokumentu ofizialik ez dago Venezuelan, emakume gaztearen senideak saiatu ziren arren garai hartan Hego Amerikako herrialde horretako agintarien aurrean nolabaiteko salaketa jartzen.

Espainiako artxibo ofizialetan kasua ez da existitzen, eta hori "normala" izan daiteke, Espainiako polizia-indarrek egindako tortura kasu guztiekin, orduan eta beti, ezarri nahi izan den amnesiagatik. Historia edo memoria historikoa berreskuratzeari begira ari diren pertsonen laguntzak ere ekarpen baliotsuak egin zituen, baina ez zen lortu emakume gazteari gertatutakoa leialtasunez kontatzeko aski material biltzea. Bere izena eta jasan zituen torturak beti agertzen dira Meliton Manzanas Donostiako Brigada Politiko Sozialeko buru zen garaiko biktimen inguruko lan, artikulu edo salaketan. Errepikakorra da bere kasua garai hartan Brigada Politiko Sozialak eta bereziki polizia horren buruak donostiarren eta gipuzkoarren aurka egindako gehiegikeriak salatzen direnean. Polizia-artxiboak oraindik itxita daude ikertzaileentzat, jakina, eta litekeena da horietan ezer ez agertzea; izan ere, haien lanaren helburua ez baita egia ezagutaraztea, ezkutatzea baizik, eta edozein garaitan sistema babestu duten morroiak babestea.

1961ean Maria Mercedes Antxetak jasandako torturak salatu zituen komunikabide bakarra Caracaseko "El Nacional" egunkaria izan zen. Egunkari venezuelarrak bere editorialean kontatu zituen neska gazteak jasandako tortura-metodo gogorrenak. "El Nacional" egunkariak salatzen zuen oinaze horiek «Espainiaren batasuna defendatzen ez laguntzeagatik» eragin zizkiotela Mari Mercedesi, eta edozein logika argitik

kanpo zegoen hori. Izan ere, komunikabideak esan zuen moduan, «neskak ezin zuen ezer jakin, turista soila zelako Donostian».

Bazegoen agerian nahiko arrazoi, zerbait idazten hastekotan, eleberri bat idaztea erabakitzeko, gertaeretara ahalik eta gehien atxikiz, Antxetari egin zizkioten torturei dagokienean batez ere. Berarekin erabili zituzten tortura-metodo gogorrenak eleberrian islatu dira, "El Nacional" egunkariak bere editorialean ezagutzera eman zituen bezala. Hemen azaltzen diren beste tortura-metodoak egileak egindako ikerketa zabal baten emaitza dira. Ikerketa horren zatirik garrantzitsuena azken 60 urteetan Espainiako kuarteletan, komisarietan eta polizia-etxeetan, eta baita Ertzaintzaren komisarietan ere, torturatutakoen ehunka testigantzetan oinarritua da. Inplikatuek beren haragitan bizi eta sufritu zutena bere horretan islatuko da istorio honetan, eta esan behar da sufrimendu eta oinaze horietako asko eta asko oraintsukoak direla. Beraz, hemen azaltzen diren tortura-metodoak frankismoan, trantsizioan eta demokrazia garaian erabili dituzte polizia indarrek atxilotuen aurka.

Kontaketa hau fikzioa dela esan daiteke, baina benetako gertaeretan oinarrituta dagoen eta benetako gertaerak jasotzen dituen historia da. Maria Mercedes Antxetak ez zituen agian xehetasun guztietan jasan tortura-metodo batzuk, baina bai urte batzuk geroago poliziaren eskuetan erortzeko zoritxarra izan eta ankerkeria berarekin torturatu zituzten beste pertsona batzuek. Eleberria gorpuzteko dokumentazio modura aintzat hartutako testigantza horiek irakurri eta aztertzean benetan larritu da lerro hauen idazlea ere; zinez latza eta ikara-

garria baita ikustea norainokoa izan daitekeen torturatzaileen krudelkeria eta inpunitatea, batetik, eta torturatuaren ezina eta oinazea, bestetik.

Larritasun oihuak, beldurra larruazal kolpatuan zehar, elektrodoek eta zigarroek erretako haragiaren usaina, heriotzaren hurbiltasunaren pertzepzioa likido zikinez betetako bainuontzi batean burua murgiltzean, kolpeen mina, mehatxuak, bakardade infinitua, inpotentzia, usainak, kateen hotsak... Sentipen horiek bere baitan bizi izan ditu autore honek dokumentatze eta ikerketa lanak iraun duen hilabeteetan. Batzuetan zalantza handiak nituen, hain handiak ezen ezin bainuen jakin aurrera egin eta lana amaitzeko adina indar izango ote nuen. Azkenean kontzientzia nagusitu zitzaidan; torturaren biktima izan direnei euskal gizarteak asko zor diela jakitearen kontzientzia batez ere. Egia zor diegu, ordaina zor diegu, inposatutako isiltasuna haustea zor diegu, eta, batez ere, bizi izandakoak bezalako egoerak berriro inoiz ez gertatzeko bermea zor diegu.

Gure aukera da torturari buruz hitz egitea iraganeko zerbait balitz bezala; gutako askok guztion askatasunen alde borrokatzeagatik iraganean sufritu dugun zerbait balitz bezala. Agian azken aukera da torturari buruz hitz egiteko jakinez ez dela berriro inoiz gertatuko... Historia nobelatu hau izan dadila omenaldi bat torturatzaileek eraildako neska gazte euskal-venezuelar batentzat, baina, era berean, izan dadila omenaldi bat tortura beren baitan jasan duten guztientzat.

*2022ko uztaila*

# I

1961. Euskal Herria.

Nazioarte mailan urte nahasia da; gerra hotzaren esparruan potentzien arteko borroka inoiz ikusi gabeko mugetaraino iristen da. AEBk (Amerikar Estatu Batuak) bonba nuklearren proba ugari egiten ari dira SESB (Sobietar Errepublika Sozialisten Batasuna) mehatxatzeko moduko armategi bat garatzeko. Tentsio egoera horrek blokeen politikatik aldentzera behartzen ditu hainbat herrialde, eta urte horretan bertan bilera egin zuten Belgradon Tito eta Nasser Yugoslaviako eta Egiptoko presidenteek, eta horren ondorioz sortu zen Lerrokatu Gabeko Herrialdeen Mugimendua.

Hirugarren Mundua deiturikoan kokatutako herrien borrokak ere jarraitzen du, kolonialismoaren kateetatik askatzeko. Aurrera-atzera mugimenduekin garatzen da prozesu hori. Kamerun, Kuwait edo Sierra Leona bezalako herrialdeek independentzia nazionalak lortzen dituzten bitartean, Patricio Lumumba lider iraultzaile eta Afrikako deskolonizazio mugimenduaren ideologo nagusietakoa hiltzen du CIAk, eta Frantziak sarraskiak egiten ditu independentzia eskatzen duten aljeriarren artean. Asian, Portugalgo kolonialismoaren aurkako erasoaldi militarra egin zuen Indiak, artean Lisboaren mende zeuden hainbat hiri berreskuratzea lortuz. AEBetan Jonh F. Kennedy presidente aukeratu izanak indartuta antolatzen diren mertzenarioen erasoei aurre egiten jarraitzen du iraultzak Kuban. Urte horretan Kubako lurraldea bonbardatu zuten AEBetako hegazkinek Bahia de Cochinosen inbasioaren atariko gisa. Fidel Castrok zuzendutako milizianoek garaitu zuten, ordea, AEBk babestutako armada

mertzenarioa, inperialismo gringoak Latinoamerikan jasandako lehen porrot militarrean.

1961ean gaude eta 25 urte igaro dira 1936ko altxamendutik; Franco eta frankismoa daude boterean, errepublikaren legezkotasunaren aurkako estatu-kolpean lagundu zioten indar berberen bermearekin: armada, Falangea eta Eliza Katolikoaren hierarkia. Eta hor daude Estatuak zuzendutako industrializazio-prozesu batean gero eta aktiboagoak diren klase sozial boteretsuak, eragin handia dutenak bai Katalunian eta bai Euskal Herrian. Frankismoa belaunaldi-berritze moduko bat izaten hasi zen garai horretan, etorkizunean giltzarri izango diren figura batzuk lanpostu garrantzitsuetan sartuta. Manuel Fraga Iribarneren kasua da, garai hartan Ikasketa Politikoen Institutuko zuzendari izendatu baitzuten.

Baina belaunaldien arteko errelebo horrek ez dakar frankismoaren irekierarik, Estatuko herri guztiekin duen harremana errepresioan oinarritzen jarraitzen baitu. Milaka dira preso politikoak espetxeetan eta kontzentrazio-esparruetan, tortura konstante bat da komisarietan eta kuarteletan, herrietako hizkuntza nazionalak erabat debekatuta daude, hezkuntza-sistema erregimenaren ordezkaritza bat da, eta Mugimendu Nazional frankistaren eta Eliza Katolikoaren balioak transmititzen jarraitzen da bertan; diktadura zalantzan jartzen duen edozein manifestazio politiko, sozial edo kulturalen aurkako errepresioa begirunerik gabe egiten da, alderdi politikoak, sindikatuek, erakunde sozialak edo kulturalak eta haien jarduerak legez jazartzen dira; Poliziak eta militarrek inpunitate osoz hiltzen dituzte disidenteak eta oposiziogileak, eta Espainiaren batasun sakratua auzitan jartzea tribunal militarrek heriotza-zigorra ezartzeko arrazoia da...

Frankismoaren aurkakotasuna oso ahula da barruan, eta Espainiako Alderdi Komunistak ordezkatzen du batik bat. Izan ere, erakunde sindikal frankisten oinarrietan infiltrazio motel baina etengabearen bidez, langile-borrokak antolatzen ditu, industria hasiberrian bizi-baldintzen hobetzea aldarrikatuz.

Nazioartean, herrialde kapitalistek frankismoa aliatu deseroso baina beharrezkotzat dute oraindik ere gerra hotzaren testuinguruan; Ipar Amerikako zenbait zirkulutan Estatu Espainiarra NATOn sartzeko aukera ere aipatzen da, SESBek ordezkatzen duen etsai komunistaren aurka indarrak batzeko. Sarrera hori 1981era arte ez da emango eta, paradoxikoki, PSOEko gobernu «demokratiko eta sozialistaren» eskutik gauzatu zen, agerian utziz gobernu frankistak zenbateraino izan zuen AEBko Estatu Departamentuaren onespena eta babesa.

Euskal instituzio nagusiek erbestean jarraitzen zuten. 1960ko martxoan Jose Antonio de Agirre Lehendakaria hil ondoren, Jesus Maria Leizaolak izan zuen Eusko Jaurlaritza zuzentzeko ardura. Eusko Jaurlaritzan ordezkatuta zeuden alderdietan EAJ zen nagusi; PSOEk, EAE-ANVk eta beste errepublikano independente batzuek ere bazuten ordezkaritza. Urte batzuk lehenago, Alderdi Komunista kanporatua izan zen Eusko Jaurlaritzatik, EAJk bultzaturiko maniobra batean; beste behin, agerian geratzen da alderdi horren AEBriko mendekotasuna. Erbestean dagoen Euskal Gobernu horrek kanpoko euskal komunitateetan baino ez zuen eraginik, Europako eta Latinoamerikako hainbat herrialdetan sakabanatuta zeuden komunitateetan alegia. Euskal Herrian bertan ia ez zuen eraginik.

Geldotasun horren ondorioz, EGIko gazte askok, EAJko gazteek, alderdiaren estrategiarekin desadostasuna adierazi zuten, eta beren kabuz zuzendaritza nazionalistaren diziplinatik urrun zeuden erakunde berriak sortu zituzten. Gazteek EAJri

pasibotasuna eta erosotasuna leporatzen zioten, barnealdeko borroka alde batera utzi izana. Egoera horretan, Euskal Herria frankismoak murgildu zuen etsipenetik ateratzeko, aktibismoaren bideari berriro ekitea aldarrikatzen zuten.

1952an eratu zen EKIN kolektiboa, eta zazpi lurralde historikoetan (Nafarroa, Lapurdi, Araba, Gipuzkoa, Benafarroa, Bizkaia eta Zuberoa) Euskal Estatua sortzeko borrokari berriro ekitea zuen aldarri, euskara euskaldunen hizkuntza nazionaltzat hartuta. Aktibismoa defendatzen zuen frankismoari aurre egiteko eta helburu horiek lortzeko borroka-tresna gisa.

Denbora gutxian hazten joan ziren gazte errebelde horien oinarriak eta, EAJren jarraibideetatik urrundu ahala, beren ekimena hazi egin zen; zuzendaritza nazionalistaren pasibotasunagatik desengainatutako gazte ugari sartu zen haien lerroetan. Gazte askok, EGI behin betiko utzita, ETA erakunde berrira igarotzeko urratsa egiten duten garaia da.

ETA euskal errealitateari buruzko bere ikuspegia plazaratzen hasi zen hainbat argitalpenen bidez. Garai horretako argitalpen nagusia "Zutik" izango da, Caracasen (Venezuela) ateratzen dena. "Zutik" aldizkaritik euskal erakundeei eta zuzendaritza abertzaleari kritika zorrotzak egiten zaizkie haien pasibotasunagatik. Orduan egiten da Euskal Erresistentzia sortzeko deia, eta estrategia berri baten beharra markatzen da:

«Gaur egun, 1961ean, Euskal Erresistentzia sortu behar da, benetakoa, egungoa, abertzalea, ondo koordinatua, bitarteko egokiekin. Eta gazteriarekin». "Zutik" 13.

Hasiera batean, ETAko militanteek propaganda eta militante berriak bilatzeko lanak egiten zituzten. Euskal geografian zabaltzen ari ziren lantegi eta tailerretako langileen eta ikasleen artean errekrutatzen ziren erakunderako militanteak, modu

esanguratsuan Gipuzkoan eta Bizkaian. 1959an lehergailu txikiak jartzen hasi ziren profil frankista zeukaten egunkarien eta Espainiako Gobernuaren egoitzetan, edo pintadak edo erasoak egin zizkieten erregimenaren monumentuei. Esperientzia militanterik gabeko gazteak ziren ekintzaileak, klandestinitatearen kodeetan eskarmenturik gabeak. Beraz, polizia indar frankistek horietako asko atxilotzen zituzten, eta, denboran iraungo duen konstante bati jarraituz, polizia-etxe eta kuarteletan tortura--saio gogorrak egiten dizkiete. Horrez gain, komisariatik kaleratzen ez dituztenak euskal lurraldean espetxeratzen dituzte hasieran, baina gero Madrilera eraman eta epaiketa sumarioetan espetxe zigor luzeak ezartzeko.

Estatuaren erantzun errepresiboaren aurrean, kikildu ordez urrats bat aurrera egitea erabakitzen dute ETAko gazteek, abertzaleen batasunerako deia luzatu eta euren borrokan urrats berriak emateko prest daudela iragarriz, 1961ean "Zutik"en 14. argitalpenean adierazi zuten bezala:

«Hitzen eta barrako eztabaiden denbora egitateen denborari, jardun isil, arduratsu eta lasaiari bide ematen ari da. Euskal Erresistentziaren fase berri bat hasiko da!

Erakundeak ere, pertsonak bezala, adin-nagusitasunera iristen dira. Eta, eboluzio geldoko pertsona batzuen antzera, ezinegona sortzen digu heldutasunera bidean gure iritziz erakusten duten geldotasunak.

Horrelako zerbait gertatu zaigu Euskal Erresistentziari dagokionez. Azken mende laurden honetan irrikitan egon gara hazten eta lehenbailehen indar hartzen ikusteko. Baina gauza bakoitzak bere denbora behar du.

Prestakuntzan, sakrifizioetan eta etengabeko arriskuetan urte luzeak eman ondoren, egoismoaren eta gehiengoaren makalal-

diaren aurrean desilusio handiak izan ondoren, inbaditzaileari aurre egiteko gure erakundeak eratuz joan dira, prozesu geldo baina tinkoan. Gaur egun erakunde horiek zuzentzen eta osatzen dituzten gizakiak bezain prozesu arretatsu eta tinkoan.

(...) Mila desengainuren gainetik, herrikideek ekarri ez zuten baliabide materialen gabeziaren gainetik, halakoxea izan baita eta da haien lozorroa!, fede handiz jarraitzen dute, banan-banan, belaunaldi berrien elementurik baliotsuenak atzematen, frankismoak Euzkadin ere eragindako hondoratze espiritualetik salbatu zirenak, gizon-emakume gazteak denak, erre gabeak, artean poliziarentzat ezezagunak.

(…) Bi sexuetako gazteak, profesionalak, intelektualak, enplegatuak, langileak eta ikasleak, beren borondatez autodiziplinako eta azken hautaketako etapa batean sartzen dira, eraginkortasun-proben bidez.

(...) Eta pentsatzen dugu: Bada garaia geure buruari abertzale esaten diogunok gorputz eta arimaz erantzuteko, gure herrikideek barruan frankismoaren munstrokeriei aurre egiten dieten uneetan!».

Estrategia aldaketan abiatzeko, frankismoaren data sinboliko bat aukeratu zuten ETAko militanteek, egun horretan eraso eta beren ekinean jauzi kualitatibo bat emanez. 1961eko uztailaren 18a zen data, Espainiako Errepublikaren aurkako altxamendu frankistaren 25. urteurrena. Erregimenak kontzentrazioak eta ekitaldiak egiten zituen urtero Estatuko hainbat tokitan, gertaera hori ospatzeko. Euskal Herrian ere egiten zituzten ospakizun horiek, eta ETAk erabaki zuen garaia zela, eta aukera ona ere bai, hitzetatik ekintzetara pasatzeko, eta Donostian egin behar zituzten ospakizunetara boluntario frankistekin zihoan

trenari eraso zion erakundeak. Bilbo eta Donostia bitarteko trenbideko errailak lotzen zituzten 18 tirafondo kendu zituzten eta beste 16 lasaitu zituzten ETAko hiru militantek, errail horiek lau zentimetro inguru mugitzea lortuz.

Hala ere, leku horretatik igarotzean, soldadu frankista ohiez betetako trena ez zen errailetik atera, nahiz eta errailak manipulatzeak eragin zuen dardarak nahikoa beldurtu zituen bidaiariak.

ETAk honela kontatu zituen gertakariak "Zutik"en 13. alean argitaratutako ohar batean:

«ETA-k Euzkal Herriari Zutik-13

Uztailaren 18, frankismoaren oroitzapen eguna, «piper poto» (bandera espainiarrari emandako izen herrikoia, bandera horretan bilduta saltzen zirelako kontserba-lata batzuk) ugariz apainduta etorri zen egunsentia Donostian.

Euskal Erresistentziak, frankisten gobernuaren errepresioa haztatu eta berriz xaxatu asmoz, «ospakizunetan laguntzea» erabaki zuen. Hura osatzen duten erakundeetako kideek hainbat ekintza proiektatu eta gauzatu zituzten, nahiz eta larrialdiko legedi frankistak zigor larriak aurreikusten dituen Estatuaren segurtasunaren aurkako jarduerak zigortzeko.

Uztailaren 18ko hamar eta erdiak aldera, Gobernuak euskal kostaldeko eta Euskal Herriko barnealdeko hainbat tokitan errekrutatutako soldadu ohi frankistaz betetako tren bat espero zen Donostian. Kopuru handitzeko kontratatuta zihoazen, eta «ordaindutako janari goxoa» (oilasko erdia eta pinta-erdi ardo) agindua zitzaien.

Euskal Erresistentziak, justizia egiten «etxetik» hasteko erabakian, Euzkadiren traidore horien aurka egitea erabaki zuen. Horrela, trena iritsi baino lehentxeago, Vaskongadetako Trenen trenbidearen zati bat manipulatu zuen, Gipuzkoako hiriburutik bi kilometrora. Usteen kontra, konboia ez zen atera errailetik, eragindako zabu eta dardarak izua sortu zuen arren Francoren Gobernuak prestatutako espediziokide faxisten artean.

Beren egitarauari jarraituz, banderak erretzen aritu ziren euskal abertzaleak arratsaldean, gogor zigortutako ekintza izan arren.

Arratsaldeko hiru eta erdietan, Askatasunaren Etorbideko izkinaren (gaur egun Espainia Etorbidea) eta Easo kalearen artean, Londres Hotelaren parean, bat-batean su hartuta erretzen hasi zen Espainiako bandera bat, ordu horretan han zebilen jendetza harrituaren aurrean.

Hiru ordu geroago, Espainiako beste bandera bat erre zen Prim kalean, hiriko Udaltzaingoaren kuarteletik ehun bat metrora. Eta horrela jarraitu zuen programak gauera arte hiriaren erdigunetik kanpoko toki ezberdinetan, poliziari lan handia eta herritar gehien-gehienei poza emanez.

Bandera erretzearekin loturik, honako atxiloketak izan dira:

Felix Arrieta, Eibarkoa. Mekanikaria Eibarko josteko makinen «Alfa» fabrikan.

Eustakio Narbaiza, Eibarkoa. Eibarko familiako industria txiki batean lan egiten du.

Jose Antonio Eizagirre, Eibarko bizilaguna. Eibarko «Miguel Carrera y Cia»-n egiten du lan.

Alejandro Ormaetxea. Eibarko «Industrias TEG»eko langilea.

Pedro Maria Agirregomezkorta, Eibarkoa, Eibarko «Arizaga, Bastarrica y Cia»-n egiten du lan.

Oraindik jaso ez ditugun beste atxiloketa batzuk izan dira. Hurrengo egunetan baieztatuko dugu.

Zutik ETA gora EUZKADI!!

1961eko Uztaila».

Donostian egindako Espainiako banderen erreketa ere egun horretarako antolatutako esku-hartze planaren parte bezala aldarrikatzen zuen ETAk ohar horretan. Era berean, gertakarien ondorioz atxilotutako pertsona batzuen izenak jakinarazten zituen. Jakina, erregimen frankistak ETAren esku-hartzeari euskal gazteen artean sarekadak eginez erantzun zion, beti bezala. Ekintzetan parte hartu zutenak atxilotzea zen helburu bat, baina Euskal Herri osoan eta bereziki Gipuzkoan ehunetik gora atxiloketa egin izanak frogatzen zuen helburu gorena zela eskarmentua eman eta terrore-egoera mantentzea, gazte gehiago ez zedin hurbildu erakunde abertzaleetara.

Brigada Politiko Sozialak inolako begirunerik gabe torturatu zituen atxilotuak poliziaren egoitzetan. Ondoren batzuk aske utzi zituen, beste batzuk Martuteneko espetxean sartu; beste batzuk Madrilera eraman zituzten eta matxinada egotzita epaiketa sumarioak ireki zizkieten, espetxe-zigor luzeak eskatuz.

Atxilotuetako batzuk ETAko militanteak ziren, uztailaren 18ko ekintzetan parte hartu zutenak edo parte hartu ez zutenak; beste euskal gazte batzuk, berriz, kausa abertzalearen jarraitzaileak edo susmagarriak. Baziren halako gorabeheretan ino-

lako zerikusirik ez zutenak ere, baina berdin atxilotu eta torturatu zituzten Lopez Arribas eta Meliton Manzanas Brigada Politiko-Sozialaren Donostiako buruek. Hori izan zen Maria Mercedes Antxeta euskal-venezuelar gaztearen kasua.

## II

Hemen ezinezkoa da jakitea eguna ala gaua den; ate azpiko zirrikitutik sartzen dena da argi bakarra. Badirudi ziegak banatzen diren korridorean dagoen bonbilla batetik datorrela ikusten den argi guztia.

Hona ekarri nindutenean zortzi ziega-ate zenbatu nituela uste dut, korridorearen alde banatan launa. Eskuineko bigarrenean sartu ninduten. Une hartan, behintzat, ez ninduten jo; barrura bultza zidaten, nirekin ekarri zituzten beste gazte haiei bezala, atea itxita iluntasun honetan uzteko. Baina, ni ez bezala, beste haiek hemen ere borrekin jo zituzten giltzapetu aurretik. Ez dakit emakume bakarra nintzelako izan ote zen, baina hemen ez ninduten orduan kolpatu. Baina kolpeak hasiak ziren Donostia erdialdeko polizia-etxe bat dirudienaren gela hauetara ekarri aurretik. Poliziaren kamioitik jaistera behartu gintuztenean, makilez eta borraz armatutako polizien korridore batetik pasarazi gintuzten, eta aurrera egin ahala bizkarrean eta hanketan inolako errukirik gabe jotzen gintuzten. Ez zirudien katez lotuta egotea ere axola zitzaienik; ezin genituen besoak mugitu haien kolpeak gelditzeko, burua makurtzea besterik ez, han ere jo ez gaitzaten. Iraindu ere egiten gintuzten, separatistak ginela esaten zuten, eta haiek erakutsiko zigutela Espainiarekiko maitasuna.

Orain min handia dut bizkarrean, ia ezin dut ezkerreko besoa mugitu eta ez ditut eskuko hatzak sentitzen. Eskuineko belaunean ere kolpe bat hartu nuen, eta uste dut puzten ari zaidala, handitzen ari dela une oro. Zutitu nahi nuke, eta nire begiak poliki-poliki hemengo iluntasunera ohitzen ari diren honetan hormaren ondoan bereizten dudan kamainara iritsi.

Baina oraingoz ezin naiz mugitu ere egin; eskuak libre banitu... agian eskuen gainean jarriz altxa ninteke, kamainara heldu eta bertan etzateko. Uste dut lurrean etzanda jarraitu beharko dudala indarrak berreskuratzen ditudan bitartean. Ez dakit zenbat denbora daramadan hemen; iluntasunak, bakardadeak eta batez ere beldurrak denbora neurtzeko gaitasuna kendu didatela dirudi. Hemen zer egiten dudan ere ez dut ulertzen, zergatik atxilotu ninduten, zergatik ez zidaten entzun atzerritarra naizela esan nienean, Euskal Herrian oporretan dagoen venezuelar bat naizela. Ez zirudien poliziek niri entzuten zidatenik; jada beste bost gazte zeuden kamioira igo nahi ninduten, eta, hori egin aurretik, eskumuturretan jarri zizkidaten girgilu hauek, besoak bizkarrera okertuz. Une hartan pentsatu nuen beso bat hautsiko zidatela. Negarrez hasi nintzenean ere ez nuen lortu poliziek nire erreguei jaramonik egitea. Lotsa handia sentitu nuen kamioira igotzera behartu ninduen uniformedunak eskuekin bularrak gogor estutzeko baliatu zuenean. Inork ez ninduen inoiz horrela tratatu.

Ofizialeren baten aginduei jarraituz kamioia abiatu zenean, nire ondoan zihoazen gazteei begiratu eta nora eramango gintuzten galdetu nien, baina inork ez zuen ezer erantzun; begiak jaitsi eta burua makurtzen zutela eta ni bezain beldur zirela besterik ez nuen ikusi. Orduan entzun nuen txokorik urrunenean zegoenaren ahotsa, indartsuak izan behar ginela esanez, Polizia Armatuaren sarekada batean erori ginela eta zenbait egunez galdekatuko gintuztela. Animoak eman nahi zizkigula zirudien, eta zortea opa zigun. Esan zuen, halaber, ez genituela lagunak salatu behar, ez geniezaiola erraz jarri, gero beste batzuk atxilotu eta haiek ere gure zorteari jarrai ziezaioten.

Baina nor salatuko dut nik? Ez dakit hemen zergatik nagoen ere. Hoteletik irten naiz Alde Zaharrean ibiltzeko, Zumardia-

ren alde batean paseatzeko, porturako bidean dagoen jatetxera afaltzera joan aurretik.

Artean goiz zen eta kale estu horietan ibiltzea erabaki nuen. Harritu egin ninduen ohi baino jende gutxiago egoteak; zerbait gertatuko ote zen beldur izango zen agian norbait eta zurrumurrua zabaldu zen. Oso azkar pasa zen guztia. Altzari zaharrak konpontzeko lantegi bateko erakusleihoari begira nengoen, nire amari oparitu nahi izango niokeen kulunkaulki eder bat miresten, jendea garrasika eta korrika hasi zenean. Auto bat iritsi zen ziztu bizian eta hiru polizia jaitsi ziren handik; batek hormaren kontra bultzatu ninduen, beste biek beren armekin apuntatzen zidaten bitartean. Pasaportea pentsioan utzi nuela esaten ere ez zidaten utzi nire agiriak erakusteko eskatu zidatenean. Lurrean etzatera behartu ninduten, eta haietako batek bizkarrean jarri zidan belauna. Bere pisuak ez zidan arnasa hartzen uzten, eta kexatu nintzenean ukabilaz garondoan jo ninduen. Orduan isilik geratzea erabaki nuen eta gorputz osoa izerdi hotzetan sentitu nuen. Beldurra izango zen. Bihotza ere lurraren kontra sentitzen nuen taupadaka abiada bizian.

Berehala iritsi zen kamioia, eta hara igotzera behartu ninduten altzari dendaren aurrean gelditu ninduten hiruren artean lurretik altxatu ondoren. Ibilgailu zahar bat zen, metalezko kaxa batez erabat itxia, giltzarrapoz sendotutako sarraila handiko ate batekin. Sarraila haiek erretiratzean egin zuten zarata beldurgarria izan zen, burdina burdinaren kontra, odola izozten eta zeinen babesgabe zauden erakusten dizuna. Polizietako batek atea ireki zuenean, leku itxiaren eta pixaren usain handia atera zen, goragalea eman eta ia botaka eragin zidana. Baina ez nuen izan horretarako ere astirik; ia hautsi zidaten besoa bizkarrerantz bihurrituz, eta eskumuturretan iltzatzen zitzaizkidan girgiluak. Barruan oso ilun zegoen, ez zegoen aireztapenik eta,

poliziak bultza zidanean, gazte bat zegoen zurezko bankuan erori nintzen; nire gorputzaren bulkada berearekin talka eginez geratu zen, burdinazko bazterraren kontra jo gabe. Polizia kamioitik jaitsi eta atea itxi zutenean atzera utzi nuen munduan ikusitako azken irudia.

Berehala entzun zen sirena hotsa eta kamioia abiada bizian atera zen; haren mugimenduak oreka galtzea eragiten zigun eta bihurgune bakoitzean beste atxilotuen gainera erortzen ginen, girgiluak eskumuturretan are gehiago iltzatuz.

Azkenean, bidean abiatu ginela zirudienean, begiak jaso nituen eta ikusmena ilunpera ohitu zitzaizkidanean ikusi nituen aldamenean nituenen aurpegi beldurtuak. Norbaitek zer gertatzen zen esan ziezadan nahi nuen, baina argi zegoen ni bezain beldur zirela besteak. Zer gertatzen zen galdetu nuen baina inork ez zuen ezer esan, harik-eta aurpegia ikusi ezin izan nion hark gure ezin egonari aurrea hartu zion arte. Agian beste noizbait igaroa zen antzeko egoeratik; bere ahots irmoarekin guri adorea ematen saiatu zen. Nahiago nuke hotelean geratu izan banintz.

Kamioia bere helmugara iritsi zela zirudien, bat-batean frenatuz geratu baitzen, eta barruan ginenok elkarren gainera erori ginen. Laster entzun genuen berriro kisketen eta giltzarrapoen hotsa, eta nire buruari adorea ematen saiatu nintzen, noizbait norbaitek entzun beharko ninduela pentsatuz. Nire atxiloketan akatsen bat dagoela esan behar niela pentsatu nuen, pertsonaz okertu zirela, nire gurasoak jaio ziren Euskal Herria ezagutu nahi duen turista soila naizela, afaltzera joan arte denbora egin eta gero lotara joan nahi nuela, biharamunean goiz hondartzara jaisteko eta abuztuko azken egun eguzkitsuak aprobetxatzeko. Edo Venezuelako enbaxadarekin hitz egiteko aukera eman diezadatela, hor azalduko baitiete nor naizen benetan, hemen turismoa egiten duen venezuelar bat naizela, egoera honetatik

atera eta etxera lehenbailehen itzultzeko laguntza eman diezadatela…

Baina kamioitik jaitsi gintuztenean ez genuen izan inorekin hitz egiteko astirik; hor zegoen gure zain polizien korridorea eta bortizki kolpatu gintuzten pasaeran. Zergatik diote hainbesteko gorrotoa jende honi? Neu bezala kalean atxilotu dituzten gazteak baino ez dira, hori uste dut behintzat... Entzungo didan norbait egon behar da hemen.

Amari kasu egin behar nion, esaten baitzidan Euskal Herria ez dela oporrak igarotzera joateko lekurik onena, egoera politiko oso nahasia dagoela eta frankismoak oso bizirik jarraitzen duela. Euskal Etxeko beste euskaldunekin izandako harremanen bidez eduki dute nire gurasoek gerraren ondoren utzi behar izan zuten herrialdean gertatzen denaren berri. Hemen gertatzen denaren zain egoten dira beti. Caracasen azken urte hauetan antolatzen aritu diren gazteen argitalpenenetan ere euskal nortasunaren berpizkundearen beharraz hitz egiten dute. Ni ez naiz inoiz politikan konprometitu, baina txikitatik joaten nintzen El Paraisoko Eusko Zentrora euskara eta dantza klaseetara. Aitari ere bizi izan zen bitartean laguntzen nion igandeetako mezetara; meza euskaraz izatea gustatzen zitzaidan. Gure hizkuntzan abesten entzuten nion eta bere begietako distirak islatzen zuen erbesteratua izateagatik sentitzen zuen pena, baina distantziak gaindituz bere herrira itzultzea bezala sentitzen zituen une horiek. Hil zenean Euskal Etxeko frontoian zaindu genuen gorpua eta bere lagunak eta haien familia guztiak gurekin izan ziren. Hiletan ez zen inor gehiago sartzen frontoian, eta bozgorailu batzuk atera behar izan zituzten kanpora, sartu ezin izan zirenek ekitaldia jarrai zezaten. Asko hunkitu ninduen ikurrina hilkutxaren gainean ikusteak, eta apezaren homiliak negar eginarazi zigun guztioi. Asko maite zuen bere lurra aitak, baina

oso urrutiko beste batean etzan behar izan zuen azkenean, ezin izan baitzen sorlekura inoiz itzuli. Agian horregatik etorri nahi izan nuen herri hau ezagutzera, memorian bada ere aita nirekin ekartzeko.

# III

1939. Erbestera.

Bigarren Mundu Gerra hastear zegoen. Frantzian zeuden Euzko Alderdi Jeltzaleko errefuxiatuen taldeek alderdiko agintarien deiari erantzun egin zioten. Babes bila Euskal Herritik oso urrun zegoen herrialde baterantz joateko esaten zitzaien, Hego Amerikako azpikontinentean Karibe Itsasoaren ertzean dagoen Venezuelarantz joateko, alegia.

1939ko uztailaren 9ko lehen orduetan, Guairako portura iritsi zen Compaignie General Trasatlantiqueko Cuba pakebotea. Bertan 82 gizon, emakume eta haur euskaldun zihoazen, frankistek sutu eta Euskal Herriari ere eragiten zion gerraren ondorioetatik ihesi.

Euskaldun horiek Venezuelara iristeko kudeaketak Euzko Alderdi Jeltzaleko talde batek egin zituen. Talde horren buru ziren Jesus Maria Leizaola Lehendakariordea eta Julio de Jauregi, garai hartan erbesteko Eusko Jaurlaritzako immigrazio-zuzendaria zena. Venezuelako Gobernuarekin negoziatu zuten biek, Eduardo Monsanto politikari, margolari eta historialariaren ordezkaritzarekin. Karibeko herrialdeko hainbat intelektualen laguntza eta aholkularitza izan zuen Monsantok, hala nola Arturo Uslar Pietri eta Antonio Arraizena, eta uste zuten euskal immigrazioa baliagarria izan zitekeela Venezuelarentzat. Iruditzen zitzaien herrialdeko gobernuari nazioartearen aurrean aurpegia zuritzeko ere onuragarri izango zela; Lopez Contreras jeneralak, Venezuelako garai hartako presidenteak, ordurako onartua baitzuen Burgosko gobernu frankista.

Cuba itsasontziaren espedizioaren arduraduna Merkataritzako Itsas Armadako ofizial gazte bat zen, Algortan (Bizkaia) jaiotako Rikardo de Maguregi kapitaina. EAJren zuzendaritzak eman zion horretarako mandatua, egitekoa behar bezala burutzeko eta bidaian izandako gorabehera guztien berri emateko. Baita Venezuelara iritsi ondoren euskal herritarrak herrialde horretako gizartean integratzeko ere.

Espedizioa 1939ko ekainaren 25ean abiatu zen Frantziako El Havre portutik; han ontziratu eta Europari agur esan zioten euskaldunek, haietako askok sekula ez itzultzeko, bidaiarietako batek, Segundo Atxurrak, txistu eta danbolinarekin «Agur Jaunak» abestiaren doinua interpretatzen zuen bitartean. Cuba pakebotean bazen, euskaldunen taldeaz gain, hainbat herrialdetako errefuxiatu juduen talde bat ere, eta Europatik ihesi zihoazen beste pertsona batzuk, II. Mundu Gerraren hasiera hartan etorkizun hobe baten bila.

El Havretik irten ondoren lehen geldialdia Ingalaterrako Southampton portuan egin zuen Cuba pakeboteak, eta handik Ozeano Atlantikoa zeharkatzeari ekin zion. 1939ko uztailaren 4an iritsi zen bere lehen portu amerikarrera, Guyanako Point de Pitrera. Aipatzeko moduko gorabeherarik gabe egin zuten bidaia, Ricardo de Maruregi kapitainak bere alderdiko arduradunei bidalitako txostenek adierazten dutenez. Euskal erbesteratuen taldekoen ziurgabetasuna zen azpimarragarriena; zalantzaz jositako etorkizuna zuten aurrean, eta sorterria uztera behartuak izanaren mina. Zentzu horretan, Maruregik honela idatzi zuen: «Ameriketara hurbildu ahala kezkatuago sentitzen da jendea; hala eta guztiz ere, giro orokorra konfiantzazkoa eta animozkoa da».

Euskal espedizioa Venezuelara iritsi zenean, tokiko prentsa osoak eman zuen gertakariaren berri, hedabideetan toki handia eskainiz, argazki-dokumentazio ugari barne. Iritsi berrien artean medikuak, ingeniariak, administratzaileak, nekazariak eta langile espezializatuak zeudela zioen prentsak, eta horiek zirela, hain zuzen, Venezuelaren garapen ekonomikoa bultzatzeko eskaera handia zuten lanbideak. Arturo Uslar Pietri idazlea izan zen euskaldunei ongietorria ematera Cuba pakebotera igotzen lehena. Harekin batera igo ziren Antonio Arraiz, Roberto Alamo Ibarra eta Vicente Fuentes intelektual eta politikoek.

Uztailaren 16an, igandean, erbesteratutako euskaldunen taldea Santa Rosalia parrokian izan zen, aita Tenreirok emandako mezatan. Alberto Onaindia kalonje eta Jose Antonio de Agirre Lehendakariaren orduko aholkulariaren laguna zen Tenreiro. Ekitaldi erlijiosoaren ondoren, Uslar Pietri idazleak lagunduta, Simon Bolibarren hilobiaren aurreko Panteoi Nazionalean lore eskaintza egin zuten euskaldunek. Venezuelako agintariekin adostu bezala, «Agur jaunak» eta «Venezuelako Ereserki Nazionala» abestu ziren. Euzko Abendaren Ereserkia kantatzeko baimena eskatu zuen orduan errefuxiatuetako batek, eta ekitaldian zeuden agintariek eman egin zioten. Hala ere, gertaera xumea izan behar zuen pasadizoa eztabaida politiko bihurtu zen bat-batean. La Esfera egunkariak, oso lerro eskuindarrekoa eta Francoren aldekoa zenak, gogor kritikatu zuen gertaera hura bere orrialdeetan, Panteoi Nazionalean, Simon Bolibar Libertatzailearen gorpuzkien aurrean, «komunisten himnoak» interpretatu izana gaitzetsiz. Laidotzat jotzen zuen, Venezuelako Gobernuko goi-funtzionario baten aurrean egin zutelako gainera, eta ekitaldia babestea leporatzen zioten. Garai hartan gobernu frankistak Venezuelan zuen ordezkariak, Jose Antonio Sangronizek, protesta-ohar bat ere aurkeztu zuen Venezuelako agintarien aurrean. Baina gai horrek ez zuen ondorio handirik

izan, Venezuelako Presidenteak, Lopez Contreras jeneralak, ez baitzion inolako garrantzirik eman, eta gaia agortzen joan zen egun gutxitan.

Lopez Contreras ados zegoen etorkinak Karibeko herrialdera erakartzeko bere gobernuaren politikarekin; izan ere, garai hartan garapen eta modernizazio prozesuan murgilduta zegoen Venezuela, eta premiaz behar zituen mota guztietako langile tekniko eta profesionalak. Herrialdeko prentsan ere euskaldunen immigrazioa babesten zen garai hartan. "El Heraldo de Caracas" egunkariaren editorialak honela zioen: «Venezuelak gehien maite duen immigrazioetako bat euskaldunena da zalantzarik gabe. Hori horrela, Venezuelako Gobernuak Frantzian errefuxiatuta dauden elementurik onenen artean kudeatzen du haien etorrera, eta horietako asko iritsi dira dagoeneko, bakoitzaren espezialitatean emaitzarik onenak eta bikainenak emanez».

Fernando de Carranzak, Eusko Jaurlaritzaren Venezuelako ordezkaria izan zenak, txosten bat aurkeztu Euskal Herriko I. Mundu Biltzarrean, 1940ra arte Venezuelara iritsitako euskaldunak 500 inguru zirela esanez. II. Mundu Gerraren amaieran, 1945 eta 1947 bitartean, nabarmen handitu zen kopuru hori. 50eko hamarkadaren hasieran euskal herritarren emigrazio aldi berri bat eman zen herrialde hartara, arrazoi ekonomiko zein politikoengatik. 1956an, Carranzak Eusko Jaurlaritzari jakinarazi zion euskal immigrazioa 8.000 eta 10.000 pertsona artekoa zela Venezuelan.

Hala ere, euskal errefuxiatuak Venezuelara joatearen aukeraren aurrean hasieratik polemikak izan ziren nagusi. Venezuelako agintariek debekatu egin zuten erbesteratuen taldean ezkerreko militantzia zuten pertsonak sartzea, komunismoaren aurkako sentimendu handia baitzuten orduan. Lopez Contre-

rasen gobernuak 1938an onartu zuen Burgosko gobernu frankista, eta Venezuelan ziren ordezkari frankistek errepublikano espainiarrak komunistatzat, sozialistatzat eta anarkistatzat jo zituzten. Horrek, zalantzarik gabe, eragin handia izan zuen Venezuelako Gobernuaren erabakian, etorkinak beren herrialdean onartzeko garaian.

Venezuelako Gobernuak, bestalde, apur bat lehenago onartua zuen hurrengo urteetan herrialdearen jarduera zuzenduko zuen Hiru Urteko Plana. Plan horretan garrantzi handia ematen zitzaion migratzaileen etorrerari, Venezuelako gizartearen ezaugarriengatik beragatik. Honela zioen plan honen 7. puntuan: «Gure demografia geldikorra da, eta, beraz, odol-ekarpen berriak behar ditu hazkunde mesedegarria sustatzeko. Venezuela ez da inoiz herrialde handi bat izango bere ahalmen ekonomikoaren eta giza faktorearen aurrean paralelismo harmoniatsurik gabe». Plan horren helburuak lortzeko, Immigrazio eta Kolonizazio Institutu Teknikoa sortu zen.

1938an Simon Gonzalo Salas doktorearen txosten bat ere argitaratu zen, Venezuelara etnikoki homogeneoa eta politikoki moderatua izango zen immigrazio baten beharra defendatzen zuena. Orduan argudiatzen zen Argentina eta Brasilen egindako akatsetan ez erortzeko beharra, ustez kontrolik gabeko immigrazioa gertatu baitzen haietan.

Simon Gonzalo Salasek ere identifikatzen zituen Venezuelan migratzaile izateko hautagaiak. Hauei buruz, Gonzalo Salasek honakoa zioen txostenean: «Euskaldunak dira eta gaur egun Frantzian daude, etortzeko irrikitan (…). Gaur egun, euren Aberri Handiaren umezurtzak dira eta gihar eta bihotzez hartuko lukete gurea. Ez dute atzerriko tutoretzarik, eta, beraz, immigrazioaren arazoa gertatzen denean, eragozpen handienetik salbu daude».

EAJk berehala hartu zuen aintzat Venezuelaren jarrera hori, jakina, eta 1939ko udan Euzkadi Buru Batzarra Eusko Jaurlaritzako ordezkariekin elkartu zen, Venezuelarako immigrazioak nolakoa izan behar zuen erabakitzeko. Jesus Maria de Leizaola Lehendakariordeak bederatzi puntutan laburbildu zuen erabakitakoa. Puntu horietan, politikaren gainetik eduki behar zuten izaera ekonomikoa aipatzen zen batez ere, eta lehentasuna ematen zitzaion Euskadin ekonomiaren osagarri izan zitezkeen enpresak sortzeari. Ildo horretan, merkataritza-flota bat sortzea ere aurreikusten zen, Frantzian errefuxiatuta zegoen euskal komunitatean marinel ugari zegoela baliatuz. Azken batean, Frantzian ziren erbesteratuen egoera arintzeko ez ezik, alderdiaren finantzetarako ekarpen ekonomiko posible gisa ikusten zuen EAJk euskal herritarrak Venezuelara emigratzea.

Garai hartan Venezuelan bizi ziren euskaldunen artean, herrikideen immigrazioaren aurkako ahotsak entzun ziren, eta hasieran ez zuten gomendatu, hainbat arrazoirengatik. 1938ko apirilean Venezuelara iritsitako Jose Maria Bengoa Lekanda doktoreak honako hau zioen: «Venezuelan lana aurkitzeko edo enpresa berri edo ezezagunei ekiteko dirua ekarri behar da, edo barnealdera abiatu, venezuelarrek, zoritxarrez, ia inoiz nahi ez dituzten lanen bila (…). Herrialdearen barnealdeko bizi baldintzak oso gogorrak dira, batez ere kontutan hartu behar den osasungintzan».

Venezuelan ziren beste euskaldun batzuen artean immigrazioa arbuiatzeko argumentu bat izan zen osasungarritasunaren gaia, eta argudio arrazistak ere erabiltzen ziren horretarako. Andres Aranbalaren kasua da, adibidez: «Gai berezi horri buruzko nire iritzi apala da benetako krimena litzatekeela gure jendea etorkin gisa etortzea; venezuelarren ehuneko laurogeita hemeretzik espainiarren akatsak dituztela eta bertuteetako bat bera

ere ez dutela esanez dena esanda geratzen da. Horri guztiari gehitzen badiogu tropikoaren ezaugarri den mota guztietako gaixotasunen klima, eta benereoak ez direla falta, esaten da bertokoen % 75 sifilitikoak direla. Xehetasun hori bakarrik nahikoa izango litzateke immigrazio horrek gure agintariei ekarriko liekeen erantzukizunari buruz serioski pentsatzeko».

Ramon de la Sotak ere, Eusko Jaurlaritzak New Yorken zuen ordezkarietako batek, euskal errefuxiatuak Venezuelara ez joatea aholkatu zuen. Agirre Lehendakariari bidalitako gutun batean honako hau zioen: «Duela egun gutxi lagun ingeles bat etorri zitzaidan bisitan Venezuelatik. Mr. Dempsterrek oso gauza interesgarriak esan zizkigun euskal immigrazioari buruz. Hondamendia izango litzatekeela dio. Mr. Dempsterren ustez, azken hiru immigrazioak, alemaniarrena, kanariarrena eta suediarrena, erabateko porrotak izan dira, eta orain euskal immigrazioaren aldeko aldarria egiten dute egunkariek».

Aurkako iritziak gorabehera, proiektuarekin aurrera egitea erabaki zuen EAJk, batez ere 1939ko udaberrian Arturo Uslar Pietri Venezuelako Immigrazio eta Kolonizazio Institutu Teknikoko zuzendari izendatu ondoren, honek Simon Gonzalo Salas zuzendariorde gisa babestu baitzuen. Biek uste zuten euskal immigrazioa baliagarria izango zela beren herriarentzat. Negoziazioen lehen unetik akordio baterako aukera mugatu zuen Venezuelako alderdiak, EAJtik etorritako errefuxiatuak soilik Venezuelan ezarri ahal izateko. Horrek ezinegon handia sortu zuen Eusko Jaurlaritza osatzen zuten gainerako indarren artean (PSOE; PCE; Izquierda Republicana, ANV-EAE) eta negoziazioetatik erretiratzea erabaki zuten. Indar politiko horiek prozesuak hartzen zuen izaera alderdikoia kritikatu zuten, batik bat PSOEko eta PCEko ezkerreko ordezkariek. Miguel Amilibia Gipuzkoako diputatu sozialistak bereziki gogor kritikatu zuen

EAJ erbesteko bere militanteei laguntzeko Eusko Jaurlaritzaren egiturak erabiltzeagatik.

Hautatuak alderdiko kideak izatea eskatzen zuen Venezuelak eta Euzkadi Buru Batzarra zerrendak egiten hasi zen. Hori arbuiatu eta kritikatu zuten alderdiko zenbait kide garrantzitsuk, hala nola Telesforo de Monzonek, uste baitzuten Eusko Jaurlaritzak egin behar zituela zerrendak eta ez EAJk. EBBk hori onartu gabe jarraitu zuen alderdiak ezarritako planarekin, Venezuelako agintariekin akordioak lortuz. Akordio horietan oinarrituta, Frantziatik lan-kontratu mugagabe batekin irtetekoak ziren erbesteratuak. Venezuelako Gobernuak bidaiaren eta instalazioaren gastuak aurreratzen zizkien erbesteratuei, eta euskaldunek denbora zuhur batean gastu horiek itzultzeko konpromisoa hartzen zuten. Horrekin batera adostu zen euskal etorkinak ez zirela Venezuelaren barne aldeko nekazaritza-kolonietara bideratuko, hango bizi-baldintzak oso gogorrak zirelako.

Venezuelara iristean, jada han bizi ziren beste euskaldun batzuek lagundu zieten euskal errefuxiatuei. Haietako askok berehala lortu zuten lana, Venezuelako agintarien eta EAJren arteko akordioei esker. Iritsi berrien artean profesional asko zeudenez, berehala ekin zieten Euskal Herrian egiten zituzten jarduera berberei. Mediku gehienak herrialde barrura joan ziren, haien zerbitzuak premiazkoagoak baitziren han. Beste batzuek tailerrak edo dendak antolatzea lortu zuten, bakoitzak bere esparruan. Bitartean, Maguregi kapitainak euskal errefuxiatuen kokapenaren garapen osoa monitorizatzen zuen eta txosten zehatzak bidaltzen zizkien EAJko arduradunei. 1939an EBBri bidalitako eskutitzetako batean honela zioen Ricardo de Maguregik: «herriak harrera ona izan du oro har». Era berean, jakinarazten zuen Venezuelako agintariek inolako arazorik gabe

dokumentu ofizialtzat onartu zutela "Igarobide", Eusko Jaurlaritzak emandako euskal pasaportea, eta errefuxiatuek agintarien, intelektualen, prentsa aurrerakoiaren eta Venezuelan bizi ziren euskal jesuita batzuen babesa izan zutela.

Emigranteen arteko elkartasuna gauzatzeko, Cuba pakebotean bertan hasi ziren Ricardo de Maguregiren proposamen bat eztabaidatzen, errefuxiatuei gutxieneko laguntza bermatuko zien erakunde bat sortzeari begira. Venezuelara helduta, 1939ko abuztuaren 6an Caracaseko Zuriñe Hotelean bildu zen euskaldun taldea eta Elkarrekiko Sorospenen Euskal Elkartea (Asociacion Vasca de Socorros Mutuos) sortu zen, Ignacio de Rotaetxe lehendakari zela. Venezuelan sortu zen lehen euskal erakundea zen hau, eta 1943an 217 bazkide zituen banako eta familien artean.

Venezuelara zihoan bigarren euskal errefuxiatuen taldea 1939ko uztailaren 28an abiatu zen Frantziako El Havre portutik, Flandre itsasontzian. Bidaiaren arduraduna Eusebio Barriola Irigoyen zen, ELA-STV sindikatuko San Andres Batailoiko kapitaina izandakoa. Preso hartu ondoren, heriotza zigorra ezarri zioten Santoñako espetxean, baina bizia salbatu ahal izan zuen 1938an izandako preso truke bati esker. Flandre ontzian 139 euskal errefuxiatu joan ziren.

Hirugarren bidaia Bretagne ontziak egin zuen, Francisco Elortegi Gamberen ardurapean. La Naviera Sota y Aznar ontziko kapitaina zen Elortegi eta Matxitxakoko lurmuturreko batailan parte hartu zuen Donostia gerra-bouko komandantea. 53 euskal errefuxiaturekin Venezuelako La Guaira portura iritsi zen abuztuaren 26an.

Gero, beste euskal errefuxiatu batzuk iritsi ziren Dominikar Errepublikatik Venezuelara. Trujillo diktadoreak gobernatzen

zuen orduan Dominikar Errepublika; han geratzeko baldintza politiko eta sozial zailak ziren euskaldunentzat, eta horregatik erabaki zuten gehienek bidaia jarraitzea Venezuelara iritsi arte. Haietako asko Kataluniatik zihoazen, tropa frankistak han sartu zirenean ihes eginda, eta beste batzuk Frantziako kontzentrazio-esparruetatik zihoazen. EAJko zenbait agintarik Ciudad Trujilloko kontsulatu venezuelarrean egindako esku-hartzeari esker konpondu ziren bideko trabak.

Euskal errefuxiatu haien bidaia epopeia bat izan zen zinez: erbesteratuta zihoazen, gerra-testuinguruan, beren lurra uztera behartuta, atzera inoiz itzuli ahalko ziren jakin gabe, bidaiaren bukaeran zer aurkituko zuten jakin gabe. Eta beste kapituluren bat ere izan zen bidaia horien artean, protagonistek erakutsi zuten ausardiagatik etxekoak eta arrotzak harritzeko modukoa. Ipar Euskal Herrian erbesteratuta zeuden Hegoaldeko 16 euskaldunek Ozeano Atlantikoa zeharkatzeari ekin zioten bi sardina-txalupa txikitan. Estatu espainiarrean gerra zibila amaitu eta bost hilabetera, 7.222 kilometroko distantzia egin zuten baldintza eskasetan, Alemania naziak II. Mundu Gerrari hasiera emanez Polonia inbaditzen zuen egunetan.

Donibane eta Bigarrena ziren bi ontziak, 14 metroko luzerakoak, 3,5 metroko zabalera eta 2 eta 3 oin arteko sakonera zutenak, 50 cv-ko potentzia zuen diesel motor banarekin. Aturri ibaiaren Bokaleko ontziola batean eginak zituzten euskal errefuxiatuek, eta 1938ko abuztuan Donibane Lohizuneko portuan uretaratuta euskal kostaldean arrantzan arituak ziren.

Baionako portutik abiatu ziren 1939ko abuztuaren 16an, eta errefuxiatu hauek zeramatzan eskifaia-lanetan: Bigarrena ontzian Mutrikuko Jose Maria Burgaña zihoan kapitain. Ondoan zituen Mundakako Antonio Lopez Altunaga, Getariako Emilio de la Hoz, Lekeitioko Cosme Goitiz, Ondarroako Jose Zaba-

leta, Durangoko Ricardo Azpiritxaga eta Elantxobeko Joseba Arrandiaga. Donibane ontzian, berriz, Mundakako Pedro Ruiz Loizaga zen kapitaina, eta eskifaiako kideak ziren: Leon Agirregomezkorta, Mutrikukoa; Jose Bedialauneta, Ondarroakoa; Pedro Bernedo, Ondarroakoa; Silvestre Isasi, Getariakoa; Fernando Etxegoien, Bediakoa, Ramon Koskorrotza, Lekeitiokoa; eta Francisco Valdivieso, jatorri ezezagunekoa. Itsas zabalean zeudela, bi kapitainek ikurrina ontzien popan jartzeko agindu zuten, eta bandera horrek identifikatu zituen bidaia osoan.

Lehen gertakaria itsaso zabalean zirela izan zuten, Bigarrenan polizoi bat zegoela konturatu zirenean. Polizoi hori beste euskal errefuxiatu bat zen, Migel Marina Barredo, Bilbokoa. Nola ezin zen atzera egin edo lehorreratzeko tokirik aurkitu, bi txalupek erabaki zuten bidaia jarraituz polizoia beraiekin eramatea.

Egin beharreko bidea zaila zen, ezin baitziren Kanariar Uharteetako kostaldera hurbildu, une hartan armada frankistaren eskuetan baitzeuden; ezta Azore edo Madeira uharteetara ere, Salazar jeneralaren gobernu portugaldarra Francoren aliatua baitzen. Horregatik, Senegaleko kostaldera abiatu ziren, eta Dakarreko portura iritsi. Han erregai, ur eta elikagaiekin hornitu ziren, frutarekin batez ere, eskorbutoa hartzeko arriskuari aurre egiteko.

Senegalgo portutik Atlantikoa zeharkatzera abiatu ziren, eta arrainez elikatzeko aukera izan zuten ontzietan kargatzen zituzten arrantza-aparailuei esker. Amerika eta Europa arteko ibilbidea egiten ari ziren merkataritza-ontziekin ere gurutzatu

ziren une batzuetan, baina II. Mundu Gerrak eztanda egin zuen garai hartan eta denek saihesten zituzten bi ontzitxoak. Beldur handia baitzitzaien alemaniar itsaspekoen balizko erasoei, eta bi ontzi txikiek itsaspekoen dorreak ziruditen ozeanoaren handitasunean distantziara ikusita. Beste gertakari bat ere izan zen, bi ontzietako baten motorra gelditu zenean dinamoaren arazo batengatik, baina tripulatzaileetako bat argiketaria zen eta konpondu ahal izan zuen.

Baionatik atera zirenetik hiru aste igaro ondoren, 1939ko irailaren 6an, Venezuelako Sucre Estatutuko Rio Caribeko portura iritsi ziren Bigarrena eta Donibane. Handik, abisatu zieten herrialdeko euskal koloniako arduradunei, eta haiek La Guairako portura joateko agindu zieten, Venezuelako agintarien aurrean erregularizatzeko. Bi egunen buruan iritsi ziren La Guairara eta portuko kapitainak, immigrazio-buruak eta Osasuneko mediku arduradunak hartu zituzten herrialdeko agintarien ordezkari gisa. Espainiako Kontsulak ere hartu nahi izan zituen, baina euskal nabigatzaileek ez zioten txalupetara igotzen utzi, eta lehorreratzean ikurrina sorbaldan hartuz egin zuten.

# IV

Lopez Arrimadas Polizia Armatuko kapitaina nahigabetuta zegoen goiz hartan. Gau osoan ezin izan zuen lorik egin, azken orduetan atxilotuen etorrera etengabearen ardura hartu behar izan zuelako Donostiako jefaturan. Aurrez aurre egin behar izan zituen atxiloketa eta miaketa partikular batzuetarako bi irteerez gain, ahalegin guztiak egin zituen kapitainak uztailaren 18an Donostiara gudari frankista ohiak zekartzan trenaren aurkako atentatu-saiakeraren egileak geldiarazteko. Baita banderak erretzearen edo hiriko kaleetan propaganda subertsiboa jaurtitzearen arduradunak atxilotzeko ere. Era berean, atxilotuak berotzen hasteko agindu zuen, Brigada Politiko Sozialak galdeketak hastea erabakitzen zuenerako prest egon zitezen. Brigada Politiko Soziala baitzen Madrildik zuzenean aginduak jasotzen zituena eta Polizia Armatua mendekotasun egoeran mantentzen zuena. Jefaturako ziegak urri geratu ziren operazioan atxilotutakoen kopuruarekin; ziega txikietan pilatu behar izan zituen edonola ere, eta, haiek guztiz bete zirenean, batzuk korridoreetako erradiadoreei kateatu zituzten eta baita bere bulegoan ere.

Galdeketak egin eta atxilotuek gertakarietan zuten inplikazioa zehaztu ahala, aske utzi edo kartzelara eraman ahala gauzak hobetuko ziren bere ustez. Gertaeretan ardura gehien zutenengan jarri ahal izango zuten arreta, gobernuaren aurkarien artean antolatzen ari omen zen sare berria erabat desegiteko informazioa lortzeko. Atxilotuetako asko aspaldiko ezagunak ziren, beste atxiloaldi batzuetako prozedurak zituztenak; bera eta bere agenteak haien etxeetara agertzen zirenean ez zioten gehiegi eusten eta nolabaiteko halabeharraren aurrean berriro

topo egiten duten ezagun zaharren gisa etsipenezko hitz dotoreren batzuk esateko ere gai izaten ziren.

Bazekien aske geratzen lehenak haiek izango zirela, baldin eta informazio berririk atera ezin bazitzaien. Edo epailearen erabakiz aldi baterako espetxeratu zitezkeen, egun horretan guardian zegoen epailearen umorearen arabera. Baina, normalean, haiek izango ziren jefatura utzita etxera itzultzen lehenak, ez, noski, argi izan gabe poliziak ondo kontrolatuta zituela eta gobernuari aurre egitea ez zela doakoa eta edozein unetan errebeldiagatik erantzutea eskatuko zitzaiela. Jefaturaren agindupean eman zituen hiru urteetan atxilotu haietako gehienek behin baino gehiagotan igaro ziren handik eta jakitun ziren haietaz dena zekitela. Baina beti zegoen haiei ateratzeko informazio berriren bat; azkoinak une egokian estutzen jakitea zen kontua.

Rodriguez sarjentua zuen horretarako lagun; bere konfiantza osokoa zen, agindupean zeukan azken hamar urteetan erakutsi zion bezala. Baina bazekien, halaber, gertutik kontrolatu beharrekoa zela. Askotan atxilotuekin eskua joaten zitzaion Rodriguezi eta, informazioa ateratzeko ezindua uzteaz gain, arazoren bat sor zezakeen nagusiekin, atxilotuak edo haren senideek eragin handiko pertsonaiaren batekin harremanen bat izanez gero. Antigua auzoko ostalariaren kasuan bezala. Bezero batekin izandako liskarragatik atxilotu zuten eta Rodriguezek ederki berotu zuen, eta Nafarroako Gobernu Zibileko arduradunetako baten lehengusua zela eta Madrilgo Polizia Armatuaren Ikuskaritza Nagusiko nagusiekin protesta egitera joan zen.

Hilabeteko atxiloaldia ezarri behar izan zion Rodriguezi auzia isilarazteko. Baina ez zuen inola ere baztertuko, bai baitzekien ez zuela aurkituko bere aginduak modu diziplinatuagoan betetzeko gai izango zen inor. Ezta hiriko putetxeetan zituen

negozioetan diskrezioa eta isiltasuna gordetzeko gai izango zenik ere. Haietatik diru-kopuruak jasotzen baitzituen babesaren truke, eta baimen edo beste lege arazoetan albora begiratzearen alde. Rodriguezek hilero zati bat jasotzen zuen bitartean ez zuen arazorik emango eta txintik esan gabe beteko zituen bere aginduak.

Rodriguez 50eko hamarkadaren hasieran sartu zen bere aginduetara. Garai hartan mendian babesten zen maki komunisten aurkako Huescako kanpainan izan zen. Baina makiak loturak eta kontaktuak ere bazituen hiriguneetan. Guardia Zibila haien atzetik zebilen mendian, eta hiriguneetan antolatutako armen, munizioen eta elikagaien babes eta hornidura sareak moztu behar zitzaizkien. Jakako postuan ulertu ahal izan zuen gerrako galtzaile haiek ez zeudela hain erraz amore emateko prest, eta gobernuaren aurka borrokatzen jarraitzen zutela galdu-gordeko borroka batean. Hasiera komunismoko buruzagien laguntza izan bazuten ere, gero abandonatu egin zituzten, eta Guardia Zibilak eta beste poliziek modu guztietan jazarri zituzten, harik eta desagertu ziren arte.

Baina ez zen lan erraza izan; komunista eta anarkista haiek jende gogorra ziren, Europan alemanen aurka ere borrokatu zutenak eta gerrillako taktika eta mugimenduetatik asko ikasi zutenak. Ahaleginak egin behar izan zituzten eta neurri gogorrak hartu, zeuzkaten laguntzak deuseztatzeko batez ere. Azken batean gobernuak bazekien hornidura eta laguntza sareak moztuz gero laster garaituak izango zirela.

Rodriguez bezalako eskrupulurik gabeko jendea zen gerraren kontzientzia oraindik bizirik zeukana, komunistekin eta Espainia suntsitu nahi zuten ateoekin aurrez aurre jarrita etenik gabeko borrokarako prest zegoena. Aginduak betetzen zituen jendea, bidezkoak ziren ala ez pentsatu gabe, egun luzeetan gerrillariei

segika ibiliz, gosea, hotza eta deserosotasunak igaroz, bide eta errepide bakoitzean bizia jokoan jarriz. Eta mozkortuta hilda bezala jaustea pausa hartzeko modutzat zeuzkaten. Horietako bat zen Rodriguez; oso argia ez zen izango gizona, inolako ikasketarik gabekoa, baina konkistatzaileek Ameriketara eraman zuten gizon mota, eta denbora gutxian eta potro galantekin Espainia bere garaiko Inperio handiena bihurtzeko gai izan ziren haien kastakoa. Rodriguez bezalako gizonak ziren bere ondoan eduki behar zituenak, nahiz eta batzuetan goragalea ere eragiten zien, herri okupatuetako emakumeak prostituitzen zituenean edo bere gosea ase nahi zuenean haietaz baliatzen zenean esaterako. Lopez Arrimadas kapitainak goragalea sentitzen du oraindik Rodriguezi bere balentriak entzuten dizkionean putetxera doazenean ordainsariaren bila, eta kexu da neskek orain eskatzen dioten prezioaz, eta sarritan gogoratzen gazte eta ederragoa zen garaia, lastategira eraman zituenekoa sagar ale soil baten truke.

Kapitainak ere atsegin du nesken zerbitzuak erabiltzea, baina beti diskrezioz. Inoiz ez da neska batekin logeletara igotzen Rodriguezekin kobratzera doanean; nahiago du noizean behin bakarrik ihes alditxo bat egitea, Rodriguez gertu ez izateaz gain, nesken proxenetekin hitz egiteko aprobetxatzen duelako eta askotan bisitak dohainik ateratzen zaizkiolako. Jende hori informazio-iturri ona ere bada, gainera, putetxe horietan jende asko mugitzen baita. Sinestezina da bezeroak prostituta bati batzuetan aitortu ahal diona, mozkortu eta mihia askatzen zaionean. Delinkuentzia arrunteko gaietan mugitzen den jendeari buruzko informazioa izateko balio dio batez ere, kontrabandista, lapur, iruzurgile, beste proxeneta eta gisakoei buruzkoak. Erregimenaren aurkakoak, aldiz, nahiz eta batzuk gutxi gorabehera ohiko bezeroak izan, beti dira diskretuagoak.

Kapitainak ez du bere burua biziotsutzat, baina gizona da eta bere beharrak ditu. Putetxeetara egiten dituen bisiten tarteak beti luzatzen ditu denboran, eta inoiz ez doa bi aldiz jarraian toki berera; batetik bestera igarotzen da, azkenean bere presentziara ohitzen direlako eta ez duelako nahi polizia gisa ezartzen duen begirunea eta batez ere beldurra galtzea. Polizia Armatuak bere kideei ezkontzeko ezartzen dizkien baldintzetatik datoz, batez ere, haien beharrak, batez ere. Lopez Arrimadas kapitainari gustatuko litzaioke Donostiako neska gazte batekin ezkontzea, edo beste leku batera joan eta neska bat aurkituz gero familia bat osatzea, baina araudiak dio ezkondu nahi izanez gero polizia armatuak bere nagusiei eman behar diela bikotekideari buruzko informazioa. Ulertzen duen segurtasun-neurri bat da, modu batean edo bestean infiltratua izan ez dadin polizia, baina bere kasuan ez du onartzen, iraingarria iruditzen zaio agintariak beren bizitza pertsonalean miatzen hastea, eraman behar duten bizimodua zorrotz kontrolatuz, eta ez dago horrelako trantze batetik igarotzeko prest. Gainera, ez zaio erraza iruditzen Donostian bikotekide bat aurkitzea, euskaldunak jende arrarotzat hartzen ditu, oso itxiak elkarren artean, eta oraindik ere gerra galdu izanaren eta garaileak gorrotatzen jarraitzearen drama daramate. Atzerritar batzuek bat-batean Espainiako zati hau inbaditu eta herrialde arrotz bihurtuz bertan kokatu balira bezala; ez du ulertzen beren izaera, are gutxiago beren kultura, darabilten basati hizkuntzagatik batik bat. Debekatuta egon arren ezkutuan erabiltzen jarraitzen baitute, eta batzuetan ez dakite gaztelaniaz hitz egiten, Jainkoak agintzen duen moduan.

Beren festak egiten dituztenean ere arrotzak dira, eta legeak urratzeko aprobetxatzen dute, euren jentil irudi horiek ateratzen dituzte, edo bandera debekatuaren koloreak, eta gastronomia ere erabiltzen zinezko asmoak disimulatzeko, Espainia-

tik aldegiteko gogoa ezkutatzeko. Agintari asko joko horretan erortzea da okerrena, beren misioa ahaztuz; beren elkarteren batean sabela betetzeagatik ahaztu egiten zaie aberriaren etsaiak ere hor ezkutatzen direla. Lopez Arrimadasek gorrotatzen ditu euskaldunak, ez gerran Espainiaren etsaiekin batuta borrokatu zirelako bakarrik, baita diren modukoak direlako ere, eta egunez egun ikusarazteagatik inoiz ez dutela kidetzat onartuko ez bera eta ez beretarrik.

«Jende hori ez da espainiarra, eta ez dira inoiz izango makilakada asko emateagatik», pentsatzen du; eta denborarekin arazo ugari sortuko dutela ziur dago, gainera, nahikoa baita nolako gazteria iristen ari dela ikustea, beren gurasoak izan zirena baino matxinatuago. Batzuetan, bere gogoeten berri eman zien bere nagusiei, eta arazoari aurre egitea eskatu zien, areagotu baino lehen. Baina inoiz ez zuten arrakastarik izan bere erreklamazioek. Beti erantzuten zioten dena kontrolpean zutela, oposiziogileak jazartzeko eta errebeldeei merezitako saria emateko lanarekin jarrai zezala, Estatua eta Eliza ere lanean ari zirela euskaldunak beren lekuan jartzeko. Estatua, egunetik egunera ustelago, hemengo industrialari handien interesetara makurturik dago; eta Eliza, herrietako eta parrokietako apaizak beren jendea bezalakoak baitira, ezkutuan mezak euskaraz ematen dituzten apaizekin. Horietako batzuk Zamorako apaizen kartzelan amaitu dute, baina gehienak gotzainak bakarrik deitu ditu ordenara.

«Euskaldunak Frantziara edo Amerikara bidali beharko genituzke eta espainiarrak hona ekarri», pentsatzen du askotan Lopez Arrimadas kapitainak, baina gero gogoeta egiten du eta pixkanaka hori gertatzen ari dela konturatzen da. Ez euskaldunak beren lurretatik kanporatzen ari direlako, baizik eta gero eta espainiar gehiago etortzen direlako Euskal Herrira bizitzera eta lan egitera. Are gehiago, irekitzen ari diren lantegi eta

tailerretan lan egitera iristen ari dira Extremadurako herritar asko, eta baita fabriken inguruko hiri eta herrietan ugaritzen ari diren eraikin ugariak eraikitzera ere. Batzuetan bere herrikide Rodriguezekin hitz egin du horretaz; ez du ulertzen gobernuak zergatik ekartzen dien inbertsiorik espainiar sentitzen ez den jende horri. Hobe luke Extremadurara eramatea, han pobreak arratoiak baino pobreago direlako oraindik, Mugimendu Nazional Gloriosoaren aurretik bezala, jauntxoek dena eurentzat nahi izan baitute beti eta ez baitute ezer utzi inorentzat. Hango herritarrek Alemaniara emigratzen jarraitzen dute, edo hona, Euskal Herrira, han ez baitago merezi duen lanik.

«Eskerrak Armada, Polizia edo Guardia Zibila geratzen zaigun oraindik —esaten dio Rodriguezi, eta hori entzutean sorbaldak jasotzen ditu beti—. Extremadurakook lurra hutsik uzten dugu beti, gure kondena da. Ea hona iristen direnak honetaz jabetzen diren eta hau Espainia izaten den berriro. Nire zalantzak ditut. Horien artean beti egon baita gorri asko. Ikusiko dugu nola datozen horien seme-alabak eta belaunaldi batean edo bitan ez ote diren haiek ere euskaldun bihurtzen».

Ezkontzeko kontuak oinazetzen zuen Madrilgo Canillejas auzoko Prestakuntza Akademian teniente graduatu zenetik. Han egon zen urte eta erdian askotan pentsatu zuen bikotekidea aurkitu eta bertan bizitzen jartzeaz. Are gehiago neska bat ezagutu zuenean, zeinarekin igandetan, meza ondoren, hiriburuko erdigunean paseatzen baitzuen, eta terraza batean esertzen baitziren, kafe bat hartzera. Baina horrek gutxi iraun zuen. Aireko Armadako ofizial bat zen haren aita eta hark uste izan zuen polizia armatu bat ezer gutxi zela bere alabarentzat; koronel adiskide baten semearekin konprometitu zuen. Baina Lopez Arrimadasek ez zuen denborarik izan galera harengatik negar egiteko; graduatu bezain laster Huescara bideratu zuten makiari aurre egitera, Jakako komisariatik mendian komunista ma-

txinoen ehizan zebilen Guardia Zibilari laguntzera. Esperientzia gogorra eta neketsua izan zen, postuko komandanteorde izan zen hiru urteetan, dena Poliziari emanda, ez baitzuen denborarik izan bizitza zibila egiten saiatzeko. Gerrillariek, ia suntsitu zituztenean, bizirik atera zirenek erbestera ihes egin zuten, Frantziara lehenik eta Amerikara gero. Bera kapitain izendatu zuten orduan, eta Donostiako Buruzagitzako komandante Euskal Herrian. Hasieran poztu egin zen, eta Rodriguez berarekin eraman zuen sub-alterno gisa. Baina orain, destino horretan hainbat urte eman ondoren, nahiago zukeen beste edozein lekutara bidali izan balute.

Bere arazo nagusia Brigada Politiko Soziala zen. Edo mailaz igotzea gehien eragozten ziona, hobeto esanda. Hobekuntza ekonomikoak lortzea, gutxienez, eta baja eskatu eta errentetatik bizitzea, edo Euskal Herritik kanpoko beste probintzia batean negozio txikiren bat sortzea, han bere bizitza berregin eta polizia izateak zekartzan arriskuak eta atsekabeak ahaztu ahal izateko.

Donostiara iritsita kostako hiri bat zela ikusi zuenean, eta Frantziako mugatik oso gertu zegoela, gainera, berehala pentsatu zuen polizia ofizial bati erraza izango zitzaiola han bere soldata hobetzeko negozioak egitea. Espainia beharrizan handiko herrialdea zen, eta kontrabandoa gai-zerrendan zegoen, erregimen frankistaren pean lortzen zailak ziren plazerez hornitzeko aberatsak eta irrikatsuak. Likoreak, tabakoa edo pornografia gero eta gehiago mugitzen ziren, mugaren bi aldeetara animalien joan-etorri tradizionalari lehia eginez. Hasiera batean eskuak igurtzi zituen, baina berehala konturatu zen Brigada Politiko Sozialeko kideak zirela negozioaren jaun eta jabe. Okerrena zen haiek ez zeudela inola ere prest negozioa partekatzeko, eta are gutxiago Polizia Armatuko ofizial batekin, beraien zerbitzurako tresnatzat jotzen baitzuten.

1959ra arte, polizia armatuek soldatak handitzeko modu bat izan zuten, beren eskumenen artean zegoelako errepideetako trafikoaren kontrola. Ez zen irabazi handiko negozioa baina zerbait uzten zuen, batez ere penintsula osoko hirien artean salgaiak garraiatzen zituzten kamioilariei diru-kopuruak kobratuz, ia beti arau-hausteren bat egiten zutelako ibilbideetan. Batzuetan gainkargatuta joaten ziren, beste batzuetan derrigorrezko dokumentaziorik gabe; inoiz edo behin ez zuten zirkulazio-kodea errespetatzen, eta, isuna ezarriz zigortu beharrean, agenteak akordio batera iristen ziren garraiolariekin. Horrela, Estatuaren kutxetara inoiz iristen ez zen ordainketa baten ondoren, bidaia jarraitzen uzten zieten. Ofizialek bazekiten agenteek praktika horiek egiten zituztela, baina bazekiten soldatak baxuak zituztela ere eta poliziek nolabait bilatu behar zutela beren egoera hobetzea. Ezikusiarena besterik ez zuten egiten; ez zuten uzten praktika hori lekuz kanpo ateratzen, nagusien belarrietara iritsi eta eskandalurik sor ez zedin, eta agenteek astero beren irabazien zati bat ematen zieten, eta mundu guztia pozik. Ez zen negozio handia, baina hilabetearen amaieran zerbait geratzen zen. Lehenik eta behin, ez zen oso onuragarria, ezin baitzitzaion edozein garraiolariri estortsioa egin, berak mendekoei oso argi utzi zien moduan. Kamioilari asko erregimen frankistako pertsonaia handien enplegatuak ziren, kamioi-floten jabeak, eta penintsula osoan zehar elikagaiak eta salgaiak garraiatzeko autoritateak ematen zituen kontzesio mugatuak esklusiboki maneiatzen zituztenak. Kontuz ibili behar zen norekin sartzen ziren, eta argi ibili behar zen atxikitako garraiolaria Espainiako handiren baten morroia zela ohartu eta arazoak saihesteko.

Baina negozio hori amaitua zen. 1959an sortu zen Guardia Zibilaren Trafiko Elkartea, errepideetako zaintzaren eskumen guztiak beregain hartzen zituena. Baita salgaien garraioaren kon-

trola ere, beraz. Polizia Armatuak trafikoa kontrolatzeko funtzioak mantendu zituen, baina hiri-eremura mugatuta, eta hor egin zitekeen negozioa oso urria zen, are urriago urte horietan, Espainiako Estatuan oraindik automozio-parkea oso murritza zenean. Guardia Zibila zen orain oinordetzan hartutako negozioa kontrolatzen zuena, baina haien ofizial eta agenteek ez zuten Polizia Armatuarekin partekatuko inola ere.

Lopez Arrimadas kapitainak bazekien poliziaren eskalan gora egiteko modu bakarra zerbitzu-orri on bat lortzea zela. Nagusiak txundituta utziko zituzkeen zerbitzu-orri bat, goi mailako meritudun bihurtuko zuena, eta aldi berean ateak irekiko zizkiona postu burokratikoagoren batean, lehen lerroko arriskuetatik aldenduta destino hobea lortzeko. Baina gobernuaren oposizioaren errepresioan zerbitzu garrantzitsuren bat egin behar zuen horretarako. Donostian munta txikiko lapurrak eta proxenetak arrastoan mantendu ahal izango zituen, eta BPSaren edo Guardia Zibilaren operatiboetan laguntza eman mugako kontrabando-sareen aurka. Edo salgaien konfiskazio garrantzitsuren bat lortu zezakeen. Baina horrela ez zen bera izango arrakasta lortuko zuena; menpeko gisa agertuko zen beti besteren baten aginduetara, eta goragoko idazkariren baten zorionak mereziko zituen, gehienez ere, sekretak edo berdeak laguntzeagatik. Eta hori ez zen nahikoa izango eskalan gora egin eta beste norabait joateko. Ez; efektu kolpe bat behar zuen nagusien aurrean bere balioaren arreta erakartzeko.

Patuak agian aukera hori hurbildu ziola pentsatu zuen, esplizituki bilatu gabe gainera, zorte kolpe bat bailitzan. Hori zen komisariako ziega batean atxilotuta zegoen emakume atzerritarraren kasua. Aurreko gauean atxilotu zuten bere agenteek Donostiako Alde Zaharrean egindako sarekadan. Kasua susmagarria iruditu zitzaion hasieratik; izan ere, zer egiten zuen atzerritar batek bakarrik Donostian, lagunik gabe hoteleko gela

batean? Hasiera-hasieratik pentsatu zuen han bazela zerbait argi ez zegoena, egun horietan ospatzen ari ziren Euskal Jaiengatik hirira iritsitako norbait izan zitekeela.

«Emakume bakar bat, hirian inork ezagutu gabe? Ez ote da espioi kamuflaturen bat Espainiako gobernuaren aurka dauden demokrazia horietakoren batean? Edo militanteak errekrutatzen dituen atzerriko alderdi komunistaren batekoa?» zioen kapitainak bere artean.

Hor bazegoen zerbait argi ez zegoena, eta galdeketez eta ikerketaz pertsonalki arduratzea erabaki zuen. Brigada Politiko Sozialekoek uzten zioten bitartean behintzat. Horregatik agindu zuen neska bakarrik giltzapetzea ziega batean, gainerako atxilotuekiko harremanetatik urrun, eta atxiloketaren berri ez zuen oraindik ofizialki eman. Orain, BPSekoek borrokalari ohien aurkako atentatu saiakeragatik atxilotutako guztiekin oso lanpetuta zeudenez, azkar jokatu behar zen. Rodriguez beste zerbitzu guztietatik askatzea erabaki zuen, eta bien artean galdeketa egingo zioten, emakume horrek Espainian benetan zer egiten zuen zehatz mehatz jakiteko.

Atzerritarraren nazionalitateak, venezuelarra baitzen, berehala eman zion atentzioa. Emakumearen abizena ere, Antxeta, argi eta garbi euskalduna zen. Sustraiak nolabait Euskal Herrian zituela erakusten zuen eta sakonki ikertu beharko zuen hori. Ez zen nazioarteko politikan aditua, baina bazekien Venezuelan Perez Jimenez jeneralak gobernatu zuela ez aspaldi arte, eta Francorekin harreman onak zituen gizon gogorra zela. Baina bazekien Karibeko herrialde hartan iraultza moduko bat gertatu zela, Perez Jimenez boteretik kendu zuena, eta esaten zen Espainiara erbesteratu zela Generalisimoarekin zuen adiskidetasunari esker.

Atxilotutako emakumea venezuelarra zela jakin bezain laster, eta herrialde horretako egoeraren berri handirik ez zuenez, Canillejaseko Akademiako kide ohi batekin, Sanchez kapitainarekin, harremanetan jarri zen. Kide ohiak Madrilen geratzea lortu zuen, enbaxadak eta diplomatikoak babesteko postu batean, eta beti nabarmendu zen nazioarteko politikari buruz zuen interesagatik. Hark zer informazio eman ziezaiokeen ikusi behar zuen.

Sanchez kapitainak esan zion gerra ostean ihes egindako gorri eta separatista ugari hartu zituen herrialdea zela Venezuela, han eroso kokatu zirela asko eta ekonomikoki ondo zihoakiela. Informazio-zerbitzuek bazekitela Caracasetik, Venezuelako hiriburutik, erbesteratuen taldeek finantzatzen zituztela atzerrian funtzionatzen jarraitzen zuten Errepublikaren eta Euskal Herriko eta Kataluniako separatismoaren alderdi eta erakundeen hainbat jarduera, erbestean zegoen Eusko Jaurlaritzarena bezala. Halaber, Espainiako eta Venezuelako gobernuen arteko harremanak onak izan zirela, Perez Jimenez jeneralaren aginte aldi luzean batez ere, Francisco Francoren lagun pertsonala izateaz harro baitzegoen. Baina gaineratu zion bi urte lehenago boteretik kendu ondoren zalantza bat zabaldu zela, eta oraindik ez zekiela nolakoak izango ziren aurrerantzean bi gobernuen arteko harremanak. «Oraingoz ez da aldaketarik izan, nagusien artean entzuten ditudan elkarrizketetatik interpretatu ahal izan dudanagatik behintzat —esaten zion Sanchezek—. Venezuelako gobernu berriak Madrilgo enbaxadore bera mantendu du, Jose Saul Guerrero Rosales Abiazio Dibisioko jenerala, Perez Jimenezengandik oso hurbil zegoen gizona. Bere gobernuan postu militar zein zibil garrantzitsuak izan zituena da, eta horrek esan nahi du Caracaseko agintari berriek Madrilekin harreman onak izango dituztela». Hori zen Sanchezek oraingoz esan zezakeen guztia.

Madrilgo kideari eskerrak eman eta, Venezuelako gaien inguruko interesaren arrazoirik argitu gabe, beste laguntzaren bat behar izanez gero berriro dei egingo ziola esan zion. Sanchez kapitainak eskerrak eman zizkion berarekin gogoratu izanagatik, eta behar zuen edozertan laguntza agindu zion. Egunen batean Madrilera joateko gonbita egin zion Lopezi Arrimadasi, ardo botila bat aurretik zutela Akademian bizitako une onak gogoratzeko.

Telefonoa eskegi bezain laster pentsatu zuen Lopez Arrimadasek atxilotuak bere herrialdean baliabide separatistekin izan zitzakeen harremanei buruzko ikerketak zuzentzea izango zela egokiena. Gai ekonomikoari dagokionez batez ere. Hura ez baitzen Espainian egongo separatismoa finantzatzeko dirua hona ekartzeko bakarrik, Sanchezek esandakoa gogoraraziz. Konplizeekin Donostian lituzkeen harreman sekretuengatik ere etorriko zen. Baina azkar jokatu behar zuen, Brigada Politiko Sozialekoek kasua eskuetatik kendu aurretik, haiek azkenean meritu guztia beraientzat hartuko baitzuten.

# V

Sentitzen dut nire besoek ezin izango didatela luzaroago eutsi; hasieran kateen mina behintzat sentitzen nuen eskumuturretan iltzatzean, baina orain iruditzen zait odola ez dabilkidala zainetan, eta edozein unetan lurreratu egingo nauela pisuak, besoak sorbaldetatik erauziz. Ordu asko daramatzat sabaiko kako horretatik zintzilik; oinazea luzea izan dela iruditzen zait, nahiz eta ez dakidan zenbat denbora igaro den. Une honetan, behintzat, ez daude hemen grisez jantzitako bi poliziak, minezko eta haragi kolpatuzko orain naizen gorputz hau bihurtu nautenak. Ez dakit beren galderei nola erantzun; nire amesgaiztorik txarrena bizitzen ari banintz bezala da, ezin diet ezer esan, ezer ez baitakit jakin nahi dutenaz. Baina ez, gogoratzen dudan amesgaiztorik txarrenean ere ez dut horrelakorik jasan.

Ziegatik atera nindutenean poztu egin nintzen pentsatuz azkenean ulertarazi niezaiekeela pertsonaz tronpatu zirela; Donostiara etorri den turista bat besterik ez naizela. Oporretan nagoela eta gurasoen herrialdea ezagutu eta festak aprobetxatuz pixka bat dibertitzea dela nire asmoa. Baina oker nengoen zentzuzko pertsonekin tratatuko nuela pentsatuz. Bulego batera eraman ninduten eta agidanez agintean dagoenari turista hutsa naizela esaten saiatu nintzen. Berrogeita hamar bat urteko gizona zen, eta mespretxu aurpegiz begiratu zidan. Berehala altxatu zen aulki zahar batetik eta hurbildu egin zitzaidan, baina nire kexuen erantzun modura aurpegian ukabilkada bat eman zidan. Besterik ez. Kolpatu ninduenean haginen bat hautsi zidala pentsatu nuen, ia oreka galdu nuen eta sentitu nuen atzeko aldean neukan beste poliziak eusten zidala ez erortzeko. Orduan negar baino ezin izan nuen egin, eta ukabilkadak baino min handiagoa eman zidan sentitu nuen haserreak. Nire pre-

sentziari buruzko galderak egiten hasi ziren; zergatik eta zertarako nengoen Donostian. Baina ez dirudi entzun nahi zidatenik; ez dakidan zerbait esango diedala espero balute bezala. Ez dut ulertzen. Nortzuk bildu ziren nirekin, nork bidali ninduen Caracasetik Donostiara, nonbaiten ezkutatuta daukadan diru bat nori eman behar diodan. Erokeria da, ez dakit nola erantzun ulertzen ez ditudan galdera horiei. Agian hotelean ez diete esan bakarrik nagoela, inor ez dagoela nirekin, edo agian hori da gehien kezkatzen dituena?

Lehenengo kolpearen ondoren, bulegoko bazter batean zegoen aulki batean esertzera behartu ninduten. Hain azkar iristen ziren haren galderak, bata bestearen ondoren, ezen, horien erantzunak izan banitu ere, ezinezkoa izango baitzitzaidan esan beharrekoa esatea. Errepikatu nahi nien pertsonaz tronpatu zirela eta nire venezuelar nazionalitatea baliarazten saiatzen nintzen, Donostiako eta herrialde honetako errealitatea ezezaguna zitzaidala ulertarazi nahian. Baina horrek are gehiago gogaitzen zituen, antza denez, eta atzean zegoen poliziak, besoetatik heldu eta tiraka, mugitu ezinik utzi ninduen.

Bi gizon indartsu dira emakume txiki honen aurka. Buru egiten duenak bere atzamarrak jarri dizkit begien gainean, zapalduz, eta, belarrien atzean hain gogor estutu ditu, ezen lehertu dizkidala pentsatu baitut. Oinazea hain izan da latza! Gogoratzen dut garraisi egin dudala, neure buruarekin ikaratzerainokoa. Ez dakit zenbat denbora iraun duen, baina azkenean, eskuak kendu dizkidanean ezin nuen ezer ikusi. Ikusmena kaltetu didala pentsatu dut momentuan, eta zorabiatuta geratu naiz, horrela mantendu naute apur batean, ikusmena itzuli zaidan arte. Atzean zegoenak besoak askatu dizkit orduan, eta begi minduak atzamarrez haztatzen saiatu aurretik, bizkarrean sentitu dut lehen zartada. Haren jarraian beste batzuk etorri dira, lepoan eta giltzurrunetan. Oinazeak neure baitan makurrarazi

nau eta besoez babesten saiatu naiz, baina dena okerrera joan da, aurrean dagoenak ukabilkada bat eman baitit urdailean, eta jarraian beste bat bularrean. Lurrera erori naiz eta hor alde guztietatik ostikoak eman dizkidate, bi gizon hauek, bi zoro bihurtuta, hondarrezko zaku bat jotzen hasi balira bezala. Apenas ulertu ditudan bota dizkidaten irainak, atzerritar komunista, jaungoiko gabeko separatista... Nondik atera ote dituzte niri buruzko ideia horiek?

Ni jotzen nekatu zirenean, berriro eseri ninduten aulkian, eta atzeko aldean nuenak berriro heldu zidan besoetatik. Donostian nituen kontaktuei buruzko galderekin ekin zioten berriro, haien ustez nonbait ezkutatuta zegoen diruari buruzkoekin. Negar artean bakarrik hitz egin nezakeen, baina saiatu nintzen esaten ez nekiela ezer galdetzen zidatenaz. Orduan nagusi egiten zuenak hain gogor heldu zizkidan bularrak, non lehertu egingo zizkidala uste izan nuen. Mina handia izan zen, baina uste dut lotsak min handiagoa eman zidala; inork ez ninduen inoiz horrela tratatu. Berriro garrasika hasi nintzen, eta horrek are gehiago haserretu zituen; aulkitik altxatu ninduten eta beren indar guztiekin hormaren kontra jaurti, behin baino gehiagotan. Errebotatu egiten nuen hormaren kontra jotzean, eta polizietako batek eusten zidan bezain laster etorri eta berriro jaurtitzen ninduen besteak. Aldi haietako batean nire kopetak hormaren kontra jo zuen eta erortzen ari nintzela pareta odolez zikinduta zegoela ikusi nuen. Uste dut orduantxe galdu nuela konortea.

Konortea berreskuratzean, bustia sentitu nintzen, nire gorputz osoan ura isuri izan balute bezala. Azpiko arropatan bakarrik nengoen eta lotsak hartu ninduen berriro. Bi egun igaro dira bainatu eta aldatu ahal izan nintzenetik eta oso zikin sentitu naiz momentu horretan; gutxienez espero dut hilekoa ez iristea, baina egun hauetan etortzear izan behar dut.

Aulki batean eserita zegoen poliziaburuak belaun gainean ahoz gora etzanda eduki ninduten, eta besteak ezkerreko hanka bihurritzen zidan orkatilatik helduta. Hautsi behar zidala uste nuen eta nahiago nukeen konorterik gabe egon izan banintz. Eusten zidan polizia bere esku irekiaz urdaila jotzen hasi zitzaidan; kolpe bakoitzean zutitzen saiatzen nintzen, baina bere besoek eragozten zidaten. Arnasa eteten zitzaidala eta itotzen nintzela sentitzen nuen. Zerbait atera zitzaidan sudurretik eta belarrietatik, eta ezpainetatik mihia pasatzean konturatu nintzen odola zela. Odolaren zapore gazia nabaritzean ikaratu nintzen; ikara beldurgarria eragin zidan, gizon horiek hilko nindutela sentitzeraino.

Lasaiago hitz egiten hasi ziren; larrialdietako zentro batera eramatea eskaini zidaten, kolpeak sendatzeko, baina laguntzen ez banuen eta galderei erantzuten ez banien, kolpeekin jarraitzeko mehatxua egin zidaten. Esaten zuten beraiei ez zitzaiela ezer gertatuko ni hiltzen banintzen, azken finean separatistei laguntzen zien atzerritar bat besterik ez nintzela, eta inor ez zela kezkatuko ni desagertarazten banninduten. Mendian lekuren batean lurperatuko nindutela eta nire familiak ez zuela inoiz jakingo non geratu ziren nire gorpuzkinak. Norbaitek noizbait erreklamatuko balie, esango lukete nire gorputzeko urradura eta ubelduen aztarna guztiak atxiloketaren unetik zetozela; aurre egin eta poliziei eraso niela. Ibairen batera eraman eta han itoko nindutela ere esan zidaten, eta gero uretara botako nindutela korronteak urrutira eraman nintzan eta inork jakin ez zezan nora iritsi nintzen eta non nengoen.

Eta galderak itzuli ziren berehala, bata bestearen jarraian. «Zertarako etorri zara Donostiara? Nork agindu dizu Caracasen hona etortzeko? Norekin biltzen zara Euskal Etxean? Nor da separatisten buruzagia han? Non gorde duzu ekarri duzun

dirua? Nork eta non jaso behar du? Hitz egin edo lehertu egingo zaitugu».

Venezuelako enbaxadarekin hitz egiteko eskatzen saiatu nintzen. Turista bat besterik ez naizela esango lieke hark, ez dudala zerikusirik hemen gertatzen denarekin. Baina barre egiten zuten eta urdailean eta bularretan kolpatu ninduten berriro eta kolpe bakoitzarekin arnasa eteten zitzaidan. Bigarren polizia hankak modu nazkagarrian ukitzen hasi zitzaidanean, eta lerdea erortzen zitzaiola ikusten nuen. Botaka egitera nindoala sentitu nuen, eta nire gonbitoa bat-batean irekitako iturria bezala irten zen, poliziaren galtzetara, dena zikinduz. Orduan lurrera bota ninduten modurik zakarrenean. Aurpegia lurrearen kontra kolpatu nuen berriro. Iraindu egiten ninduten: «Nazkagarri, zikin, nazka gehiago ematen duzu txerri batek kakan iraulka baino». Ostikoka ekin zidaten berriro, gorputz guztian, etengabe, aspertu ziren arte. Halako batean joan ziren eta bakarrik utzi ninduten. Bazirudien nire zikinkeriak garbitu nahi zituztela, lurrean, mugitzeko indarrik gabe botata nengoen lekuko putzuaren kuxidade hura guztia.

Hurrengo agertu zirenean, bien artean altxatu eta arrastaka eraman ninduten beste gela batera. Sartzean dena ilun zegoen hor, baina bat-batean argi indartsu bat piztu zuten. Sabaitik kate bat zegoen eskegita eta, polizietako batek eusten zidan bitartean, besteak nire eskumuturrak lotu zizkidan kateari. Eskumuturretatik kateatu nindutenean nire hankak gorputzaren pisuari eusteko gai ez zirela sentitu nuen. Katea nire eskumuturretan sartzen zen, gainera. Nagusia zirudienak besteari agindu zion momentuz uzteko, hausnartzeko denbora pixka bat behar nuela zioen, beraiek munduko denbora guztia zutela, eta bere bulegora itzuli zen.

Nazka gehien ematen didana hasi zitzaidan berriro ukitzen; ezin nuen erresistentziarik txikiena ere eskaini. Eskuak nire bularretan pausatu eta indarrez estutu zizkidan; garrasika hasi nintzen eta aurpegian ostiko bat eman zidan mehatxatzen ninduan bitartean. «Erakutsiko dizut gizon bat zer den, puta!», esan zidan.

Jarraian brazierra eta kuleroak erauzi zizkidan, halako moldez non han bertan hil nahi izan bainuen, halako piztiak nirekin nahi zuena egin baino lehen. Baina dena inpotentzia zen, ezina; eskuak nire belaunetatik sexura igotzen hasi zen, nire pubisa ukitzen zuen eta bere hatzetako bat nire baginan sartzen saiatu zen. Garrasi ozenagoa egin nuen. Ahots bat entzun zen bulegotik. «Rodriguez, utz ezazu oraingoz, agindu bat da!». Polizia nire atzean jarri zen orduan eta bularrak heltzen zizkidan bitartean bere hankartea nire ipurmasailekin igurzten zuen. «Lasai, puta; hemen beti dago denbora. Hobe duzu dakizun guztia esatea, edo infernua ezagutuko duzu».

Aurpegian ematen didan eta ia itsu naukan argi hori! Zezena hiltegian bezala kakotik zintzilik nago, biluzik eta kolpeek eta umiliazioak minduta. Lo egin nahi nuke, eta amesgaizto honen garaia agor dadila. Orain ulertzen ditut heriotza nahiago dutenak oinazez eta sufrimenduz betetako bizitza baino.

# VI

1941-1960. Venezuela.

1939ko abuztuaren 7an, II. Mundu Gerra atarian zela, Lurralde Nazionalean Atzerritarren Jardueren Legea aldarrikatu zuen Venezuelako Gobernuak. Horrela, zenbait arau ezarri ziren, jada saihestezina ikusten zen munduko gatazkaren aurrean herrialdearen neutraltasuna bermatzeko.

Venezuelan euskal errefuxiatuek sortu zuten lehen erakundea lege horri atxikita legeztatu zen. "Elkarren Sorospenerako Elkartea" alegia, bere afiliatuei osasunaren arloan laguntza ematea helburu zuena. Baina onartutako arauak debekatu egiten zuen jarduera alderdikoiak egitea eta atzerriko ikur politikoak erakustea. Gerra aurreko testuinguru horretan, Venezuelako lehen Euskal Etxearen legeztatzea 1941era arte atzeratu zen.

Baina euskaldunen antolaketa-tradizioa agerian geratu zen iheslariak Venezuelara iritsi bezain laster, eta 1940an erbesteratu haien talde bat hasi zen Euskal Etxea sortzeko gestioak egiten. 1941eko urte hasieran, Antolaketa Batzorde gisa eratu zen talde hori, eta Caracaseko «Santa Capilla» tabernan biltzen hasi zen lehen estatutuak idazteko. Bileren arrakasta ikusita, euskal komunitateko gero eta jende gehiago bertaratzen zen eta, horregatik, lokal nagusi batera lekualdatzea erabaki zuten. Horrela joan ziren elkarteko kide baten «Txoko» izenekoa jatetxera.

1941eko apirilean talde sustatzaileak prest du estatutuen zirriborroa. Prentsaren bidez Batzar Konstituziogilerako deialdia egin zuen, maiatzaren 10ean egiteko Palma eta Miracielos kaleen arteko lokal batzuetan. Batzar horretan onartzen da Araudia eta Zuzendaritza Batzorde berriari agintzen zaio Euskal Etxea ezartzeko lokala lortzeko gestioak has ditzala.

Lehenengo egoitza Caracas erdiguneko Cipreses kalean jartzen da, eta bere jarduerak beste Batzar Nagusi baten ondoren hasi ziren. Lokala mantentzeko pertsona bat kontratatzea, euskal koloniako emakumeei Emakumeen Ekintza taldea osatzeko deialdia egitea edo lehen mus txapelketa deitzea erabaki zuen batzar horrek.

Inaugurazio ofiziala 1942ko apirilean egin zen, eta gonbidatuen zerrendan nabarmentzen ziren Venezuelako Presidente Medina Angarita jenerala bera, euskal sustraiak zituzten Venezuelako hainbat intelektual, politikari eta agintari, eta potentzia aliatuen ordezkari diplomatikoak, hala nola AEB, Britainia Handia edo Frantzia Askekoak.

Baina Venezuelako euskal errefuxiatuen koloniaren egoera ekonomikoa nahiko prekarioa zen orduan, eta horrek erakusten du lokala egokitzeko lanak kideen borondatezko lanaren bidez egin behar izan zirela, edo bilketak egin behar izan zituztela altzariak erosteko. Inaugurazio egunean, gonbidatuei «cocktail» bat baino ez zitzaien eskaini, antolatzaileei gustatuko litzaiekeen oturuntza baten ordez.

1942ko maiatzean ekimenak ugarituz joan ziren, eta Euskal Etxeko lan-batzordeak eratu ziren. Horrela, argitara eman ziren Venezuelako Euskal Liga, Gizarte Laguntzakoa, Irakaskuntzakoa, Barnekoa, Diruzaintza, eta Propaganda eta Kultura taldeak. Egun horietan aldizkari baten edizioa proposatzen da, Euskaldunen Lagunen Liga bat sortzea ere bai, eta lehen aldiz euskara klaseetarako izen-ematea irekitzen da.

Jarduera ugariren ondorioz, lokala txiki geratu zen berehala eta, inauguratu eta bi hilabetera, Zuzendaritza Batzordea egoitza berri baten bila hasi zen. Irtenbidea emateko, Caracaseko erdiguneko Truko kalean zeuden lokal batzuk alokatzea lor-

tu zuen. Caracaseko Euskal Etxea sendotzeko garai hauetan, Amerikako beste euskal etxe batzuekin harremanetan hasten dira, batik bat Argentinan, Uruguain eta Mexikon daudenekin, haietan ere garrantzitsuak baitira euskal koloniak.

Euskal Etxeak bere jarduerak ugaritzen ditu lokal zabalagoetan, bai euskal kolonia babesteko, bai kultura eta aisialdirako. Batzar Nagusiak egiten ere jarraitzen du, eta hauetan Zuzendaritza Batzorde ezberdinak aukeratzen dira. Horietan ordezkatuta daude erbesteko euskal indar politiko nagusiak (EAJ, ANV eta PSOE), Izquierda Republicana eta PCE kanpoan utziz. Batzar horietako batean, euskal immigrazioa babestu eta naziek okupatutako lurraldeetako egonaldian Agirre Lehendakariari lagundu zioten Venezuelako diplomazialari batzuk ohorezko bazkide izendatzea erabaki zen. Beste batean, 1945eko maiatzaren 19an, Caracasko Euzko Ikastetxea sortzea erabaki zen, Euskal Herritik hain urrun bizi ziren euskal gazteei prestakuntza emateko asmoz. Hala ere, asmo handiko proiektu hau ez zen gauzatu 1965eko urrira arte. Orduan sortu zen Euskadi-Venezuela Ikastola, eta Euskal Etxeko gune gaitu batean 11 umeri eskolak euskaraz ematen zizkieten.

II. Mundu Gerraren amaierak mundu berri bat ekarri zuen oro har. Nazismoaren aurkako aliatuak izan zirenen artean bi bloke zeuden aurrez aurre, eta bien arteko borrokak planeta osoari eragingo dio. Venezuela ez da salbuespena izango. 1945eko urrian, estatu-kolpe batek Medina Angarita presidentea kargutik kendu zuen, eta Gobernu Batzorde Iraultzaile bat ezarri zen, Romulo Betancourt buru zuela. Bere lehen neurrietako bat izan zen Venezuelan zeuden funtzionario frankistak herrialdetik kanporatzea eta erbestean zegoen Gobernu errepublikar espainiarraren errekonozimendua. Ordutik aurrera Caracasen enbaxada eta kontsulatu orokor bat izango ditu erbestean den espainiar gobernu errepublikarrak.

Errekonozimendu horrek dakar Espainiako Errepublikaren Lagunen Batzordea sortzea, Venezuela osoan Espainiako eskualde-etxeak indartuko dituena. Euskal Etxean ere eragina izango du, abertzaleak ez diren bazkide gehienek utzi egiten baitute Espainiako Etxean izena emateko. Euskal errepublikano eta sozialisten kasua ere hori da, Euskal Etxearen Estatutuek kide izateko Euskal Herriaren autodeterminazio eskubidea aitortzea exijitzearekin inoiz ados egon ez zirenen kasua alegia.

Ezegonkortasun politiko handiko garaia da Venezuelan. 1947an, Romulo Betancourt Errepublikako lehendakari aukeratu zuten, eta Agirre lehendakariak zoriondu egin zuen gutun baten bidez. Alabaina, beste estatu-kolpe batek boteretik kentzen du Betancourt, eta Gobernu Batzorde berri bat ezartzen da, Espainia frankistarekiko harremanak berrabiarazteko. 1953an Batzordeak ez zituen errekonozitu Accion Democratica alderdiak irabazitako hauteskundeen emaitzak, eta Marcos Perez Jimenezen diktadura hasi zen. Gobernu hori 1958ra arte luzatzen da, eta oposizio osoaren aurka sortutako errepresioak eta bere kolaboratzaileen arteko ustelkeria orokortuak ezaugarritu zuten.

Giro politiko gaiztotuak ez zuen ondorio handirik izan Venezuelan kokatutako euskal koloniarengan eta diktadurak ez zuen eragin berezirik izan bere garapenan. Venezuelako ekonomiak oparotasun handia zuen; Estatuak enkargatutako obra handiak egiten ziren, eta erakunderen bateko kide izatea berme bat zen, bai negoziazioak hasteko edo garatzeko, bai herrialdearen barruan mugitzeko. Euskal Etxeko kide izatea ere abal politiko moduko bat zen diktadurako agintarien aurrean.

Venezuelako euskal koloniarentzat garapen ekonomikorako garaia da, erbesteko Eusko Jaurlaritzaren finantziazio-iturri nagusi bihurtzeraino. Venezuelatik iritsi ziren, esate baterako, Parisko

Singer kaleko egoitza berrira lekualdatzeko Eusko Jaurlaritzak behar zituen baliabide ekonomikoak.

Perez Jimenezen diktadurak inbertsio handiak egin zituen Venezuela osoan azpiegitura handiak eraikitzeko. Lan horietarako kontzesioak boteretik gertu zeuden enpresei enkargatzen zitzaizkien. Caracasen eta Venezuelako barnealdean egoitzen eraikuntzan modu erabakigarrian parte hartu zuten Euskal Etxeko kideek sortutako enpresa batzuek, etekin handiak lortuz.

1946an desadostasun ugari izan zen Euskal Etxeko Zuzendaritza Batzordearen eta Truco eta Balconcito kaleen artean zegoen eraikinaren jabearen artean. Azken haserrea, espazioa optimizatzeko hobekuntza-lan batzuei uko egitearen ingurukoa izan zen. 1947ko abenduan, eraikina saltzeko asmoa agertu zion haren jabeak Zuzendaritza Batzordeari, eta lehentasuna eman zion Euskal Etxeari 300.000 bolibarretan saltzeko. Baina Batzordeak gehiegizkotzat jo zuen prezio hori, eskaintzari uko eginez. Beraz, leku berri bat aurkitu behar zen, eta hainbat kide aukeratu ziren bilaketari ekiteko.

Bilaketan ari zen taldeak proposamen bat aurkeztu zion Zuzendaritza Batzordeari 1948ko ekainean. 10.000 metro koadroko lursailak ziren Caracaseko (El Paraiso) klase ertain altuko eremu batean, eta 300.000 bolibarreko kostua zuten. Lau egun geroago finantzaketa-plana aurkeztu zen: Euskalduna Higiezinen Konpainia sortu zen, 1.000.000 bolibarreko kapital soziala zuena, 500 bolibarreko akzio nominaletan banatuta. Proposamen hori onartu zen Batzar Nagusian uztailaren 3an.

Urriaren 14an Caracaseko Euskal Etxe berriaren lehen harria jartzeko ekitaldia egin zen. Lucas Castillo artzapezpikuak bedeinkatu zuen ekitaldia eta, Pizkunde abesbatzaren emanaldia-

ren ondoren, Jose de Elgezabalek, garai hartan Euskal Etxeko presidentea zenak, eta Luis Bilbaok, Eusko Jaurlaritzak Venezuelan zuen ordezkariak, hartu zuten hitza. Agirre Lehendakariaren agurra ere entzun zen horretarako bidalitako grabazio baten bidez.

Venezuelako prentsak eman zuen ekitaldiaren berri. La Esfera egunkariak honela zioen bere orrialdeetan: «Atzerriko kolonietako bakar batek ere ez du hartu euskaldunek orain hartzen duten moduko ekimenik». El Universalek, bestalde, honako hau zioen: «Gure artean jarduteko duen moduagatik —langilea, zintzoa eta erabat prestua—, gure giza jardueretarako ekarpen baliotsutzat hartu behar dugu Venezuelan euskaldun talde handi bat egotea».

1950ean nabarmen handitu zen Venezuelan euskal kolonia, Euskal Herritik edo Frantzian erbesteratua zeundenetatik kide berriak iritsi zirelako, baina baita haur euskal-venezuelar asko jaio zirelako ere. Perez Jimenez diktadorearen politika ekonomikoek hobekuntza nabarmena eragin zuten klase ertaineko sektoreen artean, eta euskal errefuxiatuen artean ere islatzen zen hori. Egoera horrek bultzatu zituen Amerikako Euskal Etxerik handiena eraikitzera, eta zerbitzu garrantzitsuak eskainiko ditu: frontoiak, taberna, jangela, bilera-gela, lorategiak, haurrentzako jolasguneak, terrazak, futbitorako pista eta igerilekuak. Euskal baserriak gogoraraziko zituen itxura emateko, Ramon Salvador arkitektoari eman zitzaion diseinuaren ardura, garai hartan Caracasen estilo horretako hainbat proiektu eta obra egiten ari baitzen.

Inaugurazio ofiziala 1950eko martxoaren 5ean egin zen, Aberri Egunean, ikurriña jartzearekin hasiz. Venezuelan bizi ziren 2.000 euskaldun baino gehiago bertaratu ziren ekitaldira, gertakari hura galdu nahi ez eta Venezuela barrutik joandako fami-

lia oso ugari tartean. Agirre Lehendakaria ere hantxe izan zen, 3 egun lehenago Caracasera iritsitako Jesus de Galindez Eusko Jaurlaritzaren New Yorkeko ordezkariarekin batera. Luis Bilbao Eusko Jaurlaritzak Venezuelan zuen ordezkariak eta Jose Elgezabal orduko Euskal Etxeko presidenteak egin zieten harrera Maiquetiako aireportuan.

Ospakizunek zortzi egun iraun zuten, ekitaldien egitarau oso batekin. Hitzaldi kulturalak eta politikoak izan ziren, horien artean Agirre Lehendakariak Euskal Herriaren historiari buruz egindakoa. Nikanor Zabaleta maisuaren euskal musika interpretatu zuen harparekin eta Pizkundea abesbatzarena bezalako ekitaldi kulturalak izan ziren; «Amaya» opera edo Zuberoako maskarada erreproduzitu zituzten dantzariak; kirol saioak izan ziren, gainera, pilotariek frontoi berriak inauguratu zituztenean.

Espainiak Venezuelan zuen enbaxadak ekitaldian parte hartzeko baldintzatzat jarri zuen Agirre Lehendakaria ez bertaratzea, Agirre gonbidatuz gero Espainiako Estatura bidaiatu nahi zuten euskaldunei bisak ukatzeko mehatxua eginez. Baina euskal koloniak ez zituen presio horiek onartu, eta Lehendakaria, garai hartan Venezuelan erbesteratuen erreferentzia nagusi zena, buru izan zen Euskal Etxearen inaugurazioan.

Ordurako Venezuelako geografia osora hedatua zen euskal kolonia, lana aurkitzeko beharragatik. Caracaseko Euskal Etxea erreferentzia gune nagusia bazen ere, berehala ikusi zen euskaldunak biltzeko beste gune batzuen beharra. Ekialdeko Puerto La Cruz hirian, adibidez, Anzoategi estatuan, etorkizuneko Euskal Etxearen lehen harria jarri zen 1959ko ekainaren 4an, eta bertan izan zen Agirre Lehendakaria. Inauguratu zen egunean, baina, 1960ko abenduaren 17an, ezin izan zen bertan, 1960ko martxoaren 22an hil baitzen Parisen. Ekitaldi horretara Jose Maria de Leizaola joan zen Lehendakari berri gisa.

Puerto la Cruzekoari El Tigreko Euskal Etxeak (Anzoategi estatuan) jarraituko dio, Maracaiboko Euzko Elkartasunak (Zulia estatuan) hurrengo, La Victoriako Euskal Etxeak (Aragua estatuan) gero eta Valentziako Euskal Etxeak (Carabobo estatuan) beranduago.

# VII

Lopez Arrimadas kapitaina umore txakurrez zebilen. Gero eta konbentzituago zegoen venezuelarrak bazekiela zerbait oso garrantzitsua, eta itaunketak jasateko gai den pertsona indartsua zela. Etsigarria zen oraindik ezer ezin atera izana. Egoera horregatik zeukan ondoeza jakinarazi zien bere zerbitzura zeuden agenteei, eta goizean komisariara iristean egin zuen lehenengo gauza atean guardian zeuden bi agenteei espediente bana irekitzea izan zen, erlaxatuta eta erretzen aurkitu zituztelako. Normalean, gau osoa hor egiten zuten poliziei onartzen zitzaizkien normalean debekatuta zeuden abantaila batzuk, hala nola kaferen bat hartzea edo noizean behin zigarro bat erretzea, eta ofizialek utzi egiten zieten.

Goiz hartan, baina, Lopez Arrimadas ez zegoen umorez inorentzat, eta despistatuta aurkitu zituenean sarjentuari deitu eta diziplina-espediente bana irekitzeko agindua eman zion. Gero Rodriguezi deitu zion eta, bere postuan aurkitu ez eta gosaltzeko zerbait erostera atera zela esan ziotenez, bere buruari zin egin zion zigortu egingo zuela hura ere. Bere bulegoan eserita zegoela, lasaitzen saiatu eta damutu egin zen. Berriro deitu zion sarjentuari, bere azken agindua ahaztu eta atean guardian zeuden bi polizien txanda har zezala agintzeko. Eta Rodriguez agertu bezain laster bidaltzeko beregana. Kontua ez zen agindupean zeuzkan agenteen artean etsaitasunak piztea, are gutxiago bere nagusiengandik etorriko balira bidegabetzat joko lituzkeen agindekin. Beti pentsatu izan zuen ofizialek agintari onak izanez eta diziplina ezarriz irabazten zutela agenteen begirunea, eta ez zentzugabeko aginduak emanez. Poliziak bere ofizialari betebeharragatik obeditzen baitio, baina baita beldurragatik eta errespetuagatik ere. Hori pentsatzen zuen.

Eginbeharra Poliziako kide izateak berak ematen du, menderakuntza eta diziplina arau gorentzat hartuta. Baina beldurrarena ofizialak irabazi egiten du, egoera zailetan potroak botaz kargurako baliozkoa dela frogatzen denean; errespetua, berriz, Poliziari mesede egingo dioten eta agenteen artean bizitza salbatuko duten erabaki egokiak hartuz.

Emakume venezuelarraren kontuak ez zion lo egiten utzi. Etxera iritsi eta afaldu ondoren, brandy botilaren aurrean eseri zen gaia hausnartzera, bere burua madarikatuz galdeketetan ezin izan zuelako ezer aurreratu. Komisariatik kanpo egindako ikerketek ere ez zuten asko lagundu. Emakume gazteak ostatu hartzen zuen hotelera ez zen inoiz inor joan neska ikustera. Lau egunetan beti bakarrik ikusi zuten; goizean goiz irteten hondartzan paseatzera, abuztuaren amaieran oraindik gozatzen zuen udako eguraldi ona aprobetxatuz. Eguerdi aldera itzultzen zen, arropaz aldatu eta atzera kaleratzeko. Alde Zaharreko jatetxeren batera joaten zen bazkaltzera, segidan hotelera itzuli eta siesta labur bat egiteko. Ondoren berriro ateratzen zen Euskal Jaiak ospatzen ziren egunetan kultura edo musikako saioren batera. Neskak berak uko egin zien dendari eta hoteleko bezero ohi batek arratsalde batean elkarrekin afaltzeko luzatu zizkion gonbidapenei.

Itxuraz emakume bakartia zen; ez zuen lagunik bilatzen eta hirian paseatzera mugatzen zen. Halaber, oheratu aurretik Venezuelatik dei bat jasotzen zuen gauero, ustez bere amarengandik, eta hogei minutu inguru ematen zituen harekin hizketan. Beraz, garbitzaileek entzun ahal izan zuten ama-alabaren arteko gai normalei buruz aritzen zirela. Neska Espainiara nola iritsi ote zen ere ikertu zuen, eta bazekien Venezuelako Avensa konpainiaren Boeing 727/100 hegazkinean egin zuela bidaia, Caracasetik hegaldi zuzen batean, inolako eskalarik gabe. Madrilera

abuztuaren 27ko 9:30ean iritsi zen, eta konpainia berarekin Caracasera itzultzeko txartela irailaren 5erako zuen. Espainian bi astez geratzeko asmoa zuen beraz. Barajasko aireportuan taxi bat hartu eta tren geltokira eraman zuen.Talgoren txartel bat erosi zuen han, eta txartel horrekin iritsi zen Donostiara. Hotelaren erreserba Caracasetik egina zuen, berak egindako telefono-dei baten bidez, bidaiaren antolaketan beste inoren berririk izan gabe. Iristean, lehen bi gauak pezetatan ordaindu zituen, eta gero goizero ordaintzen zuen egun bakoitzari zegokion tarifa. Hoteleko harreran noiz arte geratzeko asmoa zuen galdetu bazioten ere, ez zuten inoiz erantzun zehatzik jaso, eta, beraz, egonaldiak mugagabea zirudien.

Lopez Arrimadasek uste zuen Donostia, hondartzak eta gastronomia ezagutu nahi dituen turista arrunt baten bidaia normal bat iradokitzen zuela horrek denak. Euskal gaizkileek Espainiaren aurkako gorroto guztia beren kultur ekitaldiekin eta jaiekin disimulatuz ateratzeko aprobetxatzen dutenean. Hain zuzen halako normaltasunak ematen zion poliziari susmo handiena. Nork jakin zezakeen dei horiek amarenak zirela eta ez Venezuelako konplizeenak?

Normala zen haien komunikazioak ohizkotzat eta errutinazkotzat jotzen den zerbaitekin ezkutatu behar izatea. Gauza bera gertatzen zen hirian zehar ibiltzeari zegokionean, mila kasutan izaten baitziren harremanetan komunikazio zuhurrak, are gehiago jai-zalapartak despistea eragiten zuen egun batzuetan. Zergatik ez pentsatu dirua ekarri bazuen ez zuela nonbait ezkutatu eta bere konplizeei emateko aukera egokiaren bila zebilela? Ez al zion ba esan Sanchez lankideak Eusko Jaurlaritza eta erbesteko Errepublikatik geratzen zena finantzatzen ari zirela Venezuelatik? Ziur zegoen arazoa hortik zihoala. Neskak ez zirudien ekintzarako militantea, baina edozein lekutatik diskre-

zioz igarotzen den mezulari bat izan zitekeen. Hortik jarraitu behar zuen ikertzen eta, zerbait izatekotan, berak aurkituko zuen nola edo hala.

Hoteleko gela miatu zuenean ez zuen ezer susmagarririk aurkitu. Arropak eta zapatak, bainujantzi batzuk eta hondartzako toaila handi bat besterik ez. Komunean zegoen nezeser batean, garbiketa pertsonaleko tresnak, eta armairuaren izkina batean emakume baten poltsa bat, non hegazkin-txartela, piladun irrati txiki bat, pasaportea, Venezuelako beste nortasun-agiri batzuk eta agenda bat aurkitu zituen. Agendan eskuz idatzita zeuzkan hainbat izen, bakoitzaren telefonoekin, eta helbide batzuk. Datu horiek ikertu ondoren, gehienak Caracasekoak zirela egiaztatu zuen, eta beste batzuk, gutxienak, berak inoiz entzun ez zituen Puerto La Cruz, Maracay edo Barquisimeto bezalako hirietakoak. Ia denak euskal abizenak ziren, telefono zenbaki bat ere bazegoen, gerora jakin ahal izan zuenez Caracaseko Euskal Etxeari zegokiona, eta dantza, kantu eta euskal ikastaroetakoak ziruditen hainbat ordutegi. Halaber, 25.000 pezeta aurkitu zituen billeteetan, eta kopuru hori, errespetagarria izan arren, neskak Donostian egoteko asmoa zuen egunetako ostatu eta mantenu-gastuei aurre egiteko erabiltzen zuela zirudien. Bazekien hoteleko gelak eguneko 125 pezeta balio zuela, eta horri 200 pezeta gehiago gehitu behar zitzaizkion, jatetxe gastuengatik eta egunean zehar zituen gutiziengatik. Nahikoa zen egonaldiko gastu guztiak ordaintzeko, eta oraindik soberan zeukanak pentsarazten zion emakume aurreikuslea zela eta beste apur bat gehiago zeukala aurre egin beharreko edozein larrialditarako. Estreinatu gabeko txeketegia bat zegoen, gainera, Banco de Venezuela etxekoa, atxilotuaren izenean, eta Caracaseko Ciudad Mariana Ikastetxean lehen hezkuntzako maistra gisa identifikatzen zuen egiaztagiri bat barruan, honako helbidearekin: Avenida los Pinos, El Paraiso, Caracas. Dena

zen normalegia polizia batek susmorik ez izateko, eta poltsa bere edukiarekin eramatea erabaki zuen lasaiago aztertzeko, forruan ezkutatuta zerbait balego ere, nahiz eta begirada batera ez zirudien ezer zegoenik.

Bazekien ez zuela denbora askorik zerbait garbia ateratzeko. Brigada Politiko Sozialak salatari bati esker oso aurreratuak zituen Donostiako banderak erretzearen arduradunei buruzko ikerketak. Parte-hartzaileetako batek ihes egiteko erabili zuen motorraren matrikula idazteko aukera izan zuen salatari horrek, eta denbora galdu gabe eman zion informazioa BPSeko bere ezagun bati. Motorraren jabea bere etxean atxilotu zuten, eta Felix Arrieta zuen izena. Josteko makinen fabrika batean lan egiten zuen Eibarko mekanikaria zen. BPSekoek beren estiloko galdeketak egin zizkiotenean Eibarko beste bizilagun batzuk salatu zituen, eta berehala atxilotu zituzten haiek ere. BPSekoek oposizioaren edozein sare desegiteko aurreratuenak izaten jarraitzen zuten, itxura guztien arabera, eta Lopez Arrimadasek bazekien denbora gutxi zuela venezuelarraren auziarekin bere karrerari probetxuren bat ateratzeko. Egun gutxiren ostean ezin izango zuen saihestu sekretuen ikerketarik, eta azkar ibili behar zuen istorio hartatik etekin pertsonal eta profesionalik atera nahi bazuen. Bazekien, halaber, askotan izan zelako horren lekuko, BPSeko kideek ez zutela atzera egiten atxilotuak galdekatzeko orduan, haien metodoa eraginkorra bezain gogorra zela. Bazekiten zigorgabetasun osoa zutela zorigaiztoko amaiera baten kasuan, eta ez zitzaiela axola beren eskuetan erortzen zirenak azken muturreraino txikitzea. Oinazea azkar eragiteak definitzen zuen azken emaitza, hau da, konplizeei ihes egiteko edo konfiskatu beharreko elementuak leku batetik bestera mugitzeko denborarik ez emateak. Idatzi gabeko legea zen, BPSak trebetasunez aplikatzen zuena, eta Jakako garaietatik funtzionamenduan ikusi zuen. Era berean, uste zuen

edonork ez zuela balio BPSekoen lana egiteko, urdail sendoa eduki behar zen.

Bera ere mila froga gogorretan ondutako gizona zela uste zuen, baina ikaratu egiten zen oraindik BPSekoak gogoratzean. Makiko atxilotuei azazkalak eta hortzak alikate batez erauzten zizkieten, hil arteko jipoi amaigabeak eman, drogak injektatu borondatea galdu eta hitz egin zezaten. Oinazeak jasan ez zituztenen hilotzak zatikatzen zituzten, gero haien gorputz-adarrak toki desberdinetan lurperatuz senideek sekula aurkitu ez zitzaten. Ez zuten egiten etorkizunean izan zitezkeen lege-ikerketetatik babesteko ere, sadismoz baizik, halaxe gozatzen ari zirela baitzirudien, eta gozatzen zuten zigorgabetasuna bermatuta zegoelako Estatuko hierarkia gorenetatik. Ez zuen uste Rodriguez, bere morroia, horrelako astakeriak egiteko gauza zenik ere. Gizon gogorra eta sexu-lizuna izan arren, ikaratzen eta izerditan ikusia zuen galdeketaren batean BPSekoei lagundu behar izan zienean.

Halakoetan bere lana amaitzen zuenean, mozkortu egiten zen Rodriguez, hila bezala erori arte mozkortu. Bere buruari barkatzeko modua zela ematen zuen, gertatutakoa gertatu ondoren. Lana nola egin zuen galdetzen zionean, bere herritarrak beti gauza bera erantzuten zion: «Jende hori Hitlerren alemanekin hezi zen, eta horrela atera dira. Gu piztiak izango gara, aberriak hala eskatzen digulako, baina jende horrek ez du mundu honetakoa ematen, hil arte torturatzen dituzte, txikitu egiten dituzte eta gero deitzen gaituzte uzten dutena lurperatu dezagun, eta askotan ezer gutxi da uzten duten hori».

Bai, hala zen, oso gutxi uzten zuten, baina ez atxilotuarena bakarrik. Beren menpekoentzat ere ez zuten ezer uzten, hala nola polizia armatuentzat, BPSeko ikuskatzaile eta komisarioen zerbitzura zeuden grisentzat.

Lopez Arrimadasek bazekien esku artean zuen kasuan emaitzaren bat lortu behar zuela. Eta ikerketek fruiturik ematen ez bazuten, atxilotuari informazio motaren bat atera behar zion, bere nagusiei jakinarazteko eta, horrela, kasua berriro BPSaren esku ez gelditzeko. Gehienez ere bi egun izango zituen, hala kalkulatzen zuen behintzat. Banderak erre zituztenak eskuetan zeuzkatenez, gudari ohien trena errailetik ateratzen saiatu zirenengana iritsi nahiko zuten. Kalkulatzen zuen bi egun beharko zituztela horretarako, agian hiru, baldin eta atxiloturen bat gai bazen gainera zetorkionari beste ordu batzuetan eusteko. Baina hori ez zen inoiz gertatzen. Gizon izugarri bat izan behar zen BPSa zinez saiatzen zenean jakina zena isiltzeko. Beharrezkoa zen venezuelarrarekin beste modu batean egitea, nahastu nahian, esanez beste batzuek leporatu ziotela diruaren banaketaren arduraduna izatea. Billete batzuk ere erakuts ziezazkiokeen, aurkitu zituztela esanez, horrela bere egoskorkeria hautsi eta zentzatu zedin. Rodriguezekin hitz egin beharko zuen aurretik, astakirten horrek hanka sartu eta estrategia zapuztuko ez bazen.

Ziur zegoen gau osoan fokua aurpegira begira piztuta zuela eta katetik zintzilik egon ondoren, bi egunez jan eta edan gabe eta lo egiten utzi gabe, lur jota eta laguntzeko prestuago egongo zela neska. Etxera joan baino lehen, sarjentu zaindariari agindu zion une oro jo zezala atxilotua zegoen gelako atea, loak har ez zezan. Agindua zorrotza izan zen: «Ez utzi lo egiten edo atseden hartzen, baina ez utzi inori neska ukitzen». Ez zuen nahi bera eta Rodriguezez gain beste inork inolako informaziorik erabiltzerik afera hartan. Uste zuen atxilotuak prest egon behar zuela laguntzeko; kontua zen lehenik aurpegi atsegina erakustea, ea horrela bere borondatez egiten zuen. Rodriguez iristea besterik ez zen falta, insomniozko gauean asmatutako planak praktikan jartzeko.

## VIII

Orain badakit lo faltagatik eta goseagatik errenditu nahi nautela. Oraindik ere konturatzen naiz gezurrekin nahastu nahi nautela. Ez dakidan zerbait nik esatea nahi dute, eta edozertarako prest daude, baita niri bizia kentzeko ere, ezin dute gehiago ezkutatu.

Nire besoak ez dira nireak, bi gorputz-adar besterik ez, beren pisuagatik erortzen direnak eta kontrolatu ezin ditudanak. Kateari lotuta ordu asko egon ondoren, neure pixaz bustitako zoru hotz honetan nago orain, ez baititut neure eginkariak ere kontrolatzen. Altxatu egin nahi nuke, zutitu; baina, nire hankek, obeditzera behartzen saiatzen naizenean, ez didate erantzuten. Neure gorputzarekiko borondatea kendu izan balidate bezala da. Adimena baino ez zait geratzen. Hori da, antza, oraindik erantzuten didan gauza bakarra, nahiz eta gero eta maizago izutu eta urrundu ere egin nahi izaten duen nire baitatik. Nahiago nuke etxekoak, ni hotelean ez egoteagatik arduratuak balira jada eta kontsul-agintariekin nire aztarnen berri jakiteko mugitzen hasiak balira. Hori da, beharbada, oinaze hau amaitzeko dudan itxaropen bakarra. Zergatik ez dago hemen entzun nahi didan inor, zergatik leporatu nahi didate arrotz zaidan zerbait?

Katetik jaitsi nindutenean, beste bulegotik ekarritako aulki batean esertzeko baimena eman zidaten. Manta lakar bat bota zidaten gainera biluztasuna estaltzeko eta baita kafe bat eskaini ere, baldin eta behingoz haiekin kolaboratzen hasten banintzen. Gizonezko berberak dira beti, biak; ahotsaren doinuagatik ofiziala dirudiena bata, eta hainbeste beldurtzen nauen eroaren begirada endekatua duena bestea. Kafea eskaini bai, baina ez zidaten inoiz ekarri, ezta ur pixka bat ere. Berehala hasi ziren berriro galdera berberak egiten, behin eta berriz. Hasieran

lasai egiten zuten, nahi zutena esaten banien nire sufrimendua berehala amaituko zela konbentzitzen saiatuz bezala.

Hotelean izan dira eta nire gauzak jaso dituzte. Caracaseko ikastetxeko nire irakasle txartela erakutsi didatelako dakit. Galdetzen zidaten ea ez ote nuen laster nire herrira itzuli nahi umeei erakusten jarraitzeko. Txisteak ere egiten zituzten, nik Espainia zer den irakats niezaiekeela esanez; espainiarrek konkistatu gintuztela latinoamerikarrak eta ez ingelesek, haiek esklabo bihurtuko gintuztela. Espainiari hizkuntza eta erlijio katolikoa emateagatik eskerrak eman behar genizkiela zioten. Beraiek Ameriketara iritsi izan ez balira, oraindik gerripeko eta zakil-zorroz jantzita eta harriak gurtuz ibiliko ginatekeela, elkar janaz. Gero zioten bazekitela ni ez nintzela indiarra edo beltza, bazekitela nire gurasoak euskaldunak zirela, gerran beraien aurka borrokatu zirela eta galdu zutenez Venezuelara ihes egin zutela traidore gisa. Baina seme-alabek ez dituztela gurasoen akatsak ordaindu behar, eta nik laguntzen banien ez zela beste ezer gertatuko. Baina nik ez daukat nahi dutenaz esateko ezer; ez dakit ezer diruaz, ezta Caracasen Espainiaren aurka konspiratzen ari direla dioten jendeez ere. Izen batzuk ere eman dizkidate, batzuk ezagunak nituen Caracaseko Euskal Etxeko kideen abizenak direlako, baina ez dakit ezer haiek nire herrian egiten dutenaz. Inoiz eskolan haurrei aparteko jarduera bat emateko lagundu didan dantza irakaslea bezala. Baina bere bizitza pribatuaz ideiarik ez dut, Venezuelako euskal komunitatearen artean gure kultura eta hizkuntza gal ez daitezen saiatzen dela, hori da dakidan gauza bakarra.

Ulertarazten saiatzen banaiz ere, badirudi ez didatela entzuten. Edo ez didatela entzun nahi. Berehala ernegatzen baitira, eta berriz ere bortitz jartzen. Nire gauzen artean omen zeuden billete batzuk erakutsi dizkidate, eta norbaiti emateko ekarri dudan diruaren zati bat dela diote, baina horiek dira nire opo-

rren gastuei aurre egiteko ekarri ditudan aurrezkiak. Hori esan diodanean, esku zabalarekin aurpegian zaplada emanez erantzun didate, eta horrek ekarri du haien manera onak bukatzea; infernura itzuli naute hortik aurrera. Aulkia eta manta kendu dizkidate eta kokoriko egotera behartu. Oreka galduta lurrera erortzen banintzen, bortizki altxatzen ninduten eta bizkarrean jotzen ninduten gomaz forratutako makila batekin. Hasieran kolpea besterik ez nuen sentitzen, baina gero erremina oso latza zen. Berriro kukubilko jartzen ninduten hala ere. Eta behin eta berriz errepikatzen zen dena; erori egiten nintzen, jo egiten ninduten, altxatu egiten ninduten, eta ez nintzen gauza luzaroan irauteko posizio berdinean. Askotan errepikatu zen hori, itxuraz nekatuta lurrean utzi ninduten arte. Bulegora joan ziren eta bakarrik geratu nintzen, negarrez eta minduta. Beldur nintzen berriro itzuliko ote ziren. Beste zerbaitetan pentsatzera behartu nahi nuke nire burua, nolabait denbora irabazi. Noizbait norbaitek lagundu beharko dit hemendik irteten.

Eta itzuli egin ziren, nik nahi baino lehenago. Benda bat jarri zidaten begiak estaliz. Nire gezurrez nekatuta zeudela esaten zuten, ez zutela engainurik onartuko, haien aurpegiak ondo gogoratuko nituela, hori baitzen nire bizitzan ikusiko nuen azkena, aurrerantzean izango nuen gauza bakarra iluntasuna eta sufrimendua izango zela. Eskuak lotu zizkidaten berriro, eskuburdinak bizkarrean. Haien burdina hotsa entzun nuen ixtean; hain gogor egin zuten, ezen minez oihu egin bainuen. Zutiarazi eta pareta baten aurrean jarri naute; ezer ikusten ez dudan arren ondo dakit horrela dela, kopeta kolpatu dudalako eta konortea galtzeko zorian egon naizelako momentu horretan. Bietako batek eutsi dit erori ez nadin. Hori egin duenak berriz ere nire titiak ukitzeko aprobetxatu du; lizuna dirudiena izan behar zuen. Gero sentitu nuen ur hotz-hotza botatzen zidatela buru gainera eta erabat bustitzen nintzela. Soin osoa dardar-

ka neukan eta negar egin nuen berriro, mesedez hil nazatela eskatzen nien bitartean. Hortxe bertan hil nahi nuen. Ur asko bota zidaten burura, eta oinak labaintzen zitzaizkidan zoruan egin den putzuan. Berriro jo nuen hormaren kontra, aurpegiarekin. Ofizialaren ahotsak kontuz ibiltzeko eskatu zion besteari, momentuz osorik gorde behar ninduela. Orduan utzi zioten bustitzeari. Hotzez dardarka nengoen.

Galderak itzuli ziren, eta mehatxuak. Berriro sentitu nituen gomaz forratutako makilaren kolpeak eta, lurrera erortzear nintzenean, heldu eta jarrera berean egotera behartu ninduten. Irainka ari zitzaizkidan: «hegoamerikar madarikatua, emagaldu separatista, urdanga nazkagarria...». Kolpeak jarraitzen zuten, bizkarrean ez ezik lepoan, hanketan, bularretan, buruan ere bai... Erortzear nintzela sentitu nuen eta oihu egin nuen, gero eta ozenago. Ez dut ulertzen nondik atera nuen horretarako indarra. Kolpe gehiagorekin erantzun zidaten, galdera gehiagorekin, mehatxu gehiagorekin; lurrera bota ninduten eta hantxe utzi, ur-putzuaren erdian. Berriro joan ziren; ofizialari entzun nion besteari esaten gogorragoak izan beharko zutela, ez nintzela kolaboratzen ari eta denbora bazihoala. Denbora badoa, nahiz eta niretzat geldialdia dirudien. Baina noren alde doa denbora? Zenbat gehiago iraun behar du honek?

Itzuli zirenean berriro hasi zitzaizkidan irainka, kolpatzen ninduten bitartean. Lurrean jarraitzen nuen eta kuzkurtzen saiatu nintzen neure burua babesteko; ez nekien nondik zetozen haien erasoak, begiak estalita eta eskuak bizkarrean eskuburdinekin lotuta nituela jarraitzen bainuen. Nire gorputz biluzia ikaratu egiten zen bi gizon haiek beren oinekin eta gomazko borrekin jotzen nindutenean. Bazirudien jada ez zirela kontrolatzen eta bukaera izango zela. Gero haietako batek iletik heldu eta altxatzera behartu ninduen. Sentitzen nuen minarekin eta zoru busti harekin, zaila izan zen hori egitea. Gero eskuak aska-

tu eta benda kendu zidaten begietatik. Ez nintzen haiei aurpegira begiratzera ausartzen, beldur bainintzen hala eginez gero berriro jipoituko nindutela.

Ikusi nuen ofizialak tapaki lehor bat zabaltzen zuela lurrean. Besteak, berriz, barre egiten zuen, izua eragin zidan modu batean. Zer egingo zuten orain? Zoruko tapakiaren gainean lau hankatan jartzera behartu ninduten; endekatuak behin baino gehiagotan jo zizkidan ipurmasailak bere esku irekiekin, eta barre egiten zion nire gorputzari. Itsusia dela esaten zuen, inork ez zuela inoiz desiratuko, eta are gutxiago haren eskuetatik igaro ondoren, hain itxuragabe geratuko zela, munstro baten itxura hartuko baitzuen, eta ez nuela inoiz seme-alabarik izango.

Nire negarrarekin eta sortzen zidaten beldurrarekin bakarrik erantzun niezaiekeen; ezin nuen hitzik esan, ezta nitaz erruki zitezen erregutu ere. Ofizialak bere uniformearen poltsiko batetik pote bat atera eta ireki egin zuen. Baselina usaina sudurreraino iritsi zitzaidan, eta berehala sentitu nuen baginan, uzkian, igurzten zidala. Gero barre egin zuten, ordura arte egin ez zuten moduan. Baginan makila bat izan zitekeen objektu bat sartu zidatela sentitu nuen; ez zuten asko sartu, baina nire gorputzak ixteko erreakzioa egin zuen eta erantzun horren azkartasunak sentiarazi zidan nire erraietan zerbait urratzen ari zitzaidala. Berriro egin nuen oihu, lotsaz eta beldurrez; erregutu nahi nien ez nintzatela bortxatu. Baina haiek iraindu egiten ninduten barre artean; zertarako disimulatzen nuen esaten zuten, hori gustatzen zitzaidala.

Nire baginatik objektua atera zuten eta berehala uzkitik sartu zidaten; berriro garrasika hasi nintzen eta kolpeak heldu ziren berriro. Belaunak makurtu zitzaizkidan eta albora erori nintzen. Haserretu egin ziren orduan eta sabelean eta bularrean jo ninduten forratutako borrarekin. Artean objektua uzkian sartuta

neukan, eta eroak barrurago bultzatu zuen; garrasi egin nuen nire oinaze-indar guztiez. Orduan ofizialak agindu zion erretiratzeko. Astiro egin zuen, nire sufrimenduarekin gozatuz bezala. Neure burua babesten saiatu nintzen, neure buruaren gainean kuzkurtuz, bi gizon haien begien aurrean manta gainean hartuz.

Orduan ofizialak tu egin eta irain artean ohartarazi zidan pentsa nezala, pazientzia agortzen ari zitzaiola eta, dirua non zegoen eta nori eta non eman behar nion esaten ez banion, nire egunak zenbatuta zeudela. Berriro egin zidaten mehatxu ibai batera eraman eta bertan ito eta lurperatuko ninduela. Ni lurrean uzteko agindu zion nagusiak besteari, baina lehenik kentzeko lurrean jarritako manta. Hura joan zenean, argi biziaren fokua berriro piztu ondoren, ero begirada zeukanak hain gogor tiratu zion mantari, non lurrean jirarazi baininduen, eta berriro erori nintzen urez bustitako eremura. Une batez begiratu zidan; ni eskuez aurpegia babesten saiatzen ari nintzen arren ikusi nuen brageta irekitzen eta zakila ateratzen ari zela. Haren pixa sentitu nuen gorputza bustitzen, barreak eta irainak entzuten nituen bitartean. Amaitu zuenean, bere baitara jiratu eta ofizialaren bide beretik desagertu zen. Nazka, mina, oinazea, umiliazioa eta beldurraren gainetik, ixten ari zen ate baten kisketa entzun nuen.

# IX

1948-1958. Venezuela.

1948an, Junta Zibiko-militar batek estatu-kolpea eman zion Isaias Medina Angarita jeneralari, eta Romulo Gallegos jarri zen gobernuburu. Handik gutxira, Goi Aginte Militarrak Gallegos agintetik bota eta beren kide bat, Marcos Perez Jimenez, jarri zuen estatuburu.

1952an Perez Jimenezek irabazi zituen oposizio osoak iruzurtzat salatzen zituen hauteskundeak. Oposizioak uste baitzuen Venezuelako Konstituzioaren aurkakoak zirela hauteskunde horiek, konstituzioak esaten baitzuen presidentea hautatzeko hainbat hautagairen eskumena behar zela, eta zuzeneko hautaketa. Ez zen hori gertatu; plebiszitu bat izan zen, eta hautagai bakarra Perez Jimenez bera zen. Diktadoreak plebiszitua irabazi zuen, beraz, eta Venezuelako presidente karguan jarraitu zuen 1958ra arte.

Bere gobernuaren ezaugarria izan zen oposizio osoaren eta herri-mugimendu guztien aurkako errepresioa, unibertsitate-mugimenduaren aurkakoa batik bat. Baina baita Estatuak herrialdea modernizatzeko azpiegiturak sortzeko inbertsio handia egin izana ere. Aldi berean, Perez Jimenezek inbertsio handiak egin zituen Armadaren modernizazioan, eta segurtasun nazionala lortu zuen, kasta militarra bere alde mantentzeko eta, horrela, biztanleriaren kontrola lortzeko neurri eta praktika errepresiboen bidez. Autoritarismo hori onartutako legeetan geratu zen islatuta, hala nola, Alfer eta Gaizkileen Lege polemikoan, berdin balio baitzuen arloteak edo homosexualak edo ezkerreko militanteak espetxeratzeko.

Perez Jimenezen diktaduraren izaera zapaltzaileak bere erregimenaren aurka zegoen orori eragin zion. Errepresio horrek Venezuelako espektro politiko osoa hartu zuen, hasi demokrata-kristauetatik eta sozialdemokrata eta komunistetaraino. Bere gobernuaren aurka zegoen eta mehatxutzat hartzen zen oro atxilotu, torturatu, espetxeratu eta Guasina bezalako kartzeletan derrigorrezko lanak egitera behartu zezakeen. Guasina Orinoko Deltako leku osasungaitz batean zegoen. Presoak metodikoki suntsitzen ziren han, bai fisikoki, bai psikologikoki, eta Venezuelako historiara igaro da Perez Jimenezen garaiko basakeriaren sinbolo gisa.

Era berean, ez zegoen adierazpen askatasunik; komunikabideetatik bakar bat ere ez zen ausartzen erregimenaren estropezuak edo giza eskubideen urraketak salatzera. Erregimenak ezarritako mugak gainditzen bazituen komunikatzaileren batek, haren patua heriotza izan zitekeen, edo atxiloketa, tortura eta kartzela.

Errepresioa Segurtasun Nazionalak zuzentzen zuen, Perez Jimenezen lagun min zen Pedro Estrada poliziak. Honek zorrotz eta gogor bete zituen diktadoreak oposizio politiko osoaren aurka emandako aginduak.

Errepresio hori bereziki gogorra izan zen Alderdi Komunistaren aurka; Pedro Estradaren eta bere agenteen basakeria jasan zuten militante komunistek. Hala ere, justifikatu egin zuen Perez Jimenezek alderdi horren aurkako errepresioa, ez bere idealengatik edo helburuengatik, atzerriko potentzia baten menpe egoteagatik baizik.

Ideologikoki eskuineko nazionalista erradikala zen Perez Jimenez. Bere ideiak «Ondasun Nazionalaren Doktrina»n oinarritzen ziren, eta ingurune fisikoa eraldatzea eta venezuelarren

baldintza moral, intelektual eta materialak hobetzea bilatzen zuen. Venezuelaren garapena lortzeko, immigrazio-politika bat bultzatu zuen Perez Jimenezek, europarren etorrera sustatuz, Italia eta Portugalkoena, eta Espainiakoena batez ere, eta honek euskaldunen immigrazioa ere bultzatu zuen.

Garai honetako politika ekonomikoa aro desarrollistan kokatzen da, eta Latinoamerikako herrialde gehienetan hedatzen zen orduan. Bere helburu nagusia, Venezuela lehen munduko herrialde gisa garatzea zen, petrolio esportazioak ekarritako diru-sarrerei esker (Venezuelako ekonomiaren oinarri historikoa).

Ekarpen nagusia Estatuak egin bazuen ere, Perez Jimenezek ez zuen baztertu enpresa pribatua Venezuelako modernizazio-prozesuan. Enpresa pribatuek aktiboki parte hartu zuten azpiegitura-lanetan, gobernuko funtzionarioekin negoziatzen ziren kontzesioei esker, eta asko ustelkeria-sareen bidez aberastu ziren, komisio-sistemarekin. Ustelkeria izan zen, bada, erregimen diktatorialaren beste ezaugarrietako bat. Euskal koloniako kideak sortu zituzten eraikuntza-enpresa askok ere etekina atera zioten sistema horri, eta jabeak aberastu egin ziren orduan, Perez Jimenezen erregimenaren politika garatzaileak baliatuz.

Etxebizitza-politika ere garrantzitsua izan zen Perez Jimenezen garaian. Klase herrikoientzat "etxolak" ordezteko plan bat egin eta praktikan jarri zen. Horri esker, urbanizazio osoak eraiki ziren, hala nola Caracaseko "23 de Enero" bezalakoak. Komunikazio eta garraio bideak ere, errepideak batik bat, lehentasuna izan ziren Estatuaren inbertsioetan. Ez zen polemikarik falta izan hala ere, erregimenak milaka preso behartu baitzituen lan horiek egitera. Osasun sektorean ere inbertsio handiak egin

ziren, eta nabarmentzekoak dira Caracaseko Unibertsitate Ospitalea eta Carabobo estatuan dagoen Dr. Angel Larralde Ospitalea.

Venezuela munduko lehen petrolio ekoizlea izan zen garai hartan, eta burdina eta urrearen ekoizpenean bost garrantzitsuenetako bat. Perez Jimenezen garaia politika garatzailearen eredua izan zen, eta moneta nazionalak, bolibarrak, dolar estatubatuarrarekin parekotasuna izatea ere lortu zuen. Baina, aldi berean, oparotasun ekonomiko horrek, batik bat aberatsenei mesede egin zien beti bezala, gehiengoak baztertuz, eta Venezuelan nagusi zen askatasun publikoen faltarekin alderatzen zen arlo politikoan.

1958ko urtarrilean gobernuaren aurkako altxamendu militar berri bat gertatu zen. Handik egun gutxira, oposizio osoa biltzen zuen Batzar Patriotikoak greba orokorrerako deialdia egin zuen, eta Venezuelako gizartearen zati handi batek erantzun zuen. Sektore askok, ikasleek, intelektualek, ingeniariek, medikuek, langileek eta irakasleek bat egin zuen grebarekin, eta Perez Jimenezen gobernua inguratuta eta babes sozialik gabe sentitu zen. Orduan herrialdetik ihes egin zuen Perez Jimenezek eta Francoren Espainian babes hartu zuen.

Hura boteretik kenduta, AD, Copei eta URD alderdi politikoek Punto Fijoko Ituna sinatu zuten 1958ko urriaren 31n. Akordio horren ondorioz, Venezuelan ordezkaritza-sistema politiko bat ezarri zen, eta hurrengo lau hamarkada baino gehiagoan boterean txandakatuko ziren bi indar nagusiak, AD eta Copei. Punto Fijoko Itunean Alderdi Komunista baztertu zen, Perez Jimenezen diktadurari oposizio handiena egin eta haren errepresioa gehien jasan zuena izan arren.

Komunistak baztertzeko nazioarteko egoeraren arrazoietan justifikatu ziren orduan. AEBen eta SESBren arteko gerra hotza garapen betean zegoen, eta PCri leporatzen zitzaion bere homologo sobietarraren mendekoa izatea. Baina komunistak baztertzeko presio handiena egin zutenak Eliza katolikoaren hierarkia (oso kontserbadorea) eta Copei alderdia (erakunde erlijioso horri oso lotua) izan ziren. Copeik, kristau ideologia demokratako alderdiak, EAJrekin harreman historikoak izango zituen ordutik.

PCren marjinazioak, bere militanteen eta ezkerreko beste sektore batzuen aurkako errepresioa ez zen eten Punto Fijoko Itunarekin. Horrek ekarri zuen Venezuelako lurralde osoan hainbat gerrillari mugimenduren sorrera, eta haiek desagerrarazten saiatu ziren militarrei eta poliziei oso praktika gogorrekin egin zieten aurre. Gerrilla estrategia horrek 1969. urtera arte iraun zuen komunistek babestutako taldeen kasuan, Betancourten gobernuarekin PC baketzeko eta legeztatzeko akordioa lortu ondoren desegin baitziren. Baina Venezuelako Iraultzaren Alderdiak babestutako taldeen kasuan 70eko hamarkadara arte jarraitu zuten. 1959ko urtarrilaren 1ean Fidel Castroren zuzendaritzapean boterera iritsi zen Kubako Iraultzaren idealetan oinarritu ziren gerrilla talde guztiak.

# X

Lopez Arrimadas kapitainak erabaki zuen neska venezuelarraren gelan beste miaketa bat egitea. Sinestezina iruditzen zitzaion itaunketa guztiei aurre egin ahal izatea hark, leporatu ziezaioketen ezer esan gabe. Baina, desilusionatuta zegoen batez ere, hasieran Polizia Armatuaren eskalan gora egiteko eta patu hobea lortzeko bere bizitzako aukera gisa aurkeztu zitzaiona ezerezean geratzen ari zelako, ageriko kausarik gabeko atxiloketa kasu batean soilik. Atxilotua atzerritarra zen, eta imajinatzen zuen arazoak sor zitzakeela epailearen aurrean koherentea zen zerbait leporatzen ez bazioten, epaileak aske uztea erabakitzen bazuen, eta gero bere herrialdeko prentsan kontatzen bazituen Espainiako poliziarengandik jasan zituen tratu txarrak. Kasu horretan, goiko norbaitek erantzukizunak eskatuko zituen, eta beti tontoenek ordainduko zituzten plater hautsiak, eta kasu honetan berak.

Beste ahalegin bat egin nahi zuen pista fidagarri bat aurkitzeko, eta pentsatzen zuen posible zitekela hotel edo gelako txokoren batean neskak dirua edo dokumenturen bat ezkutatu izana, bere ustez han gertatzen ari zena argitzen laguntzeko zerbait. Bazitekeen venezuelarra iritsi aurretik konplizeren bat ostatua hartuta egotea, eta hotelaren beste gela batean edo leku komunen batean zerbait ezkutatzea, susmorik sortu gabe har zezan. Aukera bat baino ez zen, baina aztertu egin behar zuen ahal zuen guztia agortzeko, batez ere oraindik ez zuelako lan egiteko ezer sendorik.

Miaketa egiteko, berarekin joan zedila eskatu zion Rodriguezi; nahiz eta hotela txikia izan eta gelak nahiko sinpleak, lan zailegia zen berak bakarrik egiteko. Bere konfiantzako beste agente baten laguntza ere eskatu zion Rodriguezi, lagun ziezaien, eta

konfiantza osoko norbait aukeratzeko eta diskretua izateko esan zion. Rodriguezek Valencia kaboa eraman zuen, Donostiako gaueko prostituzio etxeetan ohiko parranda-laguna zuena, eta bere bazkidea ere bai prostibulu eta antro ia guztietan saltzen zen kopuru txikiko zigarro eta likore kontrabandoari lotutako negozio batzuetan.

Aldi honetan hirurak hotelera joan ziren Poliziaren auto ofizial batean. Hoteleko enplegatuak ikaratzea zen helburua, jakin zezaketen guztia esatera behartzeko, eta zerbait jakinez gero behintzat. Aurreko bisitan ez baitzieten ezer garrantzitsurik atera. Hotelera iristean, gerenteari eskatu zioten harrera-erregistroa erakusteko eta azaltzeko nor zen neska venezuelarra iritsi baino hamabost egun lehenagotik ostatu hartu zuten bezeroetako bakoitza. Gerenteak eskatu zioten guztian laguntzea onartu zuen, bai beldurragatik, bai laguntzeko konbentzimenduagatik, eta Lopez Arrimadas bere bulegoan esertzera gonbidatu zuen, hoteletik igarotako bezero bakoitza identifikatzeko. Bien bitartean, Rodriguezek eta Valenciak neskaren gela hankaz gora jarri zuten.

Gerenteak Lopez Arrimadasi esan zion gai hori oso delikatua zela, eta zuhurtzia eskatu zion etorkizunean emango zion informazioarekin egingo zituen pausoen aurrean, biek gaizki amai zezaketelako, informazioari emango zitzaion erabileraren arabera. Hasieran kapitainak ez zuen ulertu enplegatuaren aholkua, baina egun horietan ostatu hartu zuten bezeroak nortzuk ziren azaldu ahala, hobeto ulertu eta bertigo pixka bat ere sentitu zuen. Gehienak Erregimeneko goi funtzionarioak ziren, politikoak eta militarrak, maitaleekin edo prostitutekin Madrildik eta probintziako beste hiri batzuetatik iristen zirenak. Batzuetan beren izenekin erregistratzen ziren, beste batzuetan abizenarekin bakarrik, eta gerenteak azaldu zion kasu gehiene-

tan NAN zenbakia inoiz ez zela erregistratzen, bezeroek hala eskatzen baitzuten oharkabean pasatzeko. Orduan pentsatu zuen Lopez Arrimadasek Donostiako uda luxuzko prostituzio--etxe bat bihurtu zela Espainiako handikientzat, eta hirian lan egiten zuten poliziek ere ez zutela horren berri.

Handik igarotako gainerako bezeroak askotariko salgaien merkatari handiak ziren, hotelean egun bat edo bi bakarrik egoten zirenak, edo artista edo musikari ospetsuren bat, ikuskizunen baterako hirira iritsitako lagunekin batera. Gerenteak azaldu zion beti izaten zirela bezerorik txarrenak, gelak eta salak zikinduak uzten zituztelako, edo mozkorraldietan eskandaluak. Nazkagarritzat jotzen zituen haiek; erdi biluzik ibil zitezkeen, edonon elkar ukitu eta musukatzen, eta ez bakarrik gizonak emakumeekin, baita gizonak gizonekin ere. Hori entzuteak nazka sentsazio handia eragin zion Lopez Arrimadasi.

Eztei-bidaia Kantauriko kostaldean igarotzea erabaki zuten ezkonberrien bikote batzuk ere aurkitu zituzten erregistroan. Ez zen batere susmagarria, garai hartan Donostia modan jarria baitzen Madrilgo eta Bartzelonako familia aberatsetako ezkonberrien bidaiarako helmuga gisa. Susmagarria izan zitekeena bakarrik iritsitako suediar bat zen, hiru egunez geratu zena eta ezin jakin zertan aritzen zen, ez baitzuen hitz bakar bat ere egiten espainieraz, eta ez zuten inoiz inorekin ikusi. Venezuelarra iritsi baino hiru egun lehenago aldegin zuen hoteletik, auskalo nora. Gizon heldua zen, berrogei bat urtekoa, hoteletik oso goiz irteten zena; ekipaje gisa bidaia-poltsa bat besterik ez zuen ekarri. Berandu erretiratzen zen gauean; giltza jaso harreran eta gabon esateko ere ez zen izaten gauza. Hoteleko enplegatuek "Marmarti" jarri zioten ezizenez, agurtzen zuen aldi bakanetan haserretuaren antzeko murmurioa egiten zuelako. Ez zuten asko estimatzen, inori eskupekorik txikiena ere utzi ez

zion zekena baitzen. Suediarrak zein gela okupatu zuen galdetu zuen kapitainak eta, erantzuna jaso zuenean, Rodriguezen eta Valenciaren bila joan zen.

Neskaren gelako atean aurkitu zituen, zigarro bana erretzen. Ofiziala ikustean, zurrun jartzeko keinua egin zuten bi agenteek, eta Rodriguezek esan zuen ez zela zorterik izan, nahiz eta asko saiatu, ez zutela ezer aurkitu. Gelara sartuta, bere bi agenteek egindako txikizioa ikusi zuen Lopez Arrimadasek. Ohea erditik zatituta zegoen eta barrua erauzita; sofa txiki bat, mahai txiki bat eta aulkia ere antzera; koltxoia labankadaz josita eta bere artilezko tripak begien bistan; lanpara lurrean hautsita zegoen, armairua bere tokitik aterata eta alde batera okertuta; haren barruan ez zen kaxoietako bat ere salbatu; komunean konketa erauzi egin zuten bi agenteek, bere atzean zerbait izkutatua ote zegoen ikusteko; komuneko ur depositua ere hautsia zegoen lurrean, Valenciak bota egin zuelako ateratzerakoan. Lopez Arrimadasek irribarre egin zuen bere buruarentzat, agindupeko biek egindako lana aurkitzean gerenteak jarriko zuen aurpegia irudikatuz.

Gero hirurak hasi ziren gauza bera egiten suediarra egondako gelan. Txikizioa beste gelakoa adinakoa izan zen baina ez zuen emaitzarik eman. Han ez zegoen dirurik edo neskarekin zerikusia izan zezaketen dokumenturik. Rodriguezek konketaren atzean ezkutatutako paperezko poltsatxo bat lortu zuen hala ere; hauts zuri kantitate txiki bat zeukan poltsak eta kapitainari eman ziona. Hirurek usaindu zuten eta ez zuten jakin zer zen; Valenciak berak esan zien kontuz ibiltzeko, ez ote zen arratoiak hiltzeko hautsa izango. Kapitainak alkandoraren aurrealdeko poltsikoan gorde zuen poltsatxoa, eta erabaki zuen kimikaz zerbait zekien polizia bati eramango ziola, hura zer zen jakiteko. Suediarraren jokabide bitxiarekin zerikusia zuen zerbait izan behar zuen, baina ziur zegoen horrek ez zuela zerikusirik vene-

zuelarrarekin, eta etsipenez egin zuen hasperen. Lehen bezala jarraitzen zuen, ikerketan lagunduko zion ezer gabe.

Hoteletik atera zirenean, komisariarantz joan ziren hirurak. Barruko patioan aparkatzean, kapitainak agur esan zion Valenciari, eta izkinako tabernan kafe bat hartzera gonbidatzen zuela esan zion Rodriguezi. Hitz egin behar zutela eta hobe zela komisariatik kanpo egitea. Atzealdeko mahaietako batean eserita, sarrerako atea etengabe zelatatzen, Rodriguez aurrean zuela, aitzinsolasik gabe zuzendu zitzaion kapitaina bere mendekoari. Arrastorik ez zuelako etsita zegoela esan zion, eta venezuelarra ez zela batere laguntzen ari. Bere ahotsa larritzen joan zen eta Rodriguezi ohartarazi zion mailaz igotzeko eta nagusien konfiantza lortzeko bere bizitzako aukera galtzen ari zirela, emaitza azkar bat behar baitzuten BPSekoek kasua eskuetatik kendu aurretik. Esan zion banderak erretzeagatik atxilotutakoak egun horretan bertan epailearen aurrera eramango zituztela, eta trena bere bidetik ateratzeko ahaleginaren gaia hilda zegoela, inplikatuta zeuden batzuek Frantziara ihes egin zutelako, jakin zuenez. Era berean, esan zion BPSekoak oso haserre zebiltzala horregatik, norbaitek denbora batez eusten jakin zuelako galdeketei, eta gaizkileek ihes egiteko astia izan zutelako. Hobe zela beraiek ez ordaintzea sekretek izan behar zuten liskar txarra. Kapitainaren arabera, azken ahalegina egin behar zuten neskaren galdeketekin; agian bere azken aukera izango zela eta gogortzea besterik ez zela geratzen. Modua bilatu beharko zen.

Ezer esan gabe entzun zuen Rodriguezek. Handik minutu batzuetara, elkarri hitzik esan gabe kafeei begira zeudela, kapitainari esan zion ezagutzen zituela BPSean erabiltzen zituzten metodoetako batzuk, baina oso gogorrak izan zitezkeela eta ez zekiela neskak jasan ote zitzakeen, nahiz eta saria ona bazen arriskatzea merezi izango zuen. Orduan kapitainak proposatu

zion talka elektrikoak egin zitzatela, pikana esaten zaion hori. Rodriguezek ohartarazi zion oso zaila izango zela aparatua lortzea, hori BPSekoek bakarrik erabiltzen zutela eta ez zekiela nola hartu haiek konturatu gabe. Ez bazuten nahi sekretek jakiterik beren kabuz ari zirela ikerketak egiten, ideia txarra haiek beste inork erabiltzen ez zuen elektrizitatea erabiltzea. Eta jakiten bazuten, gai ziren ipuinarekin Madrilera joateko, eta orduan zepoan harrapatuko zituzten behar ez zen lekuan sartzeagatik. Ez, hobe ez erabiltzea BPSeko tresnarik; hobe ohiko metodoetako batzuk erabiltzea, horiek praktikatzen ikusi dituelako ezagutzen baitzituen berak.

Tabernatik irten eta komisariara itzuli ziren biak. Kapitainak Rodriguezi agindu zion neska galdekatzeko behar zuena prestatzera joateko. Bitartean, bere bulegoan itxarongo zuen. Bere bulegoan eserita hausnartzen ari zela, telefonoak jo zuen. Berehala ezagutu zuen hariaren bestaldean akademiako bere kide ohi Sanchezen ahotsa. Enbaxadaren babeserako poliziak ohartarazi nahi zion zerbait mugitzen ari zela hiriburuan, Donostian desagertuta zegoen Venezuelako herritar baten aferaren inguruan. Inon agertzen ez zelako arduratua zegoen bere familia; ostatu hartzen zuen hoteleko arduradunekin hitz egin zuten eta esan zieten Polizia Armatuak atxilotuta egon zitekeela, agenteek ikerketa batzuk egin zituztela han, neskak hirian egiten zituen mugimenduei buruz galdezka.

Familiak Venezuelako jende boteretsuren batekin hitz egin zuela ere esan zion Sanchezek, eta boteretsu horrek, aldi berean, hango gobernuko Kanpo Arazoetako Ministerioko norbaitekin; Ministerioko norbait horrek Venezuelak Espainian zuen enbaxadorearekin hitz egin zuen ondoren, emakumea non zegoen jakiteko Espainiako agintariekin kudeaketa egitea eskatuz. Sanchezek zurrumurruak baino ez zituen entzun Madrilgo polizien artean, baina gogoratzen zuen Lopez Arrimadasek bera-

rekin hitz egin zuela Venezuelak Madrilen duen enbaxadoreaz galdetzeko, eta berehala pentsatu zuen gai hori bere lagunarekin lotuta egon zitekeela. Horretaz zerbait baldin bazekien kontu handiz ibiltzeko esan zion, Venezuelako enbaxadoreak harreman onak zituela hiriburuko polizia-agintariekin, eta ohartarazi zion kontu uher batek bere karrera honda zezakeela. Bazekien, halaber, enbaxadoreak Madrilgo kontsulari mandatua eman ziola bere herrikidea non zegoen jakiteko gestioak eta ikerketak pertsonalki egin zitzan, eta ordurako Donostiara joana zela segur aski.

Sanchezen deiari erantzuteak, lehendik zegoena baino kezkatuago utzi zuen Lopez Arrimadas. Atzerriko enbaxada bat bere arazoetan nahastea espero ez zuen zerbait zen. Nahikoa kezkatzen zuen horrek, baina aldi berean uste zuen aukera ez zuela galdu behar, bere nagusien aurrean efektu-kolpe bat lortzeko gai izanez gero. Venezuelarra gobernuaren aurkarientzat diru ekarketan inplikatuta bazegoen, eta hori frogatzeko gai bazen batez ere, ez zuten ezertarako balioko ez kontsularen ez enbaxadorearen kexek eta protestek, nahiz eta Madrilen harreman onak izan. Bazekien Estatua bere alde jarriko zela, baldin eta frogatzen bazuen emakumea kaltegarria eta gobernuarentzat etsai arriskutsua zela. Arrazoia emango zioten, bere egitateak babestuko zituzten eta ziur aski onura handia aterako zuen Aberriaren defentsan egiten zituen zerbitzuengatik. Ez zen lehen aldia halakorik gertatzen; lehenago ere jakin izan zuen Espainiako gobernuaren eta Europako beste herrialderen bateko gobernuaren arteko gatazka diplomatikoen berri, herrialde horietako herritarrak atxilotzeagatik edo hiltzeagatik Espainiaren eta bere gobernuaren aurka modu batera edo bestera borrokatzen zirelako. Oraingoan ez zuen salbuespena izan behar, baina horretarako behartuta zegoen esku artean emaitza ukigarria izatera.

Rodriguezek hurrengo galdeketarako behar zuena laster prestatuko zuela espero zuen kapitainak, eta orain bai, orain behin betikoa izango zen. Era berean, goardian zegoen sarjentuari agindu behar zion ez zuela nahi inork molestatzerik; are gutxiago atzerriko gobernu bateko funtzionarioren bat bazen bere bila zebilena. Esan ziezaiotela probintziako lekuren batean serbitzu batean ari zela eta ez zela espero laster itzuliko zenik. Denbora irabazi eta ahalik eta gehien aprobetxatzea zen kontua.

# XI

Aurrean dudan orri zuriak nire patua defini dezake. Hala jakinarazi dit lapitz honekin dakidan guztia idazteko agindu didan poliziak, kontatzeko Espainian hanka jarri nuen lehen minututik egin dudan guztia. Mehatxatu ere egin nau, hemendik bizirik ateratzeko nire azken aukera dela, nire herrira itzul nadin, egun hauek ahaztu eta nire bizitza normala berreskuratzeko. Dakidana kontatzen badiet, ez naute epailearen aurrera eramango eta ez didate ezer leporatuko, hitz ematen dit berak eramango nauela Madrilera Venezuelara hegaldi bat hartzeko, baina gero ezingo naiz berriro itzuli. Gustatuko litzaidake horrela balitz; hemendik irtetea, hegazkina aireratzean gora egiten dudala sentitzea, infernu honetatik urruntzen nauela, nire etxera eta nire familiara naramala, nire bizitzara hurbiltzen nauen bitartean.

Baina zer idatziko dut ez baldin badakit zertaz nahi duten informatzea? Gai izango naiz sinesgarria irudituko zaien gezurren bat asmatzeko eta bakean utz nazaten lortzeko? Baina sinesten ez badute edo esaten diedana egiaztatzen hasten badira eta gezurretan ari natzaiela konturatzen badira, ondorioak handiak izango dira. Orain arte nirekin erabili dutena baino sadismo gehiagorekin zigortuko naute. Zer egin dezaket? Ez dut amesgaizto honentzat irtenbiderik aurkitzen. Kontzentratzen saiatzen naiz, eta nire bizitzako oroitzapenak burura ekartzea besterik ez dut lortzen, nire oroimenaren zatitxo ia ahaztuak balira bezala, orain matxinatzen direnak. Donostiako egunei buruz idatzi nahi dut, eta bat-batean Gabonak ospatzen ikusten dut neure burua Caracaseko Euskal Etxean, beste haur batzuekin gozo-eltzea apurtzen, gurasoek animatzen gaituzten bitartean; ni ona nintzen gozo-eltzea haustean erortzen ziren gozokiak

jasotzeko. Euskal jantziarekin, bi panpinen itxura zuen gozo-eltze bat zen beti, eta Euskal Etxea dagoen auzoko El Paraisoko sarreran zegoen denda bati enkargatzen zioten. Urte batean baserri baten formarekin beste handiago bat, barruan gauza gehiago zituena, egitera ere bidali zuten.

Aldi bakoitzean haur desberdin bat izaten zen, begiak estali eta gozo-eltzea apurtzeko makila ematen zitzaiona; niri behin baino gehiagotan tokatu zitzaidan, azkena hamabi urte nituenean, eta txikiek izaten zuten beti aukera gehien. Gainerako haurrak gozo-eltzearen inguruan jartzen ginen, beti adi, joka ari zenak gutakoren bati palakada bat eman ez ziezaion. Eta denok erne, barruan zituen gozokiak eta jostailuak jasotzera joateko zain. Batzuetan fruta ere izaten zen gozokiekin batera. Korrika abiatzen ginen, konfetia artean airean hegaz ari zela, eta lurrean bilatzen genituen segidan, eta bi eskuekin harrapaka hartzen. Gure gurasoek txaloka eta alaitasunezko oihuekin animatzen gintuzten. Ni nagusietakoa nintzenez, beste haur askok baino gehiago harrapatzen nuen, baina gero gurasoek txikienekin partekatzera behartzen ninduten, ia beti ezer gabe geratzen baitziren.

Baina hori ezin dut orri zuri honetan idatzi; hori egingo banu agian irakurtzean pentsatuko lukete barre egiten ari naizela. Idatzi nahi nuke azaltzeko zer hitz egin dudan Donostian ezagutu dudan pertsona bakoitzarekin, Madrilgo aireportuan tren geltokira eraman ninduen taxilariarekin, Donostiarako txartela saldu zidan langilearekin, aldameneko eserlekuan tokatu zitzaidan andrearekin. Emakumea oso kezkatuta zegoen oporretan euskal kostaldeko eguraldiak lagunduko ote zion, ile-apaindegi on bat aurkituko ote zuen, festa batera joan behar zuelako, eta uste baitzuen probintzietan ez zirela Madrilen bezain onak izango. Hoteleko langileekin izandako elkarrizketa laburrak, beti galdetzen baitzidaten nola zihoazen nire ibilaldiak, ea hiria

gustatzen ote zitzaidan edo noiz arte geratzeko asmoa nuen; nirearen ondoko gela batean ostatu hartzen zuen merkatari haren piropoak, eta afaritarako eta gero Kontxako hondartzatik gertu dagoen toki batera dantzatzera joateko gonbita; portuko haurrekin elkarrizketak, turistek uretara botatzen dituzten txanponak biltzeko urpean igeri egiten dutenak. Edo sareak konpontzen zituen eta nondik nentorren jakin izan zuen atsoarekin izandako elkarrizketa, venezuelarra nintzela esatean aspaldi bere ahizpa bat nire herrialdera joan zela esan baitzidan, eta ordutik haren berririk inoiz ez zuela izan.

Orri honetan deskribatu nahi nituzke Donostiako hondartzan edo kaleetan gurutzatu ditudan pertsonen aurpegiak, zenbat gogorarazten didaten agureek nire aita zena, beren txapel eta guzti. Edo batzuetan geldi geratzen nintzela idatzi, emakumeei entzuteko haien artean hitz egiten, beti doi-doia, beren hizkuntza debekatua erabiltzen ari zirela inork jakin ez zezan.

Nire eskua arkatzari heltzeko eta oroitzapen horiei forma emateko gai izatea nahi dut, baina nire burua beste leku batera doa berriro. Duela urte asko gertatutakora egiten du hegan, eta amaren eskutik Karibe itsasoko ur epeletan sartzen den neskatila bihurtzen nau, zipriztintzen gaituzten olatu txikiak saltatuz. Bere besoak sentitzen ditut gerritik eusten, besoak eta hankak mugitzera animatzen nauen bitartean; uretan erlaxatzeko eta burua kanpoan mantentzeko modua bilatzeko eskatzen dit. Hala izan zen askotan, harik eta egun batean zerbait gertatu eta bakarrik urruntzeko gauza izan nintzen arte, bat-batean bere besarkada sentitzeari utzi nion eta olatuari lagun egin nion handik urruntzera.

Orain gogoratzen dut hor beldurra galdu niola eta denborarekin urrunago igeri egiteko gai izan nintzela. Nola gustatuko litzaidakeen nire itsaso horretan egotea, bere ur epeletan ahoz

gora etzan eta geldi egotea, olatuek eta korronteak nahi duten tokira eraman nazaten uztea, hemendik urrun. Idazten hasi beharko nuke, xehetasun handiz kontatzeko nola ibili naizen Alde Zaharreko kaleetan zehar, Euskal Jaietan hiria zeharkatzen duen txarangari jarraituz. Edo Alamedako kioskoan entzun nuen orkestra-kontzertua, zenbat gustatu zitzaidan Artzain Onaren organoaren beste kontzertu hura. Jendez betetako tabernetako zalapartan murgiltzea, eta ardo baten eta beste baten artean pintxo bat jaten nuenean, koruak abesten ari ziren bitartean. Paseoak Pasealeku Berriraino ilunabarrean, hotelera itzultzeko bidean aurkitzen nuen lehen jatetxean afaltzera joan aurretik. Leku guztietan jende askoren inguruan egotea, baina nire bakardadea mantenduz; mundua kanpotik ikusteko gogo hori, inorekin partekatzeko konpromisorik hartu gabe, neuretzat bakarrik.

Caracasko ikastetxe batean nik egindako irakasle-lanari buruz ere idatz nezake. Eskola horretan klase aberatseko haurrek ikasten dute, jaio bezain laster bizitza konponduta duten jendeak, gurasoek beren garaian heredatu zutena heredatuko dutelako etorkizunean, hain baitira desberdinak hiriko auzo pobreetan praktika-egunetan eskola publikoan ezagutu nituen neska-mutilekin alderatuta. Hauek, izan ere, askotan haurrak uzteko leku bat izateko bakarrik eramaten baitzituzten haien gurasoek, beraiek egun osoan lan neketsuak egiten zituzten bitartean, edo Estatuak eguneroko esne-botilatxoa eman ziezaien besterik gabe. Adinekoen gaitzespenei entzungor egin eta hiriko delinkuentziaren estatistikak nerabezarora iritsi orduko beteko dituzten haurrak, etorkizunik gabeko bizitzetan.

Baina polizia horiek ez lukete batere interesik gauza horietan, ez baitdute ulertu nahi nik ez dakidala zer galdetzen didaten hainbesteko temakeriaz, ez dudala sufrimendu honetatik aterako nauen erantzunik.

Bai, orriak hutsik jarraitzen zuen eta denbora bazihoan. Poliziak nahi zituzten erantzunen bila iristean, ez zuten ezer aurkituko. Ohartarazi egin zidaten, haiekin lankidetzan aritzeko azken aukera zela. Oraindik ez dakit eguna ala gaua den; hemen ez dago orientatuko nauen ezer. Ezin dut kalkulatu zenbat egun daramadan haien eskuetan; jateko edo edateko zerbait emango balidate, agian hobeto arrazoitzen lagunduko lidake. Bakarrik dakit bizkarrean kolpe bat nuela esnatu nindutela eta eroaren aurpegia duenak oihukatzen zidala. Beldur handia diot gizon horri, uste dut bere nagusia ez balego nahierara abusatuko nindukeela. Bere ahotsaren soinuak ileak tente jartzen dizkit eta nigandik hurbil dagoenean dardarka ari naizela sentitzen dut. Dardarak ere ia ez ditut kontrolatzen, eta etortzen direnean ezin dut jakin beldurrarena edo hotzarena den. Agian biengatik da. Gizonak garrasi egiten zuen, nazkagarria nintzela esaten zuen, neure burua nire kaka eta pixetan nahasten nuela. Horrela utzi ninduten aurreko aldian, lurrean, estali gabe, ur, izerdi, malko eta neure zabor putzu baten erdian.

Oraindik ez zait iritsi egun hauetarako espero nuen hilekoa; nahiago nuke atzeratzen jarraitzea, gauzak gehiago zailduko bailituzke horrek. Hasieran nazka ematen zidan nire zikinkeriak, eta lotsa biluztasunak; uste dut ez zaidala horretarako indarrik ere geratzen, ezta nazka sentitzeko ere. Poliziak jaikiarazi ninduen eta dutxa bat dagoen beste gela honetara ekarri, eta hemen bota ninduen, zerrama bat nintzela oihuka, nazka handia ematen ziola ni ukitzeak. Orduan mahuka bat soinean jarri eta ur hotz zorrotada azkarra ireki zuen. Lurrean eseri eta bularrak babesten saiatu besterik ez nuen egin, hor jotzen baininduen temati eta min handia ematen zidan. Gorputzaren gainerakoan jotzen ninduen eta, hain presio handia izanda, ezin nuen oreka gorde. Altxarazi eta ur zorrotada nire gorputz osoan pasatu zidan. Zutitzerakoan, zailtasun handiz jarri nintzen hormaren

kontra, ez erortzeko. Bitartean, barre egiten zuen, eta esaten zuen behin garbituz gero zerbitzu azkarra izan nintekeela berarentzat edo bere gizonetako batzuentzat. Nekatu zenean, ur-zorrotada itxi eta eskuoihal oso zarpail bat bota zidan, erabiltzean ia azala kentzen zidana. Orain nire gorputza ikus dezakedanez, ia ez dut neure burua ezagutzen, ubelduz beteta nago eta hezurretaraino min ematen didate. Kolpe asko hartu ditut, arpegia, besoak eta hankak handituak sentitzen ditut.

Ia ez zidan astirik utzi lehortzen amaitzeko; txabusina moduko bat ekarri zuen, jaurti eta janzteko agindu zidan. Berriro barre egiten zuen nire gorputzaz, bere bizitzan ikusi duen emakumerik itsusiena naizela esanez. Gutxienez orain ez nago bilutsik. Gero mahai hau dagoen tokira ekarri ninduen, orri zuriaren aurrean eserita nagoen tokira. Berehala iritsi zen ofiziala eta proposamena egin zidan: nik dakidana idazten dut eta bakean uzten naute. Egia ote da esaten duena, ala bere gezurretako bat besterik ez da? Hala ere, galduta nagoela uste dut, ez daukat ezer beraientzat, etorriko dira eta orri zuria aurkituko dute, zuri baitago nire kontzientzia ere, haiek nola konformatu jakin gabe.

# XII

Laugarren aldia zen Braulio Sifontesek, Venezuelak Madrilen zuen kontsulak, Donostiako Polizia Armatuaren komisariara deitzen zuela egun hartan. Bazekien zerbait arraroa gertatzen ari zela han. Azken komunikazioan sarkasmo argi bat sumatu zuen, sumatu ere, linearen beste aldean zegoen agenteak berriro esan zionean Lopez Arrimadas kapitaina, polizia-zentroko arduraduna, ez zegoela, Gipuzkoako beste leku batean ari zela zerbitzu bat betetzen eta ez zekitela noiz itzuliko zen eta noiz artatuko zuen. Ez zen nahikoa izan bere burua funtzionario diplomatiko gisa identifikatzea eta komisaldegi horretan agintean zegoen ofizialarekin harremanetan jartzeko premia aipatzea. Bazekien, aspalditik espainiar burokraziarekin aritua zelako, iruzur egiten ari zitzaizkiola, eta norbaitek pentsa zezakeela zerbaitengatik zela traba, edo denbora irabazi nahian zebiltzala. Hain zuzen ere, ederki zekien inoiz ez zegoela denborarik esku artean zuen bezalako kasuetan. Zantzu guztien arabera, Espainiako poliziak arrazoiren batengatik atxilotu omen zuen Venezuelako herritar bat, orain desagertua zegoena. Misio hori Venezuelak Madrilen zuen enbaxadoreak berak eman zion, eta Venezuelako Atzerri Ministerioko goi-arduradunen baten agindua zen, desagertutako emakumearen familiaren gertuko industrialari batek eskatuta. Enbaxadoreak berehala Donostiara joateko enkargua eman zion, beharrezkoa izanez gero Espainiako agintarien aurrean jarduteko datuak biltzeko, eta Sifontesek oraindik ez zuen aurkitu bere lana ahalik eta arinen egin ahal izateko hirian geratzeko tokirik.

Espainiako poliziak atxilotua izateak zer suposatzen zuen oso ondo ezagutzen zuen. Venezuelako kontsul gisa Madrilen eman zituen lau urteetan ez zen gatazka handirik izan Espainiako

agintariek atxilotutako venezuelarrei buruzkoak konpontzeko, baina lagun asko zituen Latinoamerikako eta Europako beste herrialde batzuetako kontsulen artean, Espainian atxilotutako edo herrialdeko polizia indarrek hildako hainbat herritarren kasuekin lan egin behar izan zutenak. Espainiako poliziek atxilotuei ematen zieten tratu txarraren berri ere bazekien, desagertutako atzerritarren kasu batzuk argitu gabe baitzeuden oraindik, eta zuzenean ezagutzen zuen hemen erregimenaren aurkariei ematen zitzaien tratua. Hainbat aldiz kudeatu behar izan zituen atxilotuen eta jazarritakoen senideentzako laguntzak Espainiatik ihes egin zezaten beren bizitzak salbatzeko. Kasu horietan, jazarritako familia batzuek Venezuelara emigratzea erraztu zuen kontsulak, han bizitzen jar zitezen eta bizitzak berregin zitzaten. Braulio Sifontesek ezkerreko gizontzat hartzen zuen, gainera, bere burua; ez ezker marxista boltxebikea, zentzuzko ezker batekoa baizik. Venezuelaren kasuan herritarren gehiengoa muturreko pobreziatik ateratzea lortuko zuena zen hori, baina AEBk gidatzen zuen mundu libre eta liberalaren orbitan mantenduko zena.

Lau urte lehenago Madrilera iritsi zenean baino askoz interes eta uste sendoagoekin betetzen zuen bere orain kargu diplomatikoa. Orduko hartan Perez Jimenezen diktaduraren garaiak ziren Venezuelan, baina bera ez zen bere kargura iritsi gobernutik gertu zegoelako, bere merituengatik baino, karrerako diplomatikoa zelako eta aurkeztutako oposizio guztiak arrakastaz gainditu zituelako. Hasieran, nazka pixka bat sentitu zuen bere herrialdeko diktadoreak Francoren gobernuarekin zituen harreman bikainengatik, baina bere eginkizunak ahalik ondoen bete zituen, bere herrialdea betetzera behartuta sentitzen zelako baina baita bere lana gustuko zuelako ere. Dena den, Espainiako kontsul-arazo venezuelarrak ez ziren batere korapilatsuak orduan. Espainiarren emigrazioa kudeatzea egokitu

zitzaion batik bat, eta horien artean frankismotik ihes egiten zuten batzuk ezkutatzea lortu zuen. Beste batzuetan, espainiar dirudunak Venezuelara negozioak egitera joan zitezen egin behar izan zituen kudeaketak, eta gauza bera venezuelar boteretsuek Espainian inbertitzeko arazo burokratikoak konpontzeko. Baina gai horiek gutxitan egokitzen zitzaizkion berari, enbaxadorea arduratzen baitzen horretaz, eta bazekien bazirela batzorde ekonomiko handiak, ordezkaritza diplomatikoaren gorenean kobratzen zirenak, eta, jakina, berak inoiz eskuratu ezin zituenak. Espainia gero eta indar handiagoa hartzen ari zen Venezuelako petrolioa inportatzetik, eta urre beltza Venezuelako ekonomia iraultzen ari zen.

Sifontes kontsulak ere dedikazio handiagoz egiten zuen bere lana Perez Jimenezen gobernua erori zenetik. Bazekien Madrilen gobernatzen zuen diktadorearekin zuen adiskidetasunari esker etorria zen Perez Jimenez Espainian babestera. Baina, gusturago egiten zuen lan bere herrialdeko presidente Romulo Betancourt doktorearen jarraitzaile leiala zelako batez ere, Venezuela nazioarteko eskalaren gorenean jartzeko lehen eskuko aukeratzat jotzen baitzuen. Ez zen haren aldekoa 1959an presidente konstituzional hautatu zutelako, 1945 eta 1948 artean bitarteko presidente izendatu zutenetik baizik, nahiz eta bera oso gaztea izan garai hartan. Sifontesentzat, Venezuelako demokrazia behin betiko egonkortuko zuen gizona zen Betancourt, bere herrialdeko historian gertatzen ziren konspirazioak, altxamenduak eta estatu-kolpeak atzean utzita. 1961eko urtarrilaren 23an Konstituzio aurrerakoi berri bat onartzea lortua zuen, gainera, Betancourtek. Nekazaritza erreforma handinahi bat abiarazi zuen herrialdearen barnealdea azpigarapenetik ateratzeko, Estatuak hezkuntzaren sektorean egindako inbertsio handi bat ere bai, eta inoiz ez bezala garatzen ari zen petrolio-industria Venezuelan, Lurralde Petrolio Espor-

tatzaileen Erakundeari atxikitzeari esker. Arlo profesionalean kezkatzen zuen gauza bakarra zera zen, Caracasko gobernuak harremanak haustea erabaki zuela mundu osoko gobernu diktatorialekin. Baina bere buruari esaten zion, agian bere burua konbentzitzeko, Espainiaren kasuan segur aski salbuespen bat egingo zela bi herrialdeen arteko lotura historikoengatik, eta harreman-mailak ez zuela aldaketarik izango.

Konfiantza ematen zion, jakin bazekielako Betancourt presidenteak bazekiela Guerrero Rosales enbaxadorea Lopez Jimenezen gertuko pertsonaia zela, eta bere kargutik kendu ez izanak esan nahi zuen Caracasen nahiago zutela gobernu frankistarekin elkarrizketa oneko norbait eduki, eta ez gatazkak sor zitzakeen pertsona demokratiko edo ezkertiar bat. Interes ekonomiko asko zeuden jokoan eta ezin zen arriskatu, Espainiako ekonomiaren eta industriaren hazkundeagatik batik bat, azken urteetan jauzi handia egin baitzuen, eta, ondorioz, petrolioa inportatu beharra zegoen.

Desagertutako venezuelarraren gaiaren inguruan, Madrildik irten aurretik hitz egin zuen kontsulak Guardia Zibileko kide batekin, mugatik gertu dagoen Gipuzkoako herri batean komandante graduan destinoa zeukanarekin. Tratu txarrak ematen zizkion espainiar batekin ezkondutako venezuelar baten kasuan ezagutu zuen Morales komandantea. Emakumeak, egun batean, bi seme-alabak hartu eta Venezuelara eraman zituen, aitak jakin gabe. Espainiarrak Guardia Zibilaren aurrean salatu zuen kasua, eta Morales izan zen Espainiako agintarien eta ordezkaritza diplomatikoaren arteko lotura erabili zuena emakumea eta seme-alabak Espainiara itzultzera behartzeko. Aldeen arteko negoziazio gogor baten ondoren, Sifontes eta Moralesen artean lortu zuten hura erruztapen penalik gabe konpontzea, eta aitak eta amak urteko garai desberdinetan seme-alabez gozatu ahal izatea adostu zuten. Moralesek ere

aukera baliatu zuen kontsularekin hiru seniderentzat emigranteen bisak lortzeko, eta Sifontesi hitz eman zion egunen batean laguntza behar izanez gero lagunduko ziola. Mesedea itzultzeko eskatzeko aukera zen, eta Madrildik telefonoz hitz egin zuen komandantearekin, zekien guztia kontatuz. Morales laguntzeko prest agertu zen, baina bi egun emateko eskatu zion, kontrabandoko mafiei kolpe handia emateko moduko mugako operazio bat egiten ari zelako orduan. Sifontesek azaldutako xehetasun guztiak entzun ondoren, Moralesek esan zion beldur zela desagertuaren segurtasunaz, are gehiago gai politikoren batean murgilduta baldin bazegoen. Donostiako polizia-etxeak oso zorrotzaren ospea baitzuen galdeketetan, kasua Brigada Politiko Sozialak eramaten bazuen batez ere. Komandanteak esan zion, halaber, bi egunen buruan komisaldegira joango zela zuzenean, gaiaz arduratzera, eta, hori egiten zuen bitartean, bere kontaktuen artean hari batzuk mugitzen saiatuko zela, lana aurreratzen joateko. Sifontes kontsulak eskerrak eman zizkion bere jarrera onagatik, eta berritasunen bat izan bezain laster elkarri jakinaraztekotan geratu ziren.

Donostiara heldu zenean, aurrena neskak ostatu hartu zuen hotelera joan zen Sifontes. Donostiako komisaria deitu zuen hurrengo, baina ez zuen lortu hango arduradunen batekin hitz egitea. Bere deiaren zai zeudela susmatu zuen eta ez zen ausartu telefonoaren bestaldean zegoen poliziari neskari buruz galdetzera. Iruditu zitzaion ez zutela informaziorik eman nahi, edo ezkutatu nahi zutela.

Hotelean gerente bat aurkitu zuen, poliziarekin haserre gorrian, neskari leporatzeko zerbait bilatzen zuten bitartean bigarren miaketan bi gelatan egindako txikizioagatik. Argi zegoen ez zutela ezer aurkitu, baina inor ez zen orain kalteen erantzule agertzen, eta gerentea beldur zen hoteleko jabeek ez ote zuten bera egingo erantzule, ezin izan zuelako saihestu. Ustez

desagertuta zegoen Maria Mercedes Antxetaz ez zekien ezer, nahiz eta harekiko zuten interesa ikusita argi zegoen Polizia Armatuak atxilotuta zeukala edo eduki zuela noizbait.

Pisten faltagatik etsita, Sifontes kontsulak beste dei bat egin zuen hoteletik komisariara, Lopez Arrimadas kapitainarekin hitz egin ahal izatea eskatuz. Erantzun bera jaso zuen, kapitaina kanpoan zegoela eta ez zekitela noiz itzuliko zen. Denbora pixka bat egitea erabaki eta inguruko kafetegi batean sartu zen, kafe bat hartzera eseriz. Irten aurretik berriro deitu zuen komisariara, baina erantzun bera jaso zuen beste behin. Kontu hura itsusia eta korapilatsua zela pentsatuta, gaua pasatzeko hoteleko gela bat aurkitzea erabaki zuen. Baita enbaxadoreak, Morales komandanteak edo komisariako norbaitek edozein unetan aurkitu ahal izateko telefono-zenbaki bat izateko ere, han arazoa argitzea erabakitzen bazuten inoiz.

# XIII

Segur aski euria ari du Caracasen; euri-garaia da, eta imajinatzen dut Guaire ibaia hazita joango dela hiri osoa zeharkatuz bere indar guztiarekin. Bello Monte auzoko izeba Edurneren etxeko gelako leihotik Avila ikusten zen bere distira guztian. Naturak ideia ona izan zuen mendikate handi hori hor jartzean, data hauetan urtero Karibe itsasoa zeharkatzen duten zikloietatik Caracas babesteko. Aulki bat hartuta izebarenera igo eta mendi tontorrak ezkutatzen zituzten hodeiei begiratzea gustatzen zitzaidan. Eguzki-izpi urreztatuetan bilduta itzultzen ziren mendiak laino artetik. Izebak uste zuen arrisku bat zela ni han egotea, batez ere txikia nintzenean. Ez da harritzekoa, laugarren solairuan bizi baitzen eta altuera ikaragarria baitzen. Baina ni ez nintzen inoiz beherantz begira egoten; horrek bertigoa sortzen zidan eta, gainera, mendia zen interesatzen zitzaidana. Ziur orain ur-jauziak ere ikus daitezkeela, amildegiak jauzika jaisten, gure ibaia hazten duen ura ekarriz. Beti pentsatu izan dut Avilan oraindik bizi direla espainiarrak lurralde horietara iristean aurkitu zituzten jatorrizko indiarrak. Txikitan, aita ni sorbalda gainean hartuta aldapa handi haietan gora igotzen zenean, beti imajinatzen nuen bidearen edozein bihurgunetan indiarren bat aurkituko genuela gu ez galtzeko, eta inoiz ikusi ez arren, beti uste izan nuen han zeudela gu zaintzeko. Ez nuen bat bera ikusi zaharragoa nintzelarik aitarekin batera bide berdinetatik nenbilenean ere. Orduan askoz luzeagoak izaten ziren ibilaldiak. Oso goiz irteten ginen etxetik; Mariperezen hasten ginen igotzen, eta eguzkiak gogor berotzen zuenerako bidearen zati handi bat egina genuen. Hainbat aldiz iritsi ginen Los Venadosera, ordu batzuetako ibilaldiaren ondoren.

Gogoratzen dudan ibilaldi luzeena egin genuen hartan Naiguata mendiaren gailurrera iritsi ginen, mendikateko garaienaren gainera. Eguna argi dagoenean, alde batetik Karibe itsasoa eta bestetik Caracas haran osoa menderatzen dira handik, antzinako erraldoiren batek mendi horiek Caracas babesteko jarri izan balitu bezala. Azken urteetan bakarrik ere igo naiz, edo lagunen batzuekin. Baina ez da gauza bera; aitaren falta sumatzen jarraitzen dut, eta hutsune sentipena areagotu egiten zait berak maite zituen lekuetan. Hasieran ibilaldi laburrak egiten genituen, txikia bainintzen. Aitak ez zuen, seguru asko, gauza bera esango orduan, ibilbidearen zatirik handienean lepoan eraman behar baininduen. Teleferikoko Avila geltokira iristen ginen eta, han atseden pixka bat hartu ondoren, Galipaneraino joaten ginen. Batzuetan norbaitek bere kamionetan hurbiltzen gintuen oinez gindoazela ikusita. Niretzat festa bat zen mila koloretako lore horiek guztiak ikustea. Aitak beti erosten zuen adaxkaren bat amarentzat. Terraza batean eseri eta marrubiak esne-gainarekin jan, edo txokolate bero bat hartu hotz egiten zuen egunetan. Aitak jendearekin hitz egiten zuen bitartean, herriko umeren batekin jolasten nuen nik, edo korrika ibiltzen nintzen ia beti lagun izaten genuen lainoa eskuen artean harrapatu nahian.

Gero, itzuleran, teleferikoaren leiho ondoan jartzea gustatzen zitzaidan. Oso harro sentitzen nintzen jaitsi ahala, zein aldapa handiak igo genituen ikusten nuenean. Aita irribarretsu ikustean pentsatzen nuen gizon hura beti egongo zela han ni babesteko, baita oraindik mendian ume bihurrien bila zebilen tigrearengandik ere. Gurasoengandik urrun ez gintezen eta beldurra sartzeko esaten ziguten beti tigrearen kontu hori, galtzen ziren umeak jateko bila ibiltzen zela tigrea. Igotzen ginen aldi guztietan Pachecoren istorioaz hitz egiten ziguten, negua iragartzen zuen jaunaz. Baina ezin izan nuen hura inoiz ikusi,

nahiz eta pentsatu aurkitzen genuen nekazari bakoitza izan zitekeela urtero negua iragartzen duena, Caracasera jaitsiz eta bere loreak La Candelariako merkatuetan salduz. Animaliak bereizten ere irakatsi zidan aitak; batzuetan libre ikusi ahal izan genituen batzuk, eta konturatu nintzen Ekialdeko Parkeko zooan kaiolatuta zeuzkatenak baino askatasun handiagoz zebiltzala. Horregaitik, gero, parkera joaten ginenean, ez nituen lehen bezala ikusten; tristezia sumatzen nuen haien begiradan. Behin ikusi genuen orein eme batek bere umetxoa eramaten zuela; beste batzuetan araguato tximinoak ziren, zuhaitzaren gorenetik garrasi egiten zigutenak. Katagorriak asko zeuden, bata bestea baino bihurriagoa, eta nire amak motxilan jarritako intxaurrak lapurtzea lortu zuen behin batek. Aita beti zegoen harri artean ez jolasteko esaka, beldur baitzen sugeren batek ziztatuko ote ninduen, eta esaten zidan hor zebiltzatela kriskitinak, mapanarrak eta kolore eder bezain pozoi indartsuko korala batez ere, arriskutsuena zena gainera. Txikia nintzela ez nuen inoiz sugerik ikusi; gero bai, behin baino gehiagotan nire paseotan. Txoriak bereizten ere irakatsi zidan, nahiz eta haietako asko hirian ikusiak nituen etxeko leihora etortzen zirenean amak jarritako fruta puskak jatera. Guakamaia eta loro berde zaratatsuak ziren batik bat, baina baita kristofue, querrequerre, paraulata eta guacharacak ere.

Nire haurtzaroa, maite ditudan pertsonak edo noizbait izan nuen bizitza gogoratzea da nire buruak infernu honetatik abstraitzeko aukeratu duen modua. Gogoak ez du nahi nire gorputza hemen egotea, gizon hauek hain gaizki tratatzen nauten lekuan, errukitzen ez diren hauen eskuetan, ezta eromenaren edo heriotzaren ertzean egonik ere. Hemen ez nagoela konbentzitu nahi nauen adimenak, amets gaizto bat besterik ez dela diost, eta apur bat gehiago iraun dezan borrokatzeko agintzen dit; honek amaiera bat izan behar duela noizbait.

Bai, norbaitek nire absentzia nabaritu behar du eta bizitza itzul diezadaten lortu, berriro hasteko askatasuna, amesgaizto hau ahaztu nahian. Ea inoiz lor dezakedan.

Gutxienez nire oroitzapenak pizteko balio izan dit orri zuriak. Bakean uzten nautenean, gogoeta egin dezadan exigitzen didaten une horietan. Uste dut hor dagoela adimenaren argia, nire gorputza hondatzen ari direnean hain bakarrik senti ez nadin. Orri zuriaren aurrean esertzea, ekaitzaren ondoren itsaso harrotu baten ostertzari begiratzea bezala da, marinelak orduan ikusten baitu bere atzean hodeiak hautsi eta dena baretu nahi duen eguzkia. Gaizki tratatzen nauten bitartean, orri zuria desagertu egiten da, gizon horiek esku odoleztatuekin zanpatu eta urrutiko bazter batera jaurtitzeko ahalmena balute bezala. Orduan amildegia hasten da, erori egiten naiz, eusteko ezer aurkitu ezinean.

Dena ilun dago, eta argi apur bat agertzen den bakoitzean okerragoa da. Okerragoa da beren argi horia, haien herio-begietan islatzen dena. Heldu nahi nauten bi gizon agertzen dira, eskuekin edo makila luze batekin jotzen nautenak. Baina erortzen jarraitzen dut, iluntasunak dena menderatzen du berriro, batzuetan uste dut tunel batetik erortzen naizela, nire eskuak hormetan heldulekuren bati eusten saiatzen diren bitartean. Baina ez dut lortzen ezeri heltzea eta erortzen jarraitzen dut, eta argi hori madarikatua iristen da berriro, eta oinetatik heltzen didaten gizonak iristen dira. Orduan azala erauzten hasten zaizkit, eta nire haragi odolduak min handia ematen dit; minez garrasia egiten dut, baina lotsaz ere bai, larruazalik ere ez daukazunean baino biluztasun erabatekoagorik ezin baita izan.

Oihukatzen duzuna oihukatzen duzula zure etsipena inork ez dizula entzungo jakitea, eta entzun dezaketenek barre eta iseka eginez erantzuten dietela zure oihuei. Irain artean zure minaz

gozatzen dute; ez zara ezer, ez diozu inori axola hemen; zu ez zara inoiz existitu eta beren eskuetan espero dezakezun gauza bakarra da azala erauzi ondoren berriro tunelera jaurtiko zaituztela, iluntasunean erortzen jarrai dezazun, argi horia berriz agertu arte, beste behin sufrimendua gehitzen jarrai dezaten.

Itzuli zirenean, orri zuria aurkitu zuten. Ofizialak esan zuen oso etsita zegoela, une horretatik aurrera neu nintzela gertatutakoaren erantzule bakarra. Ahots lasaia zuen, baina mehatxua nabarmena zen. Konbentzitu nahi izan ninduen berak bere esku zegoen guztia egin zuela niri laguntzeko, gogor jokatzera behartzen zuela egoerak, nik ez bainuen ezer jartzen nire alde. Haiek ematen didaten tratu txarren erruduna neu naizela dirudi, alderantzizko mundu honetan, beraiek nahierara menderatzen duten munduan, non inolako eskubiderik eta legerik ez den existitzen, beren borondatea baizik ez. Eta beren boterea batez ere, edonor akabatzeko boterea.

Zoroak aulkitik altxarazi ninduen, nagusiak aginduta. Mahai gainean orri zuria eta arkatza geratu ziren. Argia horia piztuta zegoen beste gela batera bultzatu ninduen; erdian aulki moduko bat ikusi nuen, zenbait ile-apaindegitan emakumeei ilea garbitzeko erabiltzen dituztenak gogorarazten dizkidana, bizkarraldea makurtuta eta buruan ur-ontzi moduko bat zuela. Ikusi nuen, baita ere, besoen atzekaldean larruzko xingola sendo batzuk zituela zintzilik, beren belarriekin. Berehala ulertu nuen han lotzeko asmoa zutela, eta berriro izua sentitu nuen, aurre egiten saiatu nintzen, eta gizonak lepoan jo ninduen bere esku irekiaz. Gogor egiten jarraitu nuen eta ileetatik heldu zidan, hain indartsu, ezen erauziko zizkidala pentsatu bainuen. Bien artean lortu zuten ni aulkian jartzea, eta batak eusten zidan bitartean besteak nire eskuak lotzen zituen uhalekin. Etzanda gelditu nintzen, burua ur-ontziaren kontra eta gorputza aulkian luzatuta. Hankak ere orkatilen parean lotu zizkidaten nik lehen

ikusi ez nituen beste uhal batzuekin. Erabat mugiezin nengoen, beldurra berriro nire gorputz osoan zehar zebilela.

Berriz ere bere galderak, gero eta eskakizun antz handiagoa dutenak. «Non dago oposizioarentzat ekarri duzun dirua? Nori eman behar diozu? Nork eman zizun Caracasen? Non duzu ezkutatuta eta noiz emango zenion?». Galderak, galderak, galderak... Oraindik ez dut erantzunik ezagutzen ez dakidan zerbaitentzat. Hainbeste sufrimenduren ondoren, konturatu beharko lukete ahal banu edozer erantzungo nukeela hau amaitzeko. Baina oraindik ez diet ulertarazi erantzun horiek ez daudela nire esku, ez naiz emakume heroiko hori, ez naiz kausa bat defendatzeagatik beren torturak jasaten ditudana, biziraupen hutsa da orain nire kausa bakarra. Baina ez dute ulertu nahi, nire ahotsa haien belarrietara iritsiko ez balitz bezala da, haizeak eraman eta entzungo ez litzatekeen zurrumurru ahul bat balitz bezala. Berriro kontatzen dut nire istorioa, oporretan bere guraso eta aitona-amonen lurraldera iristen den emakume bat naizela, bere sustraiak ezagutu nahi dituen emakume bat, bere pausoekin bere senideek lehen egin zituzten bide berberak egitea beste asmorik gabe paseatzen ari dena, haiek lur honetan senti zezaketena sentitzeko. Baina nire arrazoiak ez dira existitzen, beraienak bakarrik.

Oin azpietan kolpeak sentitzen hasi nintzen; burua altxatzean ikusi nuen eroa larruzko borra motz batekin joka ari zitzaidala. Hasieran zartaden mina sentitzen nuen, baina berehala nabaritu nuen beroak gero eta gehiago erretzen ninduela, jasanezina izateraino. Uhalei tira egin nahi nien; oso gogor lotuta zeuden eta garrasika hasi nintzen, eta jotzen ninduenak barre egiten zuen, oihu bakoitzean bere isekak gehituz; bere barre artean beste irain batekin erantzuten zidan. Ofizialak begiratu besterik ez zuen egiten. Negarrez hasi nintzenean eta malkoak masailetan behera zihoazkidanean kolpeak azkarragoak izan ziren,

bata bestearen jarraian. Konortea galdu nahi izan nuen, neure inkontzientzian ihes egin ahal izateko, baina ezin izan nuen lortu hori ere.

Une batean gelditzeko agindu zion ofizialak, eta nire bizitza osoan zehar jazarriko nauten galdera berberak itzuli ziren, inoiz gehiago atsedenik emango ez didaten eta eromenera eramango nauten galdera horiek. Berriro saiatu nintzen esaten ez nekiela ezer bilatzen ari zirenaz, errukitu eta uzteko bakean. Baina dena da alferrik jende honekin; eurena nahi dute eta ez dago balioko duen arrazoirik. Kolpeak itzuli ziren; ez dakit nire oinek inoiz gehiago eutsiko didaten zutik. Denbora asko igaro zen nekatu ziren arte. Ezin nion ezeri erantzun, negar egin ahal nuen bakarrik, nire malkoen hezetasunaren hotza aurpegian behera, lepotik erortzen eta txabusina bustitzen zuten. Orain, behintzat, ez naute biluztu, baina uste dut ez dudala inoiz gehiago kenduko betirako izango dudan lotsa hau.

Joan egin ziren eta lotuta utzi ninduten. Nire oinak ez ziren existitzen, kolpeen eta erreduren mina ere ez nuen sentitzen, lo bezala zeuden, sentikortasuna galduta. Orri zuria, itzul iezadazu konorterik eza, inkontzientzia; utz iezadazu minutu batzuez oinaze guztia saihesten, utz iezadazu gogamena beste leku batean sentitzen, urrutira hegan egiten. Non bota zintuzten, non geratu zinen horien esku hiltzaileek zimurtuta?

Laster itzuli ziren. Bainatzeko erabilitako mahuka eta eskuoihal txiki bat zekartzaten. Ofizialak uhala jarri zidan lepoaren inguruan, lepoa mugitu, biratu edo burua altxa ez nezan. Erabat geldirik nengoen, aulkiari lau aldetatik lotuta, hankak, beso bakoitza, eta orain lepoa ere bai. Mahukako uraren bidea ireki zuten, eta zurrustan busti ondoren bat-batean nire aurpegian jarri zuen toaila ofizialak. Itolarriaren lehen sentsazioa sentitu nuen. Airea toailaren ehunean zehar pasa zedin saiatzen nin-

tzen, ahoa ahal nuen guztia irekiz, ehun bustiaren artetik airea iragazi nahian. Orduan mahukako ur-zorrotada handia entxufatu zuen beste poliziak, eta berehala ura sartu zen nire ahotik, arnasa hartzen jarraitzeko airearen bila ari nintzenan. Ura besterik ez, eta arnasa hartzen saiatzen nintzen bakoitzean ura sartzen zitzaidan ahotik, sudurretik, birikak urez bete zitzaizkidala sentitu nuen arte. Urak bizia ematen digu, baina baita kendu ere, eta itotzen ari garela sentitzen dugunean, gure gorputzak bere indar guztiak jaurtitzen ditu, airera eta azalera heltzeko borrokan. Baina ezin nintzen lokarrietatik mugitu ere egin, norbaitek nire gorputzetik tiraka ibaiaren hondora eramango banindu bezala.

Burua jira-biraka neukan; tinpanoek eztanda egingo zidatela ematen zuen. Belarriek oraindik entzuten zuten nire aurpegiaren kontra presioan kolpatutako uraren hotsa, baina soinu hori gero eta urrunagoa zen, itzaltzen joango balitz bezala. Kolpetik airea berreskuratu nuen, ofizialak toaila burutik kendu zidanean. Ur asko bota nuen, hainbeste non botatzen nuen guztia nire aurpegira eta ahora itzultzen saiatzen zen, etzanda eta buruz gora nengoelako. Segundo gutxi batzuetan utzi zidaten arnasa hartzen; berehala sentitu nuen berriro toalla aurpegia estaltzen, eta birikak betetzen zizkidan ur zurrusta berriz ere. Saio bakoitzean, belarrietako soinua urruntzen zitzaidanean, aire izpirik ez nuenean, tinpanoak lehertzear... toaila kendu eta birikak husten eta aire berriaz betetzen uzten zidaten.

Ez dakit zenbat aldiz egin zidaten. Askotan izan zen, eta azkenean sentitu nuen ez nuela gehiago biziraun nahi eta abandonatu egin nintzen. Jada ez nintzen airearen bila borrokatzen, gorputz osoa erlaxatzen ari zitzaidala sentitu nuen, hankek, besoek eta lepoak ez zioten indar egiten uhalei. Uste dut horrek beldurtu zituela, edo agian amore eman zutela, nahiz eta ziur

nagoen ez zitzaiela axola ni une hartan bertan hiltzea. Agian beste oinazeren bat imajinatzen ari ziren, oinaze are okerragoa, gogorragoa. Auskalo zer gerta daitekeen buru kriminal horietan. Orduan ez zidaten galdera gehiagorik egin, nik erantzunik ez dudala konturatu balira bezala. Uhalak askatu eta zutitzera behartu ninduten. Ulertu ez nuen zerbait esan zion ofizialak besteari. Belarrietako burrunba hor neukan oraindik, eta arrastaka ekarri ninduten ziega honetara. Berriro itxi naute hemen, iluntasun honetan, zoru hotzean, beste atxilotu batzuek, beste torturatu batzuek utzitako zikinkeria guztien gainean nire gorputza dudala.

## XIV

1961. Venezuela.

Garapenean dagoen Caracasek hazten jarraitzen du, askotan modu desordenatuan herrialde barruko immigrazioagatik, petrolio-esportazioak hiriburuan sortzen duen oparotasunaren parte izatea bilatzen baitu. Hiriaren inguruko auzune pobreak gauetik goizera agertzen dira, eta Avilako muinoak estaltzen dituzte nahas-mahas. Agintariak ez dira gai, eta ez dirudi gehiegi interesatzen zaienik, zerbitzuak, garraio-sistemak edo hirigintza-planak urriak diren gune txiro horrek estaltzea ordura arte ekologikotzat jotako eremuak, eta are gutxiago mendilerrotik iristen diren eta hiriburua elikatzen duten iturburuen sistema arriskuan jartzea.

Puntu Fijoko Ituneko gobernuek beste lehentasun batzuk dituzte klase aberatsei eta klase ertain sortu berriari begira, haien gizarte-euskarri nagusi gisa. Azken finean, pobreek ez dute botoa ematen hauteskunde amarrutsuetan, non AD eta Copei txandakatzen diren denbora gehiegi irauten duen boterearen kudeaketaren banaketan. Behartsuek ez dute botorik ematen, askotan Estatuak onartzen ez dien identitaterik ere ez dutelako eta, lortzen dutenean, haien botoak desagertu egiten direlako «acta mata voto»ren dinamikan, non ezkerreko oposizioaren botoak gobernuko bi alderdiei kontatzen zaizkien praktika horretan, zeintzuk nahi bezala amarratutako hauteskundeetan irabazten duten beti.

Baina botereak, boteredunentzat eta erdiko klasearentzat egiten ditu ahaleginak, munduko edozein lekutan aberatsagoak direnen mailara eraikitzeko Venezuelako gizartea. Bere gara-

tzen zela. Minezko garrasiak ziren, lehen bota nituenak bezalakoak, eta nengoen gelako paretak zeharkatzen zituzten, neure buruan iltzatu eta min emateko. Batzuetan garrasi egiten zuen gizon bat zen; esaten zien ez zekiela ezer gehiago, dena kontatu ziola, ez zuela beste inor ezagutzen. Baina ez zioten sinesten, eta ematen zizkioten kolpeak eta galdekatzen zuten ahotsak entzuten ziren, minezko garrasi gehiagok berehala erantzuten zituztenak. Gero emakume batenak ere entzun ziren, etsipen berarekin, min berarekin, eta torturatzaileen oihu berberak, kolpe berberak, mehatxu berberak. Uste nuen aldi berean galdekatzen ari zitzaizkiela biei, batak bestearen mina senti zezan eta makur zitezen. Emakumea negarrez ari zen gizona jotzen eta galdekatzen zuten bitartean. Gizonak negar egiten zuen emakumea galdekatzen eta kolpatzen zuten bitartean. Bikote bat zela jakin nuen haien alaba atxilotzeko eta bortxatzeko mehatxua egin zietenean. Emakumeak erregutzen zien ez zezatela egin; gizonak kartzelara eraman zezatela eskatzen zien, baina familia bakean utz zezatela.

Familia, familia izango dute gizon hauek? Bere eskuak baliagarriak izango dira emazte bat, alaba bat laztantzeko lanetik etxera iristen direnean? Izan ote zuten umetan maite izan zituen amarik? Eta izan bazuten, ez al dute ikusten emakume bakoitzarengan ama bat bere seme-alabengatik bizia emango lukeena? Nola torturatu dezaketen horrela norbait? Oihuak eta kolpeen hotsa betiereko bihurtu ziren eta beste zerbaitetan pentsatu nahi izan nuen. Orri zuriari oroigarri batekin laguntzeko eskatu nion, baina oraingoan ez zen etorri. Agian pentsatu zuen hobe zela nori aurre egin behar nion kontuan hartzea, handik bizirik ateratzeko beharko nuen indarraren handiaz ohartzea. Horregatik ez zen etorri oraingoan, bere oroitzapenekin ez distraitzeko, iristear zegoenerako presta nendin.

Hormak zeharkatzen zituzten oihuak isildu egin ziren bi gizonak etorri baino lehentxeago. Burusoila eta biboteduna izerditan iritsi ziren; haiek ziren bikoteari tratu txarrak eman zizkiotenak. Izuaren, ezintasunaren eta beldurraren jabeak, pertsonak suntsitzeko makinak. Pozik zetozen, biktimak menderatzea lortu bide zuten.

Nortzuk ziren, zer leporatzen zieten, bizirik atera al ziren? Ez nuke inoiz jakingo, baina nire patua ez litzateke haienaren oso ezberdina. Beldurraren eta oinazearen jainkoak bueltan ziren; nire txanda zen orain. Luze gabe agertu ziren, baina orain aurre egiteko prest nengoen; neure buruari zin egin nion ez nuela gehiago nire bizitzaren alde erregutuko. Zertarako saiatu zuri entzun nahi ez dizun norbait konbentzitzen? Zertarako umiliatu bere biktimaz errukitzeko gizatasunik ere ez duen norbaiten aurrean? Nahi zutena egin zezaketen nirekin; txikitu ahalko ninduketen eta nire hondakinak ibai batera bota, mehatxatu eta iraindu nazaketen, baina ni prest nengoen haien oinaze guztiak jasateko begiak jaitsi gabe, begiradarekin esateko zein jende eskasa ziren, hiltzeko, torturatzeko edo oinazea eragiteko gai den sistema baten hondakin bihurtuak makina elikatzen jarraitzeko.

Biboteduna nire hanketan eseri zen eta bere pisua jasanezinak aulkiaren kontra zanpatzen ninduen. Eskuak askatzen saiatu nintzen haren aurpegia atzeman, eta nire azazkalekin atzamarkatuz erauzteko. Baina kateak nire haragitan gehiago sartzea besterik ez nuen lortu. Orduan burusoilak poltsa jarri zidan lehen aldiz buruan; olanazko poltsa itxi bat zen, airea pasatzen uzten ez zuena. Berehala sentitu nuen itolarria; ahal nuen guztia borrokatu nuen, baina nire hanketan zegoen gizonaren pisuak eta kateek ez zidaten uzten. Segundo frakzio batez gogora etorri zitzaidan tortura hori jasan nuela uniformedunek ile-apaindegiko aulkian lotuta nindutenean. Berriro ere sentsazio bera

zen, airea ahitzen zitzaidala, airea falta zitzaidala, eta birikak erretzen dituen berotasuna. Oihala aurpegira itsatsi ahala haren bitartez arnasa hartu nahi izan nuen, baina alferrik. Orduan gogoratu nuen uniformedunek tortura hura eten zutela itotzear nengoela ikusi zutenean, eta une hura azkartu nahi izan nuen; berdin zitzaidan hiltzen banintzen, lehenbailehen gerta zedila behintzat. Gorputza lasaitu nuenean heriotzaren zorian nengoela pentsatu zuten eta burusoilak poltsa ireki zuen. Segundo batzuetan arnasa hartu nuen, eztulka. Birikek lehertu nahi zuten. Berriro jarri zuen poltsa nire buruan eta nire lepoaren inguruan itxi zuen; itolarria lehenago heldu zen oraingoan. Berriro lasaitu nintzen eta poltsa berriro kendu zuen. Segundo batzuen buruan berriro jarri zidan, beti ondorio berarekin. Birikak sutan nituen eta eztula eragiteko ere ez zuten indarrik. Gutxi falta zen dena amaitzeko, baina gizonak haserre zeuden eta alde egin zuten. Hor utzi ninduten lotuta, birikak berriro airez bete nahian.

Hurrengo itzuli zirenean, burusoilak bere esku irekiaz jo zidan aurpegia. Galdetu zidan non ikasi nuen poltsari eusten, nork entrenatu ninduen. Nik ez nion erantzun; agian esan niezaiokeen komisaria horretan ikasi nuela hobe dela berehala hiltzea, haien moduko jendeari amaiera noiz izango den erabakitzen uztea baino.

Askatu eta lurrera bota ninduten ahuspez. Bibotedunak eskuburdinak eskumuturretan jarri zizkidan berriro, eta nire beso lotuen gainean eseri zen ondoren. Bere pisuak giltzurrunetan sartzen zizkidan eskuburdinak; mina gero eta handiagoa zen. Burusoilak orkatiletatik heldu zidan eta gelako zoruan arrastaka erabili ninduen bestea gainean eserita nuela. Barre egiten zuten; barre egiten zuten esanez hura ez zidala inork irakatsi, ekoizpen propiokoa zela, «ontzitxo» deitzen ziotela. Ez zida-

ten galdeketarik egiten, nik erregutzea nahi zutela uste dut, nire borondatez konta niezaien beren ustez nekiena. Zoruan arrastaka erabili ninduten luzaroan, eta eskuburdinak nire bizkarreko hezurretan iltzatzen ari ziren. Burusoila nekatu zenean, txandakatu egin ziren. Manzanas burusoila eskuburdinez lotutako nire besoen gainera erori zen bere gorputz osoarekin, eta bibotedunak haren postua hartu zuen nire orkatiletatik helduz. Itolarriak estutzen ninduen; ezin nuen arnasarik hartu gizonak nire gainean zuen pisuagatik. Une batean aurpegia kolorez aldatzen ari zitzaidala ikusi zuten eta gelditu egin ziren; eskuburdinak askatu eta lehen kateatuta egon nintzen aulkian esertzera behartu ninduten. Ez zidaten eman nire indarrak suspertzeko tarte luzerik; berehala zutitzera behartu ninduen bibotedunak eta arrastaka eraman ninduen egunaren hasieran giltzapetu ninduten ziegaraino. Atea itxi eta alde egin aurretik esan zidan ez zela izan galdeketa eguna, hurrengo egunean hasiko zirela horretan eta gauzak serioski egiten. «Gaurkoa beroaldi bat besterik ez da izan», esan zuen. Gogoeta egin eta dena kontatu niezaiela, edo betiko damutuko nintzela.

Bakardade hau nirea da behintzat; nire bila etortzen ez diren bitartean izango dut bota zaituzten lekuan zure bila aritzeko aukera. Itzul iezadazu araguaneya, orri zuria, itzul iezadazu behinola nirea izan zena. Itzul iezadazu behinola izan nintzen printzesaren ilea apaintzeko bere loreek balio zuteneko oroitzapena, nahiz eta orain piztien muturrean eranztea besterik ez geratu. Itzul iezadazu haren itzalean emandako lehen musuaren samurtasuna, lore horiz inguratutako nerabe baten musua, mundua paradisu izango zela pentsatzen zuen nerabearena. Itzul iezazkidazu artean irribarre bat edozein atsekabe ahantzarazteko gai zela uste nueneko egun haiek, izarretara bidaiatzeko laztan bat nahikoa zela sinisten nueneko egun haiek. Itzul iezadazu nire araguaneya, orri zuria; itzul iezadazu nire araguaneya, beranduegi izan baino lehen.

# XVII

1961. Donostia.

Donostiako udaren amaieran ekitaldirik jendetsuena Euskal Jaiak ziren, zalantzarik gabe. 1896an antolatu zituen lehen aldiz Gipuzkoako Foru Aldundiak «Fiestas Euskaras» deiturikoak. Euskal kultura goraipatzen zuten eta nekazari produktuen lehiaketak, literatura lehiaketak, dantzak eta kirol autoktonoak eskaintzen zitzaizkien bertaratutakoei.

1893an hasi ziren jaialdi horiek, Antoine D´Abbadiek, Sarako, Donibane Lohizuneko eta Urruñako Euskal Jaien sortzaileak, Azpeitian euskal festa bat antolatzea erabaki zuenean. Ekimen horrek Gipuzkoako Foru Aldundia animatu zuen eredua kopiatzera, eta hasiera batean Arrasaten antolatu zituen, ondorengo urteetan herrialdeko beste hainbat herritara hedatuz.

Donostian, 1927ko irailaren 8tik 18ra bitartean egin ziren Euskal Jaiak Jose Antonio Begiristain alkatearen ekimenez. Foru Aldundiaren babesa izan zuten jai haiek, eta, urtebete geroago, hiriko Ekintza Etxea eta Turismo Zentroa ere batu zitzaien.

1936tik 1939ra bitartean ezin izan ziren ospatu, gerraren ondorioz, baina 1940tik aurrera berriz hasi ziren erregimen frankistaren zentsurapean, eta 1961ean jatorrizko izena berreskuratu zuten, Euskal Jaiak. Francoren diktaduran zegoen egoera politikoak, Espainiaren batasunarentzat mehatxu eta separatismoaren agerpen moduan ikusten zuen euskal kulturarekin eta euskararekin zerikusia zuen guztia. Jai haien antolatzaileek eragozpen, zentsura, presio eta mehatxu ugari saihestu behar izan zituzten urte horietan, baina modu batera edo bestera ospatu ahal izan ziren.

Donostiako ekitaldien egitaraua ostiral goizean hasten zen Sagardo Egunarekin, Konstituzio Plazan. Bertan, gipuzkoar ekoizleek beren produktuak dastatzeko aukera ematen zuten eta ohorezko topa eskaintzen zieten sagardogile beteranoei. Aldi berean, euskal artisautzako postuak jartzen zituzten Frantzia pasealekuan.

Larunbatean, Koruko Ama Birjinaren egunean, Erraldoi eta Buruhandien konpartsak zeuden Zuloaga plazan, eta koralen emanaldia Konstituziokoan. Eguna Zuloaga Plazako Zezensuzkoarekin amaitzen zen, baina aurretik Euskal Gastronomia Kofradiak antolatutako Gaztelu Eguna ospatzen zen. 1813ko sutearen ondorengo Donostiaren berpiztea gogoratzen zen han, Alde Zaharra zeharkatzen zuen uniformedunen desfile batekin. Andre Maria elizako atarira iristen zen desfilea, eta Kapitulazioak irakurtzen ziren bertan. Eta ekitaldia amaitzeko Urgullen bazkari herrikoia egiten zen, eta Zubietako Aktak irakurtzen ziren Trinitate plazan.

Igandean, Kontxako estropaden lehen egunean, sardina-jan herrikoia egiten zen San Juan plazan, Alde Zaharra zeharkatzen zuten txistulariek eta txarangek girotuta. Gauean dantza lehiaketak jendez betetzen zuen Konstituzio Plaza, Gipuzkoa osotik iritsitako bikoteen parte hartzearekin. Donostia kanpotik zetozen eraginei irekitako hiri gisa agertzen zen jada 1961ean, frankismoaren eta eliza katolikoaren zentsura, presio eta debekuak gorabehera. Horren adibide da urte hartan dantza-lehiaketan AEBetatik iristen zen erritmo berri bat interpretatu izana, twist izenekoa, urtebete lehenago Chubby Checkerrek ezagun egin zuena gazteen artean. Twist hori, ordea, ez da Espainiako Estatuko gainerako herrialdeetara iritsiko urtebete igaro arte, baina 1961erako donostiarrek onartu egin zuten, eta garai hartan hiria kulturalki irekia zela erakutsi zuten.

Donostiak kultur hiri gisa zuen garrantzi hori 1953tik aurrera egiten zen Nazioarteko Zinemaldiarekin ere islatzen zen, bere generoan Estatu espainiarrean ospatzen zirenen artean garrantzitsuena kontsideratuz. Inaugurazioa eta aurkezpen asko Victoria Eugenia antzokian egiten ziren eta bertan zegoen epaimahaiaren egoitza ere. 1961ean, film irabazlea «One-Eyed Jacks» izan zen, Marlon Brandok zuzendu eta protagonizatu zuena, Karl Malden eta Katy Jurado eta Pina Pellicer aktore mexikarrekin batera. Film honek kritika gogorra jaso zuen AE-Betan; ikuspegi megalomanoarekin eta harrokeria hutsagatik egitea leporatzen zioten Brandori, baina Donostian harrera bikaina izan zuen, bai Zinemaldiko epaimahaiaren aldetik, bai ikusleen aldetik, eta Urrezko Maskorra eraman zuen.

Zinemak bultzada handia jaso zuen urte hartan Gipuzkoako hiriburuan, 1961eko apirilaren 2an, Aberri Egunean, Amara auzoko Astoria Zinemaren inaugurazioarekin. Ordura arte hirian edukiera handiena zuen zinema-aretoa zen, 1.524 eserlekurekin. Inaugurazio egunean, “Ben-Hur” filma aurkeztu zen. Publikoz bete-betea zegoen aretoa, eta hiriko eta probintziako agintari frankista guztiak ere bertaratu ziren egun hartan.

Baina frankismoaren debekuak saihestuz ospakizun eta jaialdi haiek egiten zituen hiriaz gain, edo Victoria Eugenia Antzokiko areto moketatuetan eta zinema izarrentzako foku ugaritan izandako luxuetako ekitaldiak ospatzen zituen hiri hartaz gain, bazegoen beste Donostia bat, bere desio intimoenak azaleratu eta diktadurak ezartzen zuen egoerari aurre egin nahi ziona.

Euskara kontserbatzea, euskaldunen hizkuntza nazionala ez galtzea zen Donostiako gizarteak gehien sentitzen zuen nahietako bat. Euskal hizkuntzaren jazarpena ez zuen frankismoak hasi; lehenago ere espainiar Estatuko gobernu guztiek horixe egin zuten modu batera edo bestera. Baina frankismoak politi-

ka hori azken ondorioetaraino eraman nahi izan zuen, hizkuntzaren desagerpeneraino. Arlo publikoan, 1936ko Autonomia Estatutuak ematen zion ofizialtasuna kenduz eraso zion euskarari, edozein eremu publikotan erabiltzea debekatuz. Arlo pribatuko jazarpena gehitu zitzaion horri, belaunaldiz belaunaldi transmititzea saihesteko ahalegin argian, desagerrarazteko asmoz. Diktadurako legeek ukatu egiten zioten euskarari edozein jarduera edo manifestazio publikotan parte hartzea, hala nola prentsan, festetan, hezkuntzan eta baita kalean erabiltzean ere. Euskara familien barruan babestu behar izan zen, ahozko eta belaunaldiz belaunaldiko transmisioan, eta egoera latza sortu zitzaion, ia iraungitzera iristeraino.

Herrian errotuta zeunden elizako kide batzuk, apaizak eta mojak, hizkuntzaren defentsan funtsezko ekile bihurtu ziren. Jarduera klandestinoak edo ez hain klandestinoak burutzen zituzten, elizako espazioetara mugatutako aktibitateak eginez. Klero horren aldetik ere heldu ziren orduan beren nagusien aurrean euskara defendatzeko ekimen batzuk, haien atxikimendua bilatuz jazarria izan ez zedin. Horren adibide da 1960an Euskal Herriko 339 apaizek gotzainei bidalitako gutuna:

«Monumentu nazional baten harriak zaintzen badira bere arkitekturaren edertasunagatik eta landu ziren garaiaren arimaren isla izateagatik, euskarak, euskal herriaren ebanjelizaziorako eta kulturarako beharrezko tresna izanik, Elizaren eta zibilizazioaren aurrean, bizitzeko eta landua izateko eskubidea du. Horren ezjakintasunak absurdoa eta kontraesan lotsagabea salatuko luke Elizarengan, eta gizartean, berriz, genozidioa eta gizadiaren aurkako politika erreakzionarioa».

Hala eta guztiz ere, 1961etik aurrera, 1939ko gurasoen porrotaren zamari pisua gehitzen jarraitu nahi ez zuten euskal gazteen belaunaldi berrien etorrerari esker, gizartean ezarritako

ezkortasuna gainditzen hasi zen. Belaunaldi berri horiek erabaki zuten euskara euskaldunen hizkuntza nazional gisa garatu eta berreskuratzearekin batera joan behar zuela Euskal Herriaren berreskurapenak. 60ko hamarkadako lehen urte horietan, euskararen berrantolaketa soziala gorpuzten hasi zen herrian, pixkanaka-pixkanaka espazioak irabazteko.

Gertaera garrantzitsu bat lehen ikastolen sorrera izan zen. Batzuetan modu klandestinoan hasten ziren, eta beti ere erregimen frankistaren ezkutuan, euskal gizartearen sektore zabaletan nagusi zen pentsamolde berria modu garrantzitsuan txertatuz. Baina ez zen hori bakarrik; ikastolen bideari beste ekimen batzuk ere batu zitzaizkien, hala nola Herri Irratiak, askotan ere herriko elizaren eskutik sortzen zirenak, programazioaren zati bat euskaraz emanez eta berehala gain hartuko diotenak erregimenaren gaztelaniazko irratien audientziari. Eta musikaren, dantzaren, antzerkiaren, mendizaletasunaren eta abarren inguruko herri eta kultur mugimendu garrantzitsuen berpiztea, ordura arte ia desagertuta egon zirenak eta gero eta gazte gehiago mobilizatzen zituztenak. Garai honetan hasi zen herriaren pentsamoldea euskararen berreskurapena diktadurak ukatzen zituen askatasunen berreskurapenarekin lotzen, aspalditik ezezaguna zen bultzada soziala emanez.

# XVIII

Donostiara iritsi zenetik, bere esku zegoen guztia egin zuen Braulio Sifontes kontsul venezuelarrak Maria Mercedes Antxeta non zegoen jakiteko. Komunikazio zuzena izan zuen Morales komandantearekin, eta honek Pio XII. kaleko komisariara egindako bisitaren berri eman zion, baita Polizia Armatuko ofizialarekin izandako elkarrizketaren berri ere. Kontsulak pena handia hartu zuen guardia zibilak jakinarazi zionean Polizia Armatuaren eskuetan egon zela neska egun batzuetan, baina gero BPSaren eskumenekoa izan zela haren kasua. Morales komandanteak ziurtatu zion, dena den, arazoaren gainean jarraituko zuela, eta ordurako bazirela zenbait kudeaketa neska venezuelarra ager zedin eta aska zezaten. Atxilotua lehenbailehen askatuko zutelakoan, guardia zibilak eskatu zion prest izan zitzala Espainiatik ahalik azkarren ebakuatzeko behar zituen kontsulatuko dokumentu guztiak, eta, halaber, aireko garraioa erabilgarri izango zuela. Venezuelarraren gaineko salaketei zegokienez, Morales komandanteak ez zekien edo ez zion informazio gehiago eman nahi izan. Kontsulak pentsatu zuen batez ere jasandako errepresioaren ondorioz urte askoan lozorroan egon ondoren Estatu osoan erregimen frankistaren aurka pixkanaka antolatzen ari zen oposizioa desegiteko ikerketekin zerikusia zeukan zerbait zela.

Braulio Sifontesek Moralesi esan zion berak ere komisariara joateko asmoa zuela egun horretan, neskaren kokalekuari buruzko nolabaiteko informazioa eskatzera. Venezuelako kontsul gisa joango zen ofizialki, Espainiako Estatuak NBEn sinatutako nazioarteko hitzarmenek hala bermatzen baitzioten. Hitzarmen horiek Estatuen arteko harremanarekin zuten zerikusia, bertako naturalen informazio-trukeari dagokionez. Moralesek,

ordea, ezezkoa aholkatu eta jakinarazi zion berak ahal zuen guztia egin zuela Polizia Armatuaren ofiziala bere alde edukitzeko, eta BPSak desagertua aurkitzeko gestioen berri baldin bazuen, tratu txarren metodoak indartuko zituztela seguru aski, politikariak gaiaren erdian sartu baino lehen ikerketak bizkortzeko. Izan ere gai politikoa zen zirudienez, eta horrek larritasun handia zuen.

Emakumea BPSaren eskuetan egoteak kezka handia sortzen zion kontsulari; bazekien polizia horren metodo basatien berri, Estatu espainiarrean egiaztatutako diplomazialarien artean erabiltzen ziren informazioengatik. Era berean, ongi zekien herrialde honetan gauza bat dela funtzionarioek esaten dizutena eta beste bat errealitatea bera, eta erabaki zuen bere kabuz ospitale guztiak zeharkatzea, emakumea haietakoren batean ote zegoen ikusteko, poliziaren aldetik tratu txarrak jasan ondoren, edo, kasurik okerrenean, gaztearen gorpua han jaso zutelako. Baina, ospitale publiko eta pribatu guztietan Venezuelako herritar baten ospitaleratzeari buruzko informazioa eskatuz ibilita, ez zuen arrastorik aurkitu inon, ezta Gurutze Gorriaren edo eliza katolikoaren mendeko beste batzuetan ere. Gorputegira ere joan zen, baina Maria Mercedes Antxetaren arrastorik ez zegoen inon.

Donostian egindako gestioen berri eman zion Venezuelak Madrilen zuen enbaxadari, zuzenean hitz eginez enbaxadorearekin, bere nagusiak agindu bezala, ez baitzuen nahi beste inor gai horretan sar zedin. Bien artean aztertu zuten egoera, eta ondorioztatu zuten gauzak oso larri zeudela BPSaren esku-hartzearen ondorioz. Enbaxadoreak agindu zion arduratu zedila inolako informazio-ihesik gerta ez zedin, eta are gutxiago prentsarantz. Erregimenak komunikabideengan zuen agintea ezaguna bazen ere, beti zegoen kazetari ausarten baten eskuetan erortzeko arriskua, edozein motatako estualdia sortuz, bai nes-

karen segurtasunerako bai bi Estatuen arteko harremanentzat. Azkenik, Caracaseko telefono-zenbaki bat eman zion enbaxadoreak, neskaren familiarekin lehenbailehen harremanetan jartzeko, eta, berritasunik ez zegoenez, gutxienez senideak lasaitzen saiatzeko eta hura aurkitu eta Venezuelara itzultzeko ahaleginik handiena egiten ari zirela ziurtatzeko.

Neskaren familiarekin izandako elkarrizketa, espero zuen bezala, trago txarra izan zen. Ama atsekabetuak behin eta berriz erregutu zion ahal zuen guztia egin zezala alaba aurkitzeko. Zotin artean esaten zion emakumeak egunero otoitz egiten zuela hala izan zedin, Ama Birjinari mirari bat eskatuz, neskatoa ahalik eta azkarren ager zedin. Alabak Venezuelan edo Estatu espainiarrean jarduera politikorik ote zuen ba ote zekien galdetu zion berak. Ezetz erantzun zion amak, militantzia politikorik gabeko emakume lasaia zela, Caracasko haurrentzako eskola batean irakasten zuela alabak eta ez zela politikan nahasten. Bera eta bere senar zena, Mercedesen aita, erbesteratuak zirela Venezuelan, gerra ostean gurasoekin iritsiak, eta bere senarra zenak parte hartze mugaturen bat izan zuela Venezuelan euskal etxeak martxan jartzen, baina alaba bakarra zela, erbesteratuak izateagatik oinordetzan hartutakoak baino kezka politiko handiagorik ez zuena.

Elkarrizketa eten zuenean, Mercedesentzat gauzak oso zail zeudela pentsatu zuen Braulio Sifontesek. Espero zuen haren atzerritar jatorriak zerbait onik ekarriko ziola gertatzen ari zen egoera beldurgarrian. Hala ere, polizia espainiarra ezagututa, eta Brigada Politiko Soziala batez ere, duda handiak zituen. Zoritxarrez, momentuz ez zegoen beste ezer egiterik; Morales komandantearen mugimenduek polizia-etxean eta polizien artean fruituren bat ematea zen itxaropen bakarra, venezuelarra bere herrialdera osasuntsu eta libre itzul zedin.

# XIX

Ni engainatzen saiatu dira, gezurraren maisu hauek. Gizon bat ekarri zuten ziegara; atea eskandalu handiz ireki eta bultzaka sartu zuten. Gizon gazte bat, beste preso baten itxura egin nahi izan zuena, baina gero haietako bat dela ikusi nuen, gora eraman nindutenean besteekin lasai hitz egiten ikusi nuen, bulego batean eserita. Ni apurtzeko erabili zuten polizia bat, niri beldurra sartzeko. Baina ezin naiz gehiago beldurtu; dena esperimentatu dut. Ezin naute gehiago ikaratu; larruazala kizkurtuta bizi naiz minutuero. Zarata bakoitzarekin, entzuten dudan ahots bakoitzarekin izutzen naiz. Urrutira joan nahi dut, hemen ez egon; bestearen minarekin gozatzen dutenen eskuetan ez egotea.

Nire ondoan eseri eta madarikatzen hasi zen gizonezkoa. Asko kolpatu zutela esan zuen, Gipuzkoa barruko herri batean banku bati egindako lapurretaren dirua non ezkutatu zuen jakin nahi zutela. Baina haren ahotsa faltsua zen, nire baitan zerbaitek hura tranpa bat zela ohartarazi nahi balit bezala. Beren ustez nik dakidana azkar esateko konbentzitu nahi izan ninduen, bestela asko sufriaraziko zidatela eta. Orain arte egin ez balute bezala. Laguntzen ez banien espero nezakeena kontatzen hasi zen gizona; berari beste batzuetan ere egin ziotela esaten zuen. Malgukiak agerian dituen koltxoi batez hitz egiten zuen, nola lotzen zaituzten bertan biluztu eta ur askorekin busti ondoren. Gero malgukietara kable batzuk konektatu eta elektrizitate-deskargak bidaltzen dituztela kontatzen zuen. «Gorputza dardarka hasten da eta elektrizitateak garuna kolpatzen dizu, borondatea kenduz, une horretan bertan hil nahi izateraino».

Atxilotu bati askoren artean ematen dizkioten jipoiei buruz ere hitz egin zidan. Noria izenez ezagutzen dutela zioen, eta ez nukeela ezagutu behar. Kolpeak alde guztietatik aldi berean etortzen zaizkizula eta ez duzula nola babestu, eta gero eta gogorragoak direla zartadak. Hobe dela lurrera ez erortzea. «Izan ere oinekin jotzen zaituzte lurrera erortzen bazara, ostikoka jotzen zaituzte gorputz osoan. Konortea galdu eta ura botatzen dizuten arte, esnatzean berriro kolpeka jarraitzeko». Arnasa lapurtzeko hondoratzen zaituzten bainuontziaz hitz egin zuen gero; zikinkeriaz beteta dagoen bainuontzia dela...

Gero eta gauza izugarriagoak iragartzen zizkidan haiekin kolaboratzen ez banuen. Ez nuen gehiago entzun nahi izan; orri zuriari eskatu nion laguntza eta, zorionez, etorri egin zen, nire oroitzapenetan murgiltzeko.

Tepui baten gailurrean egon nahi nuke, Venezuelako Roraima menderatzen duten goi-ordoki harritsu horietan, lainorik gabeko egun eguzkitsu batean, eta zeruertza luzatu dadila nire ikusmena iristen den puntutik harago. Agian Roraima mendia izango da garaiena eta eskalatzeko zailena. Edo, agian, Auyan-Tepuia, Salto Angel jauzia jaiotzen den lekua, munduko ur-erorketarik altuena duena, 900 metrotik gorako erorketa librearekin. Han dena da zaharra, denbora bera bezala, munduaren adina duena. Diotenez, sortu ziren garaian Amerikak eta Afrikak artean azpikontinente bera osatzen zuten; indiar pemoniarren lurraldea, alegia, eta tepuiak «mawuari» izpirituen bizileku izan zitezkeela uste dute. Bere ibaiek daramaten uraren ispiluan begiratu nahi nuke, eta nire burua pemoi atso bat bihurtua ikustea, bere elikagai nagusi den eta betidanik lurralde horietan landatzen duten yukaren arimaren alaba bat. Elikatzeko edo yuka mingotsaren pozoiarekin etsaiak akabatzeko. Auyan-Tepui aurrean eseriko nintzateke ur-gortina zerutik erortzen ikuste-

ko, eta hamaka bat ehunduko nuke landare-zuntzez. Eguzkia sartzean nire etxe biribilera itzuliko nintzateke, lur estuzko zorua duen etxera, baharekezko hormak eta palmondoz egindako sabaia dituen etxera. Nire etxera, nire waipara itzuliko nintzateke, ehundutako hamakan etzateko. Ezin izango nuke lorik egin, zaharrek ez baitute lo askorik egiten, eta gaua belaontzian emango nuke, gaztea nintzenekoa gogoratuz, paritxara eta tukuia dantzatzen nituenekoa gogoratuz, kanaberazko txirula, pitoak, danborrak eta maraka jotzen duten bitartean kanpoan dantzan dabiltzan gazteak dibertitzen entzunez. Edo oihanean galdutako neskato pemoi bat izan ninteke, Huele de Noche zuhaixka bat aurkitu eta bere loreen usainak adarren azpian esertzera gonbidatzen nauela.

Ez dakit familiaren waipara itzultzen eta goizaldera arte itxaron behar dut norbaitek aurkitu nazan. Loa neureganatzen saiatzen naiz, gaueko zarata bakoitzak beldurrez kuzkurtzera behartzen nauen bitartean. Akawuamari agertzea nahi nuke, yukaren arima. Atso zimur, atsegin, maitekor baten gisa aurkeztuko zait. Nire izena galdetuko dit. Mercedes. Eta esaten diodanean, berea esango dit: Esewon Nosamo. Orduan aurkituko dut nire etxerako bidea. Auyan gerlaria ere izan ninteke, Roraima zeharkatu eta arakatuz, Auyan-Tepui gailurrera eramango nauen bide baten bila. Nire eskuan katilu bat eramango dut ur magikoarekin; nire herriko xamanak eman dit, lurralde handi hauetan barrena nabilela bidean egindako zauriak sendatzeko. Ehiztarien geziek zauritutako arrano handi bat aurkituko dut. Laguntza eskatuko dit eta ur magikoarekin sendatuko dut. Sendatzen dudanean, arranoak desio bat beteko dit esker onez. Ez dut asko pentsatu beharko, Auyan-Tepuiren goienera igo nazan eskatuko diot, handik ikusteko nire lurraren handitasun osoa. Arranoak emeki-emeki hartuko nau bere atzaparrekin eta gailurreraino hegan egingo dugu. Edertasun horrek txun-

dituta utziko nau; horrelako besterik ez dago lurrean. Orduan katilua nire eskuetatik irristatu eta ur magikoa harkaitzen artera eroriko da. Horrela sortuko da munduko ur-jauzirik altuena, batzuek gero Salto del Angel deituko dutena, baina guretzat beti izango dena Kerepakupai Meru, katilu magikoaren jauzia.

Ez zen arranoa nire bila etorri zena, fusilatze komedia egin zidaten bi gizonak baizik. Ez dakit noiz, baina ordurako joana zen bere lagun gezurtia. Hain kontzentratua egon nintzen ametsetan, ez bainintzen konturatu ere egin bere partitzeaz. Eskailera asko igotzera behartu ninduten, nekeak garaitzen ninduenean bultza eta oihu egiten zidaten. Burdinazko estruktura batek jasotzen zuen ohol bat zegoen gela batera iritsi ginen. Berriz ere kafe mikatz asko edanarazi zidaten eta mehatxatu egiten ninduten uko egiten banion. Berehala erreakzionatu zuen nire gorputzak eta takikardia itzuli zen. Hain zen indartsua, ezen bihotza lokietan taupadaka sentitzen bainuen. Eskuak dardaraka neuzkan, kontrolik gabe, oholaren gainean eserita, eta oinak alde batetik bestera ikusten nituen, nireak ez balira bezala. Orduan arropa kendu zidaten, soineko bakartzat nuen bata. Egurrezko oholean etzatera behartu ninduten, eta hankak, besoak eta bekokia lotu zizkidaten. Larruzko uhal zahar batzuk ziren, haragia mozten zidatenak. Ez dakit zenbat denbora eman nuen han, bakarrik, bi gizonak joan zirenetik. Ametsetara itzuli nahi izan nuen, baina kafeak eragotzi egiten zidan; kafeinaz eta beldurrez drogatuta sentitzen nintzen.

Manzanas eta biboteduna etorri ziren. Nire biluztasunari begiratu eta barre egin zioten; inor ez zaren lekuan, nahi dutena egiteko gauza bat besterik ez zaren lekuan nengoen. Bi kable zeramatzaten eskuetan eta mehatxuka erakutsi zizkidaten. Esaten zuten oraingoan esango niela entzun nahi zutena, amaitu zirela txantxak. Mugitzen saiatu nintzen, baina uhalek eutsi egi-

ten zidaten; mugimendu bakoitzarekin gehiago iltzatzen zitzaizkidan, baina ez nuen ezer esan, ezta erregu bat ere, ulertua bainuen haiek ez zutela ulertzen. Banekien haiek bezalakoa izateko beste era batera jaio behar zela, ez zutela inolako errukirik izango beren ekintzetan, ni behin betiko haustera zetozela. Badirudi Manzanasek nire pentsamenduak irakurri zituela, edo agian nik ozenki esan nituen, konturatu gabe. Bere eskua karate kolpe bat emateko moduan irekita jo ninduen eztarrian, eta itotzen ari nintzela sentitu nuen. Malkoek ihes egin zidaten eta begiak lausotu zitzaizkidan. Galderak hasi ziren. «Non dago euskal separatistentzat Caracasen bildutako dirua? Nork biltzen zuen han? Nori eman behar zenion Donostian? Non eta noiz ikusi behar zenuten elkar?». Betiko galdera, galdera eta galdera berberak, erantzunik ez daukadanak, zentzurik ez dutenak, nire egiaren parean jarri nahi ez dituzten galderak. Galbidera eramango nauten galderak dira, haientzat bizitzeko arrazoi eta niretzat nire heriotzara bidea diren galderak. Baina ez diet erantzungo; orain isiltasunaren garaia da. Begirada bat besterik ez, hori egiteko gai naizen bitartean; begirada bat, beren bizitzako minutu bakoitzean gogorarazteko zer diren.

Luzaro egon ziren niri galdezka, baina nik ez nuen erantzuten; begiak itxi eta berriro irekitzean desagertu egingo zirela pentsatu besterik ez nuen egiten. Baina ez zen horrela izan; begiak ireki nituenean hortxe zeuden. Kableak aparatu batera konektatu eta lanerako eskularruak jantzi zituzten. Kableek pintza batzuk zituzten muturretan, eta nire izterretan jarri zituzten lehenbizi. Manzanasek jarri zituen, eta bibotedunari esaten zion ez zezala oso gogor erregulatu, ez nuela azkarregi galdu behar konortea. Alai hitz egiten zuten, nire sufrimenduak plazer emango balie bezala. Gero berriro galdetu zidaten, baina ez nuen erantzun.

Lehen deskarga iritsi zen; gorputz osoan zehar sentitu nuen zartada, ileak zutitzen sentitu nituen, eta norbaitek indarrez jaurtitzen ninduen sentsazioa. Lehena baino ez zen izan; gero halako astinaldi gehiago etorri ziren. Deskarga eta deskarga artean beren galderak egiten zizkidaten berriro; haragi errearen usaina hartzen hasi zen ingurua, eta nire gorputza lokartzen zela sentitzen nuen. Buruak bakarrik sentitzen zuen mina. Lekuz aldatu zituzten kableen pintzak, izterretatik besoetara, besoetatik oinetara, oinetatik belarrietara, belarrietatik bularretara, bularretatik baginara, baginatik ipurdira, ipurditik sabelera, gero eta zartada elektriko handiagoak emanez, gero eta deskarga luzeagoekin. Airea ke elektrikoz eta haragi errearen usainez bete zen; nire garrasiei bi gizonek erantzuten zieten, gorrotozko eta ezintasunezko begiradekin eta galdera gehiagorekin. Bazirudien nire oihuek gogaitu egiten zituztela eta ahoa irekitzera behartu ninduten; pintzetako bat mihian jarri zidaten. Deskargak garun osoa zeharkatu zidan eta konortea galdu nuen.

Erabat bustita esnatu nintzen; ura isuri zuten nire gorputzaren gainera. Bi pintzak nire bularretako bakoitzean jarrita zeuden. Deskarga bizi bat sentitu nuen, gorputz osoa zeharkatu zidana; nire haragi errearen usaina sentitu nuen berriro, eta hortzak lasaitzen ari zitzaizkidala sentitu nuen. Pintzetako bat mugitu zuten nire baginara; Manzanasek mugitu egin zuen gogor, atximurka egin nahi zuen, baina nik ia ez nuen ezer sentitzen. Beste deskarga amorratu bat etorri zen orduan. Zeukaten gauzarik indartsuena zela uste dut, bibotedunak Manzanasi esan baitzion horrela funtzionatzen ez bazuen beste metodo bat aurkitu beharko zutela. Beste deskarga batek hautsi zidan bizkarrezurra, beste batek kendu zizkidan eskuak, beste batek burua lehertu zidan... Haragi erre maspildua besterik ez nintzen, elektrizitateak bakarrik astintzen ninduena, nire borondate propiorik gabe. Konortea galdu nuen berriro.

Beste bi gizonek esnatu ninduten; larruzko zintak askatu, zutitzera behartu eta bata eman zidaten, jantzi araziz. Berriz ere kafea hartzera behartu ninduten, oraingoan ez hainbeste. Gero gelatik atera eta korridoreetan barrena bultzatu ninduten. Ia ezin nintzen ibili, eta gorputzeko erredurek min ematen zidaten bataren ehuna ukitzean.

Bi gizonak lasai zihoazen; inspektoreak esaten zuen jaten ari zirela eta gero beraiek ere irten ahalko zirela, goseak zeudela. Errealitatetik kanpoko zerbait bezala entzuten nien. Ezinezkoa zen gizon haiek gauza normalei buruz hitz egitea jendea sarraskitzen zuten bitartean; ezinezkoa zen haien kezka izatea zer jango zuten, besteen haragia elektrodoekin erretzen zuten bitartean, tortura berri bat asmatzen zuten bitartean. Haietako bat korridorean aurreratu zen. Ikusi nuen metro batzuk aurrerago kalea izan zitekeenera ematen zuen leiho bat zegoela irekita; ez nekien zein solairutan nengoen. Leiho azpian egurrezko aulki luze bat zegoen; zerbait pasatu zitzaidan burutik. Polizietako bat nahikoa aurreratu zen; bestea, berriz, gure atzean entzun zen ate hots batengatik biratu zen berriro. Lasterka irten eta zurezko bankura igo nintzen, leihora iristen saiatu nintzen, bertan gora igo eta hutsera jauzi egiteko. Eskuekin leihoa ukitzen ari nintzen, nire hatzek haren ertzari heltzen ziotenean indar handi batek zangoetatik harrapatu ninduen. Segundo batez udako arratsalde bateko zeru urdina ikusi nuen. Baina ezin izan nuen harrapatu; bi gizonek heldu eta lurrera bota ninduten. Batek lepoan jarri zidan belauna eta itota nengoen. Besteak hanketatik heltzen zidan. Ukabilez kolpeka hasi zitzaizkidan bizkarrean eta buruan; irainka ari zitzaizkidan, puta eta zikin eta antzeko. Altxatu egin ninduten eta eskuburdinak nire eskuetan jarri, besoak atzerantz lotuz. Berriro bultza ninduten iritsi nahi ez nuen tokirantz.

Ikaraz mintzo ziren, neure buruaz beste egiteko gauza nintzela kontatu nahi ez nituen gauzak nituelako, ekintza hura ez zitzaiela batere gustatuko buruzagiei, beren karrera zapuztu zezakeela... Oinez nindoan bitartean behin baino gehiagotan jo ninduten eta jada ez ninduten askatzen, ezta nigandik aldentzen ere. Baina oker zeuden; nik ez nuen hil nahi, ez nuen nire buruaz beste egin nahi. Bizi nahi nuen, Kerepakupai Merun erortzen diren tanta guztietan urtu nahi nintzen, laino bihurtzen diren ur tanta guztietan lurrundu. Auyan tepuiaren gailurrera eraman zuen arranoa izan nahi nuen. Polizia haiengandik eta eromen honetatik ihes egin nahi nuen.

Manzanasi eta bere bibotedun lagunari ez zitzaien gustatu nik arrano bihurtu nahi izatea. Lehenik, oso haserretu ziren beste biekin; iraindu egin zituzten, ezgai gisa tratatu, diziplina-neurriekin mehatxatu eta modu txarrean gelatik aterarazi zituzten. Gero nire kontra egin zuten. Manzanasek ileetatik heldu eta ia erauzi egin zizkidan, tiraka altxatu ninduenean lurretik. Horrela eduki ninduen, hankak airean; segundo batzuk betiereko egin zitzaizkidan. Lurrera bota ninduen gero, indarrez, eta ipurmasailetan eta hanketan ostikoak ematen hasi zitzaidan. Eskuekin neure burua babesten saiatu nintzen, baina ezin nuen, edozein mugimendurekin eskumuturretan iltzatzen zitzaizkidan eskuburdinengatik. Kolpeka ari zitzaizkidan bitartean, bainuontzia ikusi nuen gelaren hondoan, eta horrela jakin nuen zer egiteko asmoa zuten nirekin.

Azkenean, nekatu egin ziren ni jotzeaz. Bien artean heldu eta izkina batean lurrean zegoen ohol baten gainera igo ninduten. Besoak eskuburdinekin lotuta utzi eta larruzko gerriko batzuekin lotu zizkidaten sorbaldak eta hankak. Oholaren muturrean airean geratzen zitzaidan burua; nire lepoak nekez eusten zion eta aurrerantz erortzen zitzaidan. Bien artean helduta bainuontzira eraman ninduten ohol gainean. Haiek oholari nire

hanken parean eusten zioten bitartean, bainuontziaren gainetik begiratu eta barruan zegoena ikusi eta usaindu ahal izan nuen. Inoiz ikusi dudan likidorik nazkagarriena zen, berde ilun koloreko ura, pixa eta kaka usaina zuena; ur usteldua. Goragalea sentitu nuen, botaka hasi nintzen eta gonbitoa bainuontzian erori zen. Orduan ulertu nuen nik baino lehenago egoera horretatik igaro zirenen gonbito usaina zela, sadiko haien biktimek oka egindakoarena. Usainak sudurzuloak erretzen zizkidan; banekien zer zen itolarria, lehenago ere eragin baitzidaten. Baina hura desberdina zen, beldur handia sentitu nuen kirats horretan sartuko ote ninduten. Pentsatu nuen oraingoan ez nuela jasango. Berriro beren galderekin hasten ziren bitartean hor eduki ninduten; galdera haientzat erantzunik izan banu ere, nire goragaleek ez zidan utziko hitz egiten.

Biboteduna aurreratu egin zen momentu batean, eta intxaur-hauskailu bat erakutsi zidan; laguntzen ez banuen esku eta oinetako behatz guztiak lehertuko zizkidala mehatxu egin zidan. Botaka egin eta nazkari eusten saiatzea besterik ezin nuen egin. Nire eskuko hatz bat zanpatu zuen erremintaz; garrasi egin nuen minez, eta negarrez hasi nintzen. Gero behatz bat izan zen eta nire garrasiak ozenagoak izan ziren. Galdezka jarraitu zuten, ozenki, bortitz, baina erantzunik gabe jarraitzen nuen. Bat-batean bainuontziko likido nazkagarrian murgildu ninduten; ahoa zikinkeriaz betetzen zitzaidala sentitu nuen, eta nazka itolarria baino okerragoa izan zen. Atera nindutenean, aire pixka bat hartzen saiatu nintzen, baina gonbitoek eragotzi egiten zidaten. Berriro murgildu ninduten eta likido berde eta kirasduna irentsi nuen beste behin. Bigarren aldiz atera nindutenean, erlaxatu egin behar nuela pentsatu nuen, nazka kontrolatu, itolarria azkarra izan zedin lortu, eta konortea lehenbailehen gal nezan. Horrela bakarrik lortuko tormentua etetea, edo gutxienez bihotza geldiarazi eta oinazea amaitzea.

Urperatu ninduten hirugarren aldian lortu nuen; nire gihar guztiak lasaitu nituen eta jada ez nuen borrokatu nire bizitzaren alde, amore eman zezaten. Berehala atera ninduten, bihotzekoak eman zidala pentsatu zuten agian. Baina arnasa hartzen ari nintzela konturatu ziren bezain laster, berriro murgildu ninduten, bitan, hiru aldiz. Nire gogoa argi txiki bat zen, gero eta urrutiago ageri zena, hegan urruntzen zihoan ipurtargiaren argi bat, kandela bat bere metxa ketan akituz. Likido kirastuak berak ere ez zidan goragalerik sortzen jada; munstro haiek lehenbailehen bukatzea besterik ez nuen nahi. Orduan, atera nindutenean, ikusi zuten ez nuela arnasarik hartzen, eta sufrimenduarekin etetea erabaki zuten. Lurrean etzan ninduten eta bizkarrean kolpe batzuk sentitu nituen; bizitzara itzuli nintzen nire biriketatik zikinkeria guztia atera zenean.

Akuwamari, aurki nazazu, aurki nazazu galduta nagoen oihan honetan. Basapiztiez betetako oihan honetan. Ez utzi neskato honi oihan beldurgarri honetan jarraitzen. Zatoz, nire izena esango dizut, zuk zurea eman eta nire familiaren waipara itzuliko nauen bidea erakuts diezadazun. Zatoz eta nire aurretik hemen sufritu zuten guztien izenak esango dizkizut, zatoz eta etorkizunean sufrituko duten guztien izenak esango dizkizut. Ez utzi neskato honi horrelako oroimen gehiagorik gordetzen, ez utzi izan nintzen guztia erauzten ari zaidan oihan honetako oinazeetan agortzen. Etorri Akuwamari, etorri nigana.

# XX

1950eko hamarkadako Venezuela oparoa, Perez Jimenezen diktadura, petrolio-prezioen igoera, atzerriko enpresa garrantzitsuen inbertsioa eta azpiegitura handien eraikuntza ikusten zituena, goraldi betean zegoen ekonomia zen. Merkatu kotizatua eta goranzkoa zen, eta nazioarteko modaren marka handiek ere herrialde honi begiratzen zioten. Cristian Dior frantziarraren kasua izan zen, bere *top-model*ekin Venezuelara bidaia bat egitera iritsi zena, goi mailako joskintzako bere produktuak aurkezteko eta bertan kokatzeko aukerak ikusteko. 1954ko biran txundituta geratu zen Karibeko herrialdearekin, eta urte bereko irailean Boutique Cristian Dior inauguratu zen Caracaseko Francisco de Miranda etorbidean. Perez Jimenezen faborea zeukan burgesiaren hautazkoena joaten zen bertara haren produktuak erostera.

Monsieur Dior hain txundituta geratu omen zen Venezuelarekin, ezen bere diseinuetako batzuei "Caracas" edo "Venezuela" izena ipini baitzien, eta Venezuelako hiriburua ere erabili zuen bere bilduma berriak aurkezteko plaza gisa. Are gehiago, diseinatzailea Venezuelako materialez ere interesatu zen, hala nola eskualdeetako oihalez, bere bildumak egiteko.

Diorren ondoren goi-mailako joskintzako beste enpresa batzuk ere kokatu ziren Venezuelan. Yves Saint Laurenten kasua da, adibidez. Petrolio-boomak ematen zuen oparotasun ekonomikoak baina batez ere Venezuelako burgesia kutsatu zuen diru-xahutze alaiak erakarri zituen. Horrek, ordea, herritarren gainerakoa erabateko miserian eta utzikerian mantentzen zuen aldi berean.

1950etik aurrera, hiriburu txiki bat izateari utzi zion Caracasek, eta kutsu bohemio eta kosmopolitaren nahasketa zituen jai-erritmoa hartu zuen, batez ere gauetan azaleratzen zen jai--erritmoa. Bekatuzko talka egiten zuen horrek ordura arteko istorioarekin, baina beste aldera begiratzea onartzen zen, lehendik inposatutako modernitatearen mesedetan. Gaueko bizitzak eta gastronomiak garrantzi handia hartu zuten, garai bat definituz, klase aberatsenek eskatzen zuten bezala, gauak arinkeriaz, fantasiaz eta alaitasunez betez. 1936an hasitako konstante batean, pertsonaia ilun bat, Gilbert Pommier, Cayennen preso ohia eta Caracasen kokatzeko nortasun faltsua erabili zuena, ordura arte klase aberatsentzat eta gobernuari atxikitakoentzat esklusiboa zen sukaldaritza frantsesa jendarteratzen hasi zen.

Caracaseko erdigunean La Suisse jatetxea ireki zuen lehenik Pommierrek, eta hasieran sukaldaritza frantsesa eskaini zuen publiko zabalarentzat. Caracaseko gauaren izaera aldatzen joan zen pixkanaka, dantzak, musika eta nazioarteko ikuskizunak eskaintzen zituzten lokalak irekiz, Le Canari kasu. Baina batez ere xahutze giroa eskaintzen zitzaion burgesiari, arinkeria eta itxurakeria giro hori.

Klase dirudun eta ertaina izan ezik, Venezuelako herria ez zen modak inposatzen zituen lokaletara joaten. Aitzitik, jai herrikoirik garrantzitsuena inauteriek jarraitzen zuen izaten, koloniaren garaian hasitako festa bat alegia. Ur-borroketan lehiatzen zen jendea, eta kaleko dantzak egiten ziren, eta mozorrotutako parte-hartzaileek garai hartan amoraltzat jotzen ziren keinuak partekatzen zituzten. XVII. mendean, ospakizunari izaera paganoa kentzen saiatu zen Eliza, eta gobernuaren laguntzarekin erlijio-zeremonia bihurtu zuen, errezoak, arrosarioak eta prozesioak egiteko hiru egun ospatuz.

Baina Venezuelako herriak berehala berreskuratu zuen tradizioa, eta antzina urarekin egiten ziren borroka bortitzak kanpoan geratu arren, jaiaren alaitasunak berriro busti zuen Venezuelako geografia osoa. Perez Jimenezen diktaduran inauteriak ospatzen hasi zen burgesia ere, baina, klub eta hotel pribatuetan antolatzen zuen festa, herritik bereizteko. Beti nazioarteko musika taldeek girotuta egiten ziren ospakizun hauetara aberatsenak bakarrik sar zitezkeen.

Venezuelako herriak Inauteriak bere erara ospatzen jarraitu zuen dena den, eta mozorrotutako haurrek hartzen zuten bertan protagonismo nagusia. Jai herrikoietan tradizioa da inauterietako erregina aukeratzea komunitate bakoitzeko gazterik ederrenen artean, eta desfileek eta jaiek herrialde osoa hartzen dute punta batetik bestera. Garai horretan Karibeko hondartzetara joateko aprobetxatzen dituzte venezuelarrek ere jaiegun horiek, eta festak bukaezinak bihurtzen dira bertan.

1950eko hamarkadaren amaieran, inauterietako desfileetan, karrozak hasi ziren agertzen, beren kulturako hainbat elementu eta bere garaian puri-purian zeuden gaiak irudikatuz. Perez Jimenezen gobernuan, adibidez, orduan egiten ari ziren eraikin handiak irudikatzen zituzten karroza batzuek, eta baita herrialdearen historiarekin zerikusia zuten pertsonaiak ere, Guaicaipuro kazikea kasu. Karroza hauek mozorrotutako jendetzaren segizioarekin desfilatzen zuten hiri eta herrietako kale eta etorbideetan; milaka lagun izaten zituzten zain, musika bandak eta dantzariak lagun zituztela. Karrozak pasatzean, «hemen da!» oihukatzen zuten umeek, eta gozoki zaparrada bat jasotzen zuten berehala.

# XXI

Donostiako Real Sociedad Hipican jauzi-lehiaketa ospatzen zen egun horretan. Loiolako hipodromoa hiriko aberatsen eta Donostiako uda aprobetxatzen zuten turista ugarien artean galarik onenak janztea gustatzen zitzaion jende dotorez betetzen ari zen. Lehiakide guztiak militarrak ziren, urtearen zatirik handiena horrelako gertaeretarako entrenatzen ematen zuten zaldun trebeak, eta urteko hitzordu nagusietako bat bihurtua zen Donostia. Zaldunen familiez gain, herritarren artean zibil asko zeuden, hiriko edo inguruko herrietako familia aberatsetako kideak batez ere; beste batzuk probintzia desberdinetatik etorritakoak ziren, eta baita atzerritik etorritako gutxi batzuk ere. Baina, agintariak joaten ziren batik bat, zibilak zein militarrak. Horrelako egun eta ekimenetan, nazio espainiarra berretsi eta ospatu egiten zen, zaldizko ausart haien ordezkaritzaren bitartez; aberriaren zerbitzari arduratsuak eta beren onena ematen zutenak ziren, zaldiekin zuten maneiua erakutsiz. Hipodromoa Espainiako ehunka banderarekin apainduta zegoen, jakina, ekitaldia zein herrialdetan egiten zen argi gera zedin. Eta, era berean, aurreko egunetan izandako probokazioen aurkako erakustaldia ere bazen, gaizkile talde bat entseina nazionalak erretzera ausartu baitzen Gipuzkoako hiriburuko hainbat tokitan.

Egun hartan probintziako kargurik handienek eta agintarien ordezkariek ezin zuten huts egin horrelako ekitaldi batera. Jaime Font Andreu gotzaina zegoen lehenengo eta behin. Zaldiak eta zaldunak bedeinkatu zituen, eta publikoa, oro har, inaugurazio ekitaldi gisa. Gobernadore zibila zegoen, Manuel Valencia Remon falangista. Vicente Aguero ere bai, falangista eta Mugimen-

du Nazionaleko buruzagia, Gipuzkoako Foru Aldundiko lehendakari ere bazena. Nicolas Lasarte alkatea zegoen, Falangeko kide ez zen bakarra, eta nazionalismotik hurbil zegoela ere uste zena. Baina inork ez zion hori aurpegiratzen, mundu guztiak baitzekien Lasarte jaunaren ideologia bakarra dirua zela, eta diru berberak mugitzen zituela bere interes politiko eta pertsonal guztiak. Jainkoak agindu bezala zerbitzatzen bazion Erregimenari, zein sari hoberik aberastu edo enpresari arrakastatsu eta Billabonako lehen paper-industrien jabe izatea lortzea baino? Gainera, mundu guztia pozik sentitzen zen ekitaldietan parte hartzeagatik. Azken finean, Lasarte jaunaren negozio asko oso onuragarriak ziren bertan zeuden beste agintarien interesentzat. Agintari militarren artean, nabarmenak ziren probintziako gobernadore militarra eta Loiolako kuarteleko komandantea, beraien goragoko ofizial guztiekin batera, Guardia Zibilaren eta hainbat poliziaren (Brigada Politiko Soziala eta Polizia Armatua, esaterako) arduradunak.

Jantzi tipikoekin haur batzuek euskal dantzak eginez ekitaldiari hasiera ematen zioten bitartean, Lopez Arrimadas kapitaina bere kabuz mugitzen zen, deseroso, ez baitzen ekitaldi publikoetan parte hartzearen oso zalea. Are gutxiago agintari guztiak puntu bakar batean biltzen zirenean eta bera arduratzen zenean guztien segurtasuna zaintzeaz. Bazekien partehartzaile bakoitzari, zibil eta militarrei, bere bizkar zainak laguntzen ziola ekitaldiaren segurtasunerako, gau eta egun jarraitzen baitzieten. Baina bazekien masa-pilaketetan beti zegoela arrisku bat, eta eremu osoa hartzen zuen operatibo bat antolatua zuen, sarbideetan zein hipodromoaren ondoko eremuetan Polizia Armatuaren efektibo asko jarriz. Ez zegoen arrisku aitorturik, baina haren betebeharra edozein gorabeherari aurrea hartzea zen, Espainiaren etsairen bat etorri eta arazoak sor ez zitzan.

armatuko ibilgailu ofizial bat ere bazekarrena. Arriskuak hartzea baldin bazen kontua, denak hartuko ziren behingoz. Irungo operazioak sortuko zuen zalapartarekin, komandanteak Lopez Arrimadas kapitainari eskatzen zion Venezuelako atxilotua polizia-etxean BPSaren atzaparretatik erreskatatzeko modua bilatzeko eta berari entregatzeko. Agente bat eta ibilgailu ofiziala bidaltzen zizkion behar zuen moduan mugitzeko eta emakumea bere zaintzapean jartzeko, Venezuelako kontsularekin batera atxilotuarekin zer egin erabaki arte.

Hasieran erokeria zela pentsatu zuen kapitainak. BPSari kamioiaren kontua gaizki ateraz gero, eta Venezuelako atxilotua ere bat-batean desagertzen bazen komisariatik, erotu egingo zirela eta norbaitek ondorioak ordainduko zituela. Lehenik eta behin, ondorio horiek zuzenean beregan eroriko ote ziren beldur izan zen. Baina, segundo batzuetan pentsatu ondoren, konturatu zen bere bizitzako aukera zela arazo hartatik airoso ateratzeko; BPSari mendeku hartu ondoren airoso irteteko batez ere, eta hori nahikoa gustatu zitzaion. Bi kolpe gogor izango ziren; bietan nabarmena zen bere inplikazioa, eta bietatik garbi aterako zen, haur bainatu berri bat bezala. Irunen, Guardia Zibilaren indarrek bakarrik esku hartuko zuten; edozer gerta zitekeen eta kanpoan geratuko zen. Venezuelarrari zegokionez, Guardia Zibilaren operazio gisa ikusarazi behar zen dena. Atxilotua bere zaintzapean geratuko zen azken batean, eta agente bat eta ibilgailu ofizial bat edukitzeak berari erabat arrotza zitzaion mugimendu gisa utz zezakeen. Gau hartan eta hurrengo goizean polizia-etxean zein agente zeuden ondo aukeratzea nahikoa zen, eta guardia zibilen ibilgailua une oro erabiltzea, polizia armaturik ager ez zedin tartean. Behingoz, BPSekoak izorratuta zeuden.

Aukeratuta zeuzkan behar zituen gizonak, une oro nagusien mugimenduen sekretua gordeko zutenak, Rodriguez sarjentua eta Valencia kaboa. Haiek arduratuko ziren gau hartan komisarian lo egin behar zuten bi poliziak diskretuak izateaz. Guardia zibilaren bisita jaso bezain laster, bere bulegora deitu zituen biak, etorri berria aurkeztu zien, eta hurrengo orduetan eskuartean zuten edozein auzi bertan behera uzteko agindu zien, behar zenerako prest eta bertan egon zitezen. Biek onartu zuten, bai baitzekiten beren gainekoak izaten zituen abentura estra-ofizialetan ongi sarituak ateratzen zirela beti. Soilik espero zen gauean komisarian geratu ohi ziren BPSeko bi kideak despistatzea Morales komandantearen operatiboaz zerbait jakin bezain laster, venezuelarra komisariatik ateratzeko aukera izan zezaten.

Lopez Arrimadas kapitainak espero zuen, bestalde, kamioiko gidariak berari ezer ez gertatu gabe ihes egitea lortzea, edo zaurituta ez suertatzea, gutxienez. Morales komandanteari ez zion ezer kontatu kontrabandoaren informazio-iturriari buruz, eta gogoratzen zuen proxenetari hitz eman ziola ez zitzaiola ezer gertatuko bere senideari. Guardia Zibila izango zenez operatiboa egingo zuena, berak ezer ez zekiela alegatu ahal izango zuen beti. Eta, gidaria atxilotu eta espetxeratzen bazuten, mafiosoak arduratuko ziren kartzelan laguntza emateaz, denbora gutxian libratuko baitzen segur aski. Mutur guztiak lotuta zeudela pentsatu zuen, eta gertakizunak ahalik eta ondoen gertatzea besterik ez zuen espero. Gau luzea izango zen, eta, hura arintzeko, Valencia kaboari eskatu zion komisaria ondoko jatetxera joateko lauentzat afaria, bi botila ardo eta zigarro batzuk ekartzera. Autoa komisaria barruko patioan aparkatzeko ere agindu zion guardia zibilari, haren presentziari buruzko galderak egin zitzakeen begirada mesfidatietatik urrun egon zedin gau hartan.

Gau luzea izan zen, afariak, ardoak eta zigarroen keak arindua. Baina Morales komandantea puntuala izan zen, eta hurrengo goizeko seiak eta hogeian kapitainaren bulegora deitu zuen operazioaren azken berriei buruzko informazioa emateko. Kamioia eta gidaria atxilotu zituzten. Gidaria onik atera zen, nahiz eta kolpe batzuk hartu kamioia iraultzean. Kontrabandoaren zamari buruz ezin zen gauza bera esan, likore-botilak baitziren, eta gehienak erori eta hautsi egin ziren gidaria ihes egiten saiatu eta guardia zibilek kamioiaren pneumatikoei tiro egin behar izan zietenean. Ondorioz, ibilgailua irauli egin zen. Zorionez, guardia zibiletako inor ez zen zauritu. Baina ezin zen gauza bera esan eskolta gisa ziharduten BPSeko bi poliziei buruz. Haiek ere operatibotik ihes egiten saiatu ziren, eta ihesean tiro egin zuten militarren aurka. Guardia zibilek defendatzeko erantzun eta bi poliziak larri zaurituta gertatu ziren. Poliziak zirela ohartzean, guardia zibilek beraiek eraman zituzten Irungo ospitale batera ahalik eta azkarren, bertan ingresatuta gelditzeko. Komandanteak esan zion, halaber, ahal izan bezain laster Irungo kuartelera joan zela bere bulegora deitzeko, ez baitzuen ibilgailuaren irratitik egin nahi izan, komunikazioa behar ez zuenak entzun ez zezan. Venezuelako atxilotua komisariatik ateratzea behingoz martxan jar zezan dei egiten zion, eta ahalik lasterren dei ziezaion non entregatu behar zuen adosteko. Era berean, atxilotua mugitzeko uneoro Guardia Zibilaren ibilgailua erabiltzeko aholkatu zion, noizbait BPSeko agenteekin ika-mika gertatuta ere.

Morales komandantearen deia jaso eta gutxira, komisarian zeuden BPSeko poliziek beren kanaletatik jaso zituzten berriak; ez zuten hamabost minutu baino gehiago itxaron behar izan bi agenteen oihuak entzuteko sarrerako bi polizia armatuei kaleko atea irekitzeko aginduz. Biak ibilgailu batera igo ziren eta artean guztiz esnatu gabeko kaleetako zaraten artean galdu zen automobilaren motorraren hotsa.

Ekiteko unea zen, eta halaxe agindu zien bere gizonei. Atxilotuak ziegetan atxikitzeko BPSak erabiltzen zuen komisariaren sotora jaitsi behar zuten. Polizia Armatuarekin partekatutako espazio bat zen, baina zati bat baino ez, burdinazko ate sendo batek beste ziegetatik banandua, BPSekoak bakarrik sar zitezkeelako hara. Behin sarrerako mekanismoa konpontzera etorri zen sarrailagile bati esker lortu zuen giltzaren kopia bat, zorionez. Atea ireki eta korridorera sartu ziren; zortzi ziegatako ateak ikusi zituzten, sarraila soil banarekin irekitzen zirenak. Lehenengo hiru ziegak hutsik zeuden. Hurrengo ziega batean gizon heldu bat aurkitu zuten etzalekuan; begiak ireki zituen atetik argia sartu zenean, eta ez zuen ezer esateko indarrik ere izan, berriro galdekatuko ote zuten beldurrez. Beste batean bi gizon gazte zeuden, tratu txarrak jasan zituztenak, bata besteari kateatuta eta pixaz eta odolez lohitutako zoru biluzian etzanda. Argia ziegan sartu zenean, gazteena zirudienak zotinka ziegako bazter batera alde egin nahi izan zuen, eta ezer gehiago ez zekiela esan zuen, baina ezin zen mugitu, konorterik gabe zegoen ziega-kidearen pisuak eragozten baitzion. Beste ziega batean emakume zahar bat zegoen, biluzik, porlanezko ohe gogorrean eserita. Ez zuen ezer esan sartu zirenean, nahiz eta eurentzat harrigarria izan hura aurkitzea. Buruan kolpe handia emana zioten; bekokitik odola zerion bular aldera, baina emakumeak ez zuen ezer esan, ez zirudien haien beldur zenik; gorroto handia adierazten zuen aurpegieraz baino ez zien begiratzen. Gainerako ziegak hutsik zeuden; venezuelarra ez zegoen han, goian egon behar zuen, bulegoren batean.

Han egon zirela inork susma ez zezan burdinazko atea itxi eta eskailerak igo zituzten korrika, bigarren solairurantz, BPSak bulegoak zituen tokirantz. Lehenengoan ez zuten ezer aurkitu, eta tentuz mugitu ziren, komisariako leku debekatua baitzen, eta gutxi batzuk bakarrik sar zitezkeen bertara. Zorionez, Irun-

go albisteen berri izatean lankideen deira joateko izan zuten presarekin, guardiako bi BPSek ahaztu egin zuten beren instalazio guztietarako sarrera ematen zuen ate nagusia ixtea. Lopez Arribasena zirudien bulego txiki batean, paretan haren jaka bat zegoen eskegita; bi gizon gazte ere bazeuden, biluzik, sabaiari gako sendo batez lotutako soka batzuetan besoetatik zintzilik. Bat negarrez hasi zen beren presentzia sentitu bezain laster. Gorputz osoa kolpatua zuen eta erredura elektrikoen markak ere argi ikusten zitzaizkion; bizkarra zauriz beteta zeukan, zartailu batez jo izan balute bezala, zauri askorekin irekita. Besteak, berriz, ez zirudien mugitzen zenik, eta ez zuen soinurik atera. Ez zegoen denbora galtzerik, emakumea aurkitu beharra zegoen, ezin zuten arreta galdu gizon hura bizirik ala hilda zegoen jakiteko. Valencia kaboa izan zen neska aurkitu zuena; itzalita bezala geratu zen aurkitu zuen izugarrikeriengatik. Oso gaizki egon behar zuen pertsona batek Valencia kaboa txundi zedin.

Manzanasen bulegoa zen, paretan hainbat koadro baitzeuden eskegita kondekorazioekin, eta baita Espainiako bandera bat ere. Mahai gainean zaldiekin erabiltzeko zartailu bat zegoen, beste gelan zintzilik zeuden bi gizonak zigortzeko erabiliak dudarik gabe. Elektrizitatearen makina ere bazegoen bere kableekin izkina batean. Rodriguez sarjentuak idazmahaiaren ondoko zurezko armairua ireki zuen, jakin minez; edozer gauza egotea espero zitekeen, eta tamaina eta egitura guztietako borrak, eskuburdinak eta tamaina guztietako girgiluak ikusi zituen, eta kaskoaren antzeko aparatu bat, torlojuduna eta azkoinarekin. Jainkoak jakin nola erabiliko zuen Manzanasek. Aurkitu zuen lehen atea zeharkatu eta dutxa eta komon bat zituen bainugela zen; burdinazko ohatila estiloko aulki bat zegoen lurrari lotuta, eta bere besoetatik burdinazko gerriko batzuk zintzilik beren belarriekin. Atzealdean bainuontzia zegoen, eta hurbiltzean

barruko likidoren usainak eskuaz sudurra estaltzera behartu zuen, jasanezina baitzen. Ez zegoen inor. Irten eta beste ate bat bilatu zuen.

Emakumea bulego ondoko bazter batean zegoen, dutxa gelaren ondoan, trastetegia zirudien toki batean. Han zegoen neska, edo neskari hondakinak behintzat. Ateraino hurbiltzean jasanezina zen kiratsa; gorotz, pixa, izerdi eta odolaren nahasketak ez zuen arnasarik hartzen uzten. Lurrean etzanda zegoen atxilotua, biluzik, bere hondakin guztietan bilduta, konorterik gabe. Hilda zegoela uste izan zuten aurrena. Rodriguez izan zen ukitzera hurbildu zen lehena, guardia zibilak bezperako afaria Manzanasen bulegoaren erdian oka egiten zuen bitartean. Eskumuturrean hartu zion pultsua, eta oraindik bizirik zegoela adierazi zuen buru-keinuz. Baina ez zen luzaroan izango; ezin zuten horrela eraman Morales komandantearen aurrera; arreta medikoa behar zuen.

Beste bulego batean aurkitutako manta batekin iritsi zen Valencia kaboa. Denak hurbildu ziren emakumea bildu eta handik ateratzeko laguntzera. Gorputzari buelta ematean ikusi zuen zer egina zioten. Bere sexutik odola zerion oraindik; auskalo zerekin bortxatuko zuten. Ilea odolez eta hondakinez lohituta zeukan, lehor eta itsaskor; gorputz osoa ubelduta zuen eta elektrizitatez errea. Zigarroen erredura zantzuak zeuzkan, kolpeen aztarnak nonahi, labanaren batekin egindako ebakitzeak bular, hanka eta ipurmasailetan, aurpegia handitua kolpeen ondorioz... Emakume hark ezingo zuen luzaroan bizirik iraun.

Mantan biltzea lortu zutenean, Rodriguez sarjentuak bizkarrean har zezan lagundu zioten besteek, eta beheko solairura eramaten zuen itzulerako bideari ekin zioten. Oinez zihoazela, Lopez Arrimadas kapitainak pentsatzen zuen zein ote zen egin zitekeen gauzarik onena. Ezin zuen emakumea Irunera Guardia

Zibilaren autoan eraman, baina komisariatik horrela atera behar zuten, norbaitek ikusita ere. Ospitalera eraman behar zuten; berak ez zion hildako bat eman nahi Morales komandanteari. Bi auto beharko zituzten; venezuelarra guardia zibilenean atera eta gero beste kamuflatu batera aldatuko zuten, eta Arantzazuko Andra Mariaren Egoitzara eraman. Han larrialdietako sarreran utziko zuten. Norbaitek ikusiko zuen paketea eta berehala artatuko zuten. Bitartean, guardia zibila bere autoarekin joango zen Irunera, eta non utzi zuten jakinaren gainean jarriko zuen bere nagusia, beharrezko neurriak har zitzan. Venezuelako kontsulari abisatu ahalko zion eta biek erabaki zezatela suspertu ondoren nola atera ospitaletik. Ez zuen nahi bere nagusien aurrean zipriztindurik, are gutxiago BPSekoen aurrean.

Guardia Zibilaren ibilgailua zegoen patiora iristea erraza izan zen; goizalde hartan guardian zeuden polizia armatuak etxolan zeuden erdi lo, bi BPSekoek arestian modu txarrean emandako aginduekin oraindik haserre. Emakumea atzeko eserlekuan etzanda ibilgailura igo zuten, kanpotik ez ikusteko moduan. Guardia zibila pilotu zihoan eta bera laguntzaile, eta Rodriguezi eta Valentziari agindu zien hurbiletik jarraitzeko beste auto kamuflatu batean. Kaleko atera hurbildu zirenean berehala ireki zieten bi poliziek, kapitaina zela eta beste ibilgailuan sarjentua eta kaboa zihoazela ikusi zutenean. Kalean zirela, minutu batzuk joan ziren inor ez zebilen leku bat aurkitu arte. Orduan, kapitainak gelditzeko agindu zion guardia zibilari, eta autotik jaitsi zen, beste biei ere gelditzeko keinua eginez, eta emakumea autoz aldatzeko agindu zien. Ondoren guardia zibilari esan zion berehala joan zedila bere ofizialarengana eta esan ziezaiola atxilotua komisariatik atera ahal izan zutela, baina haren osasun-egoeragatik Arantzazuko Andre Mariaren Osasun Egoitzara eraman zutela. Hortik aurrera berak erabaki zezala zer egin, bere parteak jada betea zuela.

Donostiako Osasun Egoitzako larrialdietako sarreraren aurrean, erizain bat zegoen egunsenti ateri hartako airea arnasten. Gau gogorra izan zen, eta arnasa behar zuen etxera itzuli arte zenbait ordu geratzen zitzaizkiola jakinda. Orduan iritsi zen sarreratik berrogeita hamar bat metrora aparkatu zuen auto beltza. Hiru gizon jaitsi eta atzeko ateak ireki zituzten. Fardel bat hartu zuten manta bat zirudienean bilduta. Espaloian utzi zuten, eta berehala igo ziren berriro autora, abiada bizian abiatuta urrunduz. Urrundu ahala, behin baino gehiagotan bozina jo zuten, ospitale barruan kontura zitezen lan gehiago eraman ziela norbaitek. Autoa urruntzen ikusi zuen erizainak; itxura batera poliziak zirela esango zukeen. Haiek utzitako fardelera hurbildu eta makurtu egin zen manta ireki ahal izateko. Emakume baten gorputza ikusi zuen, trapu egina, odoletan, zikin eta biluzik. Korrika joan zen egoitza barrura laguntza bila.

Musikak jotzen jarraitzen du, bezero gehienak joanak dira. Seigarren kopa da eta zerbitzariak beste bat zerbitzatzeko astia izatea espero du kapitainak. Gaurkoa ez da edozein egun izan; lehenbailehen ahaztea merezi duen horietakoa izan da, oroitzapen onik uzten ez duten horietakoa. Egun batzuek mereziko lukete behin baino gehiagotan hastea, nahiz eta iritsi ahala lehen aldian baino askoz txarragoak bihurtu. Beti bakardade berean bizitzea da okerrena, beti arrotza izango den egoeran, zauden lekuan zaudela. Begiradari ihes egiten dion norbait, beldurra ematen duelako; polizien begiradek beti inposatzen duten beldurra. BPSeko ziegetan atxilotuen aurpegietan ikusi duen beldurra, guardia zibil gazte baten ikara-aurpegia, haiek bezalako gizonak zer egiteko gai diren oraindik ez dakiena, ematen dituzten aginduen mende baitago dena. Bere zeldatik bizirik aterako ote den ez dakien jende hondatu hori guztia, entzuten duen

zarata bakoitzaren beldur dena, hurrengo galdeketaren ordua iritsi dela pentsatuz. Argitik ezkutatzen den jendea, badakielako argiarekin atzaparrak iristen zaizkiola eta beren gorputza txikitzen jarraituko dutela, kako batetik zintzilikatuko dutela azienda desobeditzailea bezala astintzeko, eta aulki batera lotuko dutela haragia erretzeko, edo zikinkeria nazkagarrienean murgilduko dutela birikak urperatzeko. Izan dezaketen informazioa ateratzea ez da garrantzitsua, polizioi balio digun arren haiek bezalako beste batzuk harrapatzeko. Ez, ordena-kontu bat da; beldur izatea guk ordezkatzen dugun autoritatera ez makurtuko, legeak eta arauak ez errespetatzeko. Autoritatea gara orain, hiltzailea Jainko bihurtzen duen diktadura honetan, gehien hil eta gehien kolpatu duen aginte honetan. Eta kanpoan salatzen dituzte gure moduak, esaten dute ez garela demokratikoak eta ez ditugula giza eskubideak errespetatzen. Baina egunen batean demokrazia iritsiko da, beti irabazten dutenentzat onuragarria izango den egunean, eta berberak izango gara, ezartzen dugun autoritateak beldurra erabiltzen jarraituko du gainerakoak menderatzeko. Formak, metodoak, mezuak, aurpegiak eta uniformeak aldatuko dituzte, baina guk berdinak izaten jarraituko dugu. Gure moduak agian leunagoak izango dira, ez dugu mundua hilotzez ereiten ibili beharko, eta sotilagoak izaten ikasiko dugu, ahalegin txikiagoz gauza bera lortzen.

Eta hala ere, eskua joaten zaigunean, gure metodoek norbait lehertuko dutenean, gure egoitzetan edozeini bihotz taupadak itzaltzen zaizkionean, beti izango dugu gure nagusien babesa. Ofizialak, epaileak edo politikariak, gu gabe ezer ez direla dakitenak, beren interesak babesten dituen hesi bihurtu baikara galtzeko ezer ez eta irabazteko dena duen jendearen matxinada eta iraultzen aurrean. Horregatik babesten gaituzte, gure erritmoan lan egiten uzten digute, opariekin eta kondekorazioekin mimatzen gaituzte, usteltzen garenean beste aldera

begiratzen dute. Beren legeekin zigorgabe bihurtzen gaituzte, badakitelako egunen batean huts egiten badugu haien denbora amaitu egingo dela. Zer alde dago nik venezuelarrari egin nionaren eta BPSekoek egin diotenaren artean? Ezer ez, nik torturatu nuen zetazko eskularruarekin, estutu nahi izan nuenean estutu egin nuen eta hala ere ez nuen inolako emaitzarik lortu; espero zen fruitua eman ez zuen negozio bat. BPSak txikitu egin zuen, bere metodorik ikaragarrienak erabili zituen, baina emaitza berbera da; ez dugu lortu nahi genuena, ez haiek eta ez nik. Edo emakumeak ez daki ezer, edo burdinazko emakumea da; aski da ikustea nola utzi dugun denon artean. Baina ez dago ezeren konturik eskatzerik; laneko akats bat edozeinek dauka, gauza desberdin bakarra da gure lanean akatsek bizitzak eramaten dituztela.

Baina alferrikako bizitzak dira, axola duen ezeren kontzientziarik gabe biziko diren bizitzak. Guk beti jarraituko dugu, diktadura baten zutabeak izango gara, edo ezarritako ordena defendatzen duten polizia instituzionalak. Baina hor egongo gara beti, zor diguten izugarrikeriarekin, Estatuaren beraren zentzua besterik ez baita beti lagun dugun izugarrikeria hori. Gu bezalako munstroak sortzea axola ez zaion Estatuaren zentzua da, Manzanas eta bere psikopatak bezalakoak sortzea axola ez zaion Estatuarena. Dena amortizatzen baita ustezko onura komun baten mesedetan, agintzen eta boterea duenaren ustezko onura komunaren mesedetan.

# XXV

Azkenean Pancorboko haitzartea zeharkatu zutenean, Braulio Sifontes kontsulak zigarro bat piztu eta autoko leihatila ireki zuen gidariari enbarazurik ez egiteko. Haien aurrean Gaztelako lautada hori eta mugagabeak hasten ziren eta haran berdeak atzera geratzen. Beti iruditu izan zitzaion leku hura muga naturala zela, bi mundu bereizten zituena; ez, ordea, natura apetatsuak harkaitz eta mendi-pasabide horiekin hesi bat sortu zuelako berdearen eta horiaren artean, geografiak ere guztiz definitzen zuelako baizik alde batera edo bestera bizi zen jendearen izaera. Ez zen leku horretatik igarotzen zen lehen aldia; artean atsegin handiz gogoratzen zuen Errioxara egin zuen bisita, Enbaxadako langile bat bertako neska batekin ezkondu zelako Harora gonbidatu zutenean. Gogoan zuen elizkizuna han ospatu zela, eta oturuntza ez zuen inoiz ahaztuko. Lastima zen orain gelditu eta inguruko ardoak berriro dastatu ezin izatea, bakailaoa errioxar erara janaz, edo piper perretxikoz beteak, edo arkume-txuletak xirmendutan erreak. Ezin ziren gelditu; misioaren larritasuna begien bistan zegoen eta Madrilera lehenbailehen iritsi nahi zuen, agian inoizko aferarik delikatuena konpontzeko. Pasabidea zeharkatzean seguruago sentitu zen; ez zekien zergatik, baina uste zuen muga natural horrek arriskuak ere atzera uzten zituela, atzera geratzen zirela dena zapuzteko arriskuak, poliziaren batek anbulantzian zekartena erreklamatzea, esaterako. Uste zuen zailena egina zegoela; orain Madrilera iritsi eta Barajasko aireportura lehenbailehen eramatea zen kontua, emakumea Venezuelara itzultzea haren zain egongo zen Iposteleko hegazkinean, enbaxadak maleta diplomatikoak garraiatzeko erabiltzen zuen hegazkin berean.

Guerrero Rosales enbaxadorearen erabakia izan zen, eta berak egokitzat jotzen zuen Espainiako agintariekin arazo gehiago ez izateko, hegazkin ofizialak baimentzen zuen immunitate diplomatikoa emateko neskari. Ofiziala zen, halaber, bera eta enbaxadak bidalitako gidaria zihoazen autoa, haien atzean zetorren anbulantziari eskolta ematen ziona. Anbulantzian emakumea zihoan, gidaria eta erizain batekin. Bi ibilgailuak enbaxadoreak bidali zituen Madrildik Donostiara, berak neska berreskuratu zuela baina haren osasun egoera larriagatik edozein autotan ezin izango zuela bidaiatu esan zionean. Orduan erabaki zuen Guerrero Rosales enbaxadoreak bi ibilgailuak bidaltzea.

Zigarroaren kea bizkor irteten zen leihatilatik kanpoko airearekin nahastuz, eta azken orduetan gertatutakoak nola kateatu ziren pentsatzen ari zen kontsula. Bazekien Morales komandantea gaiaren gainean zela, baina denboraren joanak, eta Donostiako komisaldegian albisterik eta babesik jaso ez izanak batez ere, okerrena pentsarazi zioten. Gai hura inoiz ez zuela konponduko alegia, eta venezuelarraren desagerpena Espainia frankista hartan arrastorik utzi gabe desagertzen ziren pertsonen beste kasu bat izango zela. Hasieratik hartu zuen kontutan aukera hori, zer gertatu zen ez jakitea, artxibatutako salaketa batean geratzea dena eta konponbiderik ez izatea, eta neskari benetan zer gertatu zitzaion ez jakitearen larritasunarekin geratzea familiakoak.

Atzetik zetorren anbulantziako emakumea birrinduta baina bizirik zegoela pentsatzeak suspertu egiten zion gogoa, askotan pentsatu baitzuen ezinezkoa izango zela. Oraindik ez zion ezer jakinarazi familiari; lehenago Madrilera iritsi behar zen, eta Iposteleko hegaldian aireratzea espero zuen. Hegazkina aireratu eta atzera egiteko arriskurik ez zegoenean deituko zion familiari; erabat ziur egon nahi zuen. Neskaren osasun egoeraz

zerbait esan edo ez, zalantzan zegoen. Bizirik zegoela jakitearen poza ez zien galarazi nahi. Donostiako ospitalean jakin zuen apurrari buruz, erizain batek isilpean eman zizkion xehetasunei buruz, ez zien ezer esango. Hobe zen haien lehen erreakzioa alaitasuna izatea, Venezuelako agintariak arduratuko baitziren gero xehetasunez eta beharrezko mediku-arreta emateaz.

Goizeko zortzietan deitu zion Morales komandanteak ostatu hartuta zegoen hotelera; emakume venezuelarra Arantzazuko Andre Mariaren Egoitzan zegoela esan zion, eta han larrialdietan sartu zutela. Komandanteak jakinarazi zion bi guardia zibil bidali zituela emakumea babesteko, eta beste polizia-talde bateko ezein kidek berriro atxilotzeko asmorik izan ez zezan batez ere. Ospitalera lehenbailehen joateko eskatzen zion, neskaz arduratzeko eta Espainiatik ahalik eta lasterren ihes egiteko mugitu behar zuena mugitzeko; eskandalu diplomatiko bat gertatu aurretik denbora laburra zutela. Esan zion, baita ere, bere osasun egoera delikatua zela; ospitalizatua egon beharko zukeela, baina hori ezinezkoa zela, ebakuazioa ezinbestekoa baitzen egoera are gehiago ez okertzeko. Gaineratu zion Arantzazuko Andre Mariaren Egoitzara bidalitako guardia zibilek berak idatzitako igaro-baimen bat emango ziotela, Madrilerako bidean inolako arazorik izan ez zezan. Pentsatzen baitzuen leku horretara eramango zuela Venezuelara zihoan hegazkinen batera igotzeko.

Berehala iritsi zen egoitzara kontsula. Emakumea zegoen gela zaintzen zeuden bi guardia zibilak aurkitu zituen; Morales komandantearen agiria eman bai, baina ez zioten utzi venezuelarra ikustera sartzen. Bere protesta guztiak alferrik izan ziren; nagusiarengandik jasotako agindua zela esanez justifikatu ziren. Emakumea artatu zuen medikuarekin hitz egiten saiatu zen, haren egoeraz eta ospitalera nola iritsi zen jakiteko, baina solairuko

medikuak uko egin zion erantzuteari. Guerrero Rosales enbaxadoreari deitu zion orduan, eta nobedadeen berri eman zion. Honek, entzun ondoren, enbaxadako auto ofiziala eta erizain batekin anbulantzia bidaltzea erabaki zuen, Madrilera ahalik eta azkarren eraman zezan. Egoitzako zuzendariarekin hitz egin nahi izan zuen; karrerako militarra omen, lanaren eta beste hainbat aitzakiaren ondoren, bere bulegoan hartu zuen hark. Baina ez zion inolako informaziorik eman. Aitzitik, emakumea ahalik eta lasterren ateratzeko gomendatu zion; aukerak ez zirela betiko, eta ez zezala sudurrik sartu komeni ez zitzaion lekuan.

Eztabaida laburra baina latza izan zen. Kontsulak ospitaleratuaren mediku-agiria emateko eskatu zion, haren osasun-egoera ezagutu behar zuelako lekualdaketa egiteko. Zuzendariak mehatxu batekin erantzun zion, argi eta garbi, kontsulak salaketa bat jartzeko aukera planteatu zuenean: «Eraman ezazu lehenbailehen, zeuk ere berarekin batera hemen geratu nahi ez baduzu». Atzerritarra zelako mespretxu nabarmena erakusten zion une oro.

Guardia zibilek gela zaintzen zeuden tokira itzuli zen, baina ez zen berriro saiatu neska ikusten uzteko haiek konbentzitzen. Korridoreko banku batean eseri zen, enbaxadak bidalitako ibilgailuak lehenbailehen irits zitezen desiratuz. Ordu batzuk igaroko ziren, Madrildik zetozelako; oso azkar bidaiatu arren denbora asko behar zuten. Eserita jarraitu zuen gela zaintzen; behin eta berriz irakurri zuen komandantearen agiria, Venezuelako gobernuaren ordezkariari baimena ematen ziona lurralde nazionalean ibiltzeko, bere herrikide gaixo bat Madrilera eramateko. Dokumentuan, halaber, polizia eta militarren agintariei eskatzen zitzaien ahalik eta ondoen laguntzeko lekualdaketa arrakastaz egiten. Begiradaz jarraitu zituen mediku eta erizainen mugimenduak. Gaixoak artatu ondoren, geletan sar-

tu-irtenak egiten edo beren zereginei buruz hizketan jarduten ziren. Denak konturatzen ziren bera han zegoela, eta zeharka begiratzen zioten, edo ahapeka txutxu-mutxuka aritzen. Enbaxadako ibilgailuak iristear zeudela uste zuenean, lau ordu eta erdiko itxaronaldia zeramanean, erizain bat hurbildu zitzaion kafea eskaintzera. Kafea eskaintzen zion bitartean, Guardia zibilei bizkarra emanez jarri eta behera jaisteko keinua egin zion. Ez zion ulertu zer esan nahi zion; erizainak hain ahots apalez hitz egin zion, ia ezin izan baitzion entzun. Egoitzako irteerako atean zegoen lankide batengana joatea nahi zuen, eta zegoen lekutik mugitzeko zigarro bat erretzera irteteko aitzakia ematea aholkatu zion.

Beheko solairura jaitsi eta irteerako atea bilatu zuen. Jende asko zegoen han ordu horretan. Sartzen edo irteten ziren pertsonak, gaixoei bisita egitera edo mediku-kontsultaren batera iristen zen jendea izan zitezkeen. Baita txandetan sartzen edo handik irteten ziren medikuak eta erizainak ere. Izkina batean, landaredun lorontzi handi baten ondoan, erizainez jantzitako emakume heldu batek keinu egin zion hurbiltzeko. Berehala kontatu zion zekiena, baina ez zion alde guztietara begiratzeari utzi, norbaitek atzerriko kontsularekin hitz egiten harrapatzen bazuen errepresaliak jasateko beldurrez seguru asko. Neska goizeko seiak pasata abandonatu zuten larrialdietako sarreran. Poliziak erabiltzen duen auto beltz handi batean iritsi ziren hiru gizon; manta batean bilduta ekarri zuten eta espaloian utzi. Gero azkar joan ziren. Ordu horretan airea hartzen ari zen lagun batek aurkitu eta laguntza bilatu zuen. Hasiera batean larrialdietara eraman zuten bere egoera zela-eta; ikaragarria zen emakume horrekin egin zutena. Lehenik garbitu egin zuten, zikinkeriaz estalia baitzegoen. Ikaragarria zen. Medikuek berehala ikusi zuten baginan odoljarioa zuela, eta hainbat jostura-puntu eman behar izan zizkioten zauria ixteko.

Erizaina ikaratu egiten zen kontatzen zuenean, bortxatu eta tratu txarrak jasan zituzten emakumeen zenbait kasu ikusi zituela esaten zuen, baina inoiz ez horrelako munstrokeriarik. Medikuak beldur ziren barne-odoljarioa izango ote zuen, eta, beraz, zainketa intentsiboetan sartzea gomendatu zuten, baina zuzendariak uko egin zion une oro, eta solairuko gela batera eraman behar izan zuten. Emakumea erabat deshidratatuta zegoenez, disoluzio bat jarri zioten, tantaka, seruma eta mineralak, antibiotikoekin nahastuta. Izan ere, bortxatua izateaz gain, gorputz osoan erredurak zeuzkan, elektrizitatez eta zigarroz egindakoak antza; bularretan, hanketan eta ipurmasailetan ebakiak zituen, gorputz osoan kolpeen ubeldurak, eta bazitekeen biriketan ere zerbait egotea, eztulak eta mukiek eta arnastean egiten zuen zaratak adierazten baitzuten putzu eginda zeuzkala. Kontsulari informazioa ematean negar egiten zuen erizainak, horrelakorik sekula ez zuela ikusi esanez. Gero, ingurura begiratzeari utzi gabe, agur esan gabe, berriro egoitzara sartu zen lanera.

Azkenean, ibilgailuak Madrildik iritsi zirenean, neska ikusi ahal izan zuen kontsulak, guardia zibilek zaintzen zuten gelatik atera zutenean. Tapakiek estalitako ohean etzanda, ez zitzaion gorputzeko ezer antzematen, baina aurpegia more-morea zuen, handitua, eta masailetan hainbat orbain zituen. Erizainek emandako lasaigarrien eraginez lo zegoen, artean serum-botila bati lotuta, baina aurpegi lasaia zuen, sufritzeari jada utzi izan balio bezala. Anbulantziara igo zuten eta xingola batzuekin eutsi zioten, bideko bibrazioekin mugi ez zedin. Madrildik etorri berria zen erizainak burko bat egokitu zion buru azpian eta serum-botila zintzilikatu zuen ohatilan. Anbulantzia prest zegoenean, bi ibilgailuak Madrilerako bidean abiatu ziren. Egoitzako atean jendea elkartu zen segizioa abiatzen ikusteko. Aurpegi tristeak ikusten ziren; egoitzako langile taldean adineko erizaina ikustea lortu zuen kontsulak, burua makurtuz agur egiten.

Gaztelako lautada horiak, begien bistatik urruntzen den horizonteak, kontsularen pentsamenduetan eragin lasaigarria zuela zirudien. Neska berreskuratzeko helburua lortu zuen, eta laster hura desagerrarazteko asmoa zutenen eskuetatik erauztea lortu zuen. Zein egoeratan zegoen ikustea nahikoa zen hori jakiteko. Erizainaren kontakizunak gorputz txarra utzi zion; ezinezkoa egiten zitzaion sinestea inork halako egoerara eraman zezakeela beste inor. Gidariak baimena eskatu zion bidean gelditzeko zerbait jatera, baina ezezkoa eman zion. Erizainaren kontakizuna entzun ondoren, ezer jateko gauza ez zela sentitu zuen. Gidariari esan zion oso premiazko kontua zela, eta hitz eman zion, kontsolatzeko, Madrilera iristean bazkari on batera gonbidatuko zuela neska aireportuan entregatu ondoren. Horrekin gizona konformatu zela zirudien, eta ez zen gehiago tematu.

Baina ez zen neskaren egoera Braulio Sifontes kezkatzen zuena; afera bere interesetarako erabili zuela jende guztiak jakiteak kezkatzen zuen. Bere herrialdeko enbaxadoreak erabili zuen, eta Venezuelako neskari egin zioten guztiagatik Espainiako poliziaren aurka salaketa jartzeko aukera ukatu zion. «Lehentasun diplomatikoaren arrazoiak», esan zion. Berak zekizkien lehentasun diplomatikoaren arrazoiak interes ekonomikoak besterik ez ziren, eta ez zen komeni tratu txarrak jasan zituen herritar soil batek zirikatzea. Bazekien Estatu espainiarrean edo Venezuelan inork ez zuela hatz bakar bat ere mugituko emakume hark benetan sufritu zuena jakiteko; are gutxiago haren borreroak zeintzuk izan ziren jakiteko. Dena bostekoa emanda amaituko zen, eta hitzarmenak eta akordio ekonomikoak sinatuko ziren. Are gehiago orain, herrialde hau ekonomikoki aireratzen ari zela eta Venezuelako petrolioa behar zuela zirudien momentuan. Neska bere familiaren esku utziko zuten, zegoen egoera tamalgarrian; Venezuelan inork ez zien azalpenik eman-

go. Esango zieten ez zela komeni urak mugitzea, Venezuelako gobernuak bere esku egon zen guztia egin zuela. Zaurietatik bizirik ateratzen bazen, bere oroitzapenen beldur eta izugarrikeriak lagun zituela biziko zen beti neska. Eta lortzen ez bazuen, hiltzen bazen, Espainiako eta Venezuelako agintariek pisu bat kenduko zuten gainetik. Emakumeak jasandako sufrimenduak norbaitek salatzen bazituen Venezuelan, kazetariren bat bere testigantza argitaratzeko gai bazen, Espainiako diktadurari, Francori eta bere gobernuari egotziko zien errua. Baina Madrilen zuten enbaxadan hartu eta elkarri bostekoa ematen jarraituko zuten bi herrialdeen artean negozioren bat sinatzera joaten ziren bakoitzean. Azken finean Estatu arrazoiak da beti irabazten duela pentsatzen zuen kontsulak.

Morales komandanteak ere erabili egin zuen; argi zegoen inork ez duela ezer egiten interes berezirik gabe. Erabili egin zuen emakumea Donostiako egoitzan zegoela jakinarazi zionean, azkar ebakuatzeko agindua eman ondoren ahots-tonua aldatu zuenean. Atseginez poztu zen elkarrekin lan egiteko gai zirela eta etorkizunean ere elkarlanean jarraitu behar zutela esatean. Baina berehala gehitu zion hurrengo egunetan Venezuelara emigratzaile gisa joateko asmoa zuten senitarteko eta lagun batzuen zerrenda bidaliko ziola, berak agiriak eman ziezazkien. Hartu-eman bat zen, tori eta tati, pentsatu zuen kontsulak. Baina bazekien, edo sumatzen zuen behintzat, ez zitzaiola dena esan neskaren gaiari buruz. Baziren bere esperientzia diplomatiko luzeak ohartarazten zizkion hari mutur solteak, inork argitu nahi ez bazituen ere. Ezin zitekeen kasualitatea izan emakume venezuelarra erreskatatu ahal izan zuten egun berean, hura eskuetan zuten polizia-taldeko bi agertzea bata hilda eta bestea larri zaurituta. Eta operazioaren buru izan zen ofiziala, ustez kontrabandoaren aurkakoa, bere lagun Morales komandantea

izatea, gainera. Eguneko prentsak zionez, nahasmena sortu zen bi polizia-kidego aldi berean joan zirenean kontrabandoa zeraman kamioi bat atxilotzera. Kamioi hori gelditzera joan zirenean elkarren artean tiroak egin zituzten, BPSeko kide bat hil eta beste bat larri zaurituz ondorioz. Baina bere intuizioak uko egiten zion prentsa-oharra sinesteari. Bazekien amaiera hartan nola edo hala inplikatuta zegoela neska venezuelarraren auzia, hori frogatzeko zantzurik inoiz azaltzen ez bazen ere. Bera ere ez zen hasiko haiek arakatzen, neska Estatu espainoletik ateratzea lortu zuen. Gero, bere lanarekin jarraituko zuen; bi Estaturen arteko lotura izango zen, beti bezala. Estatu bakoitzak ezkutatu beharreko bere lotsaizun propioak zituen, baina beren harreman ekonomikoak gero eta sendoagoak ziren.

# XXVI

Venezuelako Aragua estatuko kondaira batean esaten da Araguaney printzesa indigena bat zela. Bere aita tribuko jauntxoa zen, eta alaba herriko boteretsuren batekin ezkontzea nahi zuen. Neskari ez zion uzten bakarrik ibiltzea, ezta ibaira bainatzera joaten ere, xamanak esana baitzion, ilargi beteko egunetan neska han bainatzen bazen ez zuela inoiz aurkituko bere bizitzako maitasunik.

Baina oldartsua zen Araguaney, eta ez zien ez aitari ez xamanei obeditu nahi izaten. Herrixkatik ihes egin eta ibaira joan zen bainatzera ilargi beteko gau batean. Uretan murgildurik zegoela, itzalpetatik begira sumatu zuen norbait. Oso gizon garaia zen, eta gerra-armak eskuetan zeramatzan. Tiquire zen, bere aitaren arerio jauntxoaren semea.

Gizona uretara sartu eta Araguaneyra hurbildu zen, bi gazteek elkar ikusi eta bat-batean maitemindu ziren. Ilargi beteak laguntzen zien, eta ibai ertzean maitatu zuten elkar.

Gertatutakoa jakitean, Araguaneyren aita oso haserretu zen, eta bere gerlari batzuek babestutako etxola batean Araguaney giltzapetzea erabaki zuen bere amorruan. Ilbehera zuen gau ilun batean, Tiquire agertu zen eta, borrokaldi gogorraren ondoren, neska erreskatatzea lortu zuen. Baina ihesaldian, gezi batek Araguaney zauritu zuen. Tiquirek lepoan hartu zuen eta ihes egin zuten muino gorenera. Gailurrera iristean konturatu zen Araguaney hila zela.

Lurrean utzi zuen, eta, haren galeragatik negar handiak egin ondoren, lo geratu zen Tiquire. Hurrengo goizean esnatzean, neskaren gorpua zegoen lekuan lore horizko zuhaitz hostotsu

bat ikusi zuen, eta haren loreek eguzkiak legez distiratzen zuten. Bere maitea zela pentsatuz besarkatu egin zuen pixka batean eta, nekea iritsi zitzaionean, zuhaitzaren itzal urreztatuaren azpian eseri, besoak bular gainean gurutzatu eta lo geratu zen. Han geratu zen ilargi berria itzuli zen arte, eta honek, bere fase-aldaketan, mendi handi bihurtu baitzuen Tiquire.

Etzanda Dagoen Indiarraren Mendialdeko kondaira. Aragua, Venezuela.

Maria Mercedes Antxeta Venezuelako gobernuaren Ipostel hegazkinean iritsi zen Caracas-La Guairako aireportura. Zein egoeratan zegoen ikusi zutenean, senideek berehala erabaki zuten Venezuelako hiriburuko ospitale batean sartzea. Bere osasuna ez zen inoiz sendatu; medikuek ahalegin handia egin zuten arren, Venezuelara itzuli eta 46 egunera hil zen, Donostiako komisarian sei egunez egin zizkioten torturekin eragindako barne-zauri larriengatik.

Haren senide eta lagunek salaketa bat jarri nahi izan zuten Caracasen, baina Venezuelako agintariek ez zituzten inoiz babestu. Prentsarekin joan ziren hilketatzat jotzen zutena salatzera, baina "El Nacional" egunkarian baino ez zituzten jaso. Editorial batean komunikabide honek idatzi zuen Maria Mercedes Antxeta espainiar poliziak erail egin zuela euskal jatorria izateagatik bakarrik. Sei egun osoz, Espainiako poliziek basatiki torturatu zutela, Espainiaren batasunarekin kolaboratu nahi ez izatea leporatuz.

Baina hor geratu zen dena. Venezuelako agintariek ez zuten inoiz protesta-oharrik ere aurkeztu Madrilgo gobernuaren aurrean polizia-etxean tortura izugarriak jasan zituen herrikide

baten hilketa salatzeko. Estatu espainiarrean inoiz ez zen auziari buruzko espedienterik ere ireki, jakina; ezein epailek edo poliziak ez zuen inoiz zer gertatu zen ikertu, eta torturen eta haien ondorioen erantzuleak ez ziren bilatu.

Aitzitik, Maria Mercedes Antxetari gertatutakoaren ardura zuten poliziak, eta haren antzeko ehunka edo milaka kasutan ardura zutenak, Franco hil zenean sortutako polizia berrietan birziklatu zituzten. Demokrazia berriak eskerrak eman zizkien egindako zerbitzuengatik, eta errepresioan eta jazarpenean agintea hartu zuten polizia-egitura berrietan sartu zituen, bere demokraziaren onuretan sinesten ez zuen edozeinen kontra lanean jarraitzeko. Askok, zaharrenek, ohorez hartu zuten erretiroa, eta bizi arteko pentsio handiak jaso zituzten. Beste askok disidentzia jazartzeko bere «ezagutzak» eskaintzen jarraitu zuten hainbat urte geroago. Batzuek, Meliton Manzanasek kasu, gaur egun ere omenaldiak eta ohoreak jasotzen dituzte Euskal Herriaren oroimen kolektiboa iraintzen duen ustezko oroimen zentroetan, bertan legitimotzat jotzen baita milaka euskal emakume eta gizonezkok —eta beste herri batzuetakoek— jasan zuten sufrimendu ikaragarria.

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
FERNANDO ALONSO. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
SEGAPOTO KOLEKTIBOA. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
JOSEBA ARREGI. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
JOXE BLANCO. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
JUAN LUIS MUGERTZA. *2005.*

**Azeri gosetia**
KEPA ETXEBARRIA. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. HAINBATEN ARTEAN. *2006.*

**Claude Gueux**
VICTOR HUGO (ITZULPENA: ZORION ZAMAKOLA). *2007.*

**Zimaren abenturak**
BELEN GONZALEZ / KEPA ETXEBARRIA. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
URTZI ZUBIZARRETA. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar**
MAHAI–JOKOA. ZORION ZAMAKOLA. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
IÑAKI OJEDA. *2009.*

**Preso nago**
MIKEL ORBEGOZO. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
MIKEL ANTZA. *2011.*

**Espetxetik at**
BORXA URBERUAGA. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi naiz**
IBON MUÑOA. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. HAINBATEN ARTEAN. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
MIKEL ANTZA / IKER MORENO. *2012.*

**Fakin xokona**
OIER GOITIA. *2012.*

**Sasian barna**
XABIER MAKAZAGA. *2012.*

**Preso nago 2**
MIKEL ORBEGOZO. *2013.*

**$Z^2$**
MIKEL ANTZA. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
JOKIN URAIN. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
IBON MUÑOA. *2014.*

**Urte ilunak**
NELSON MANDELA (ITZULPENA: EKAITZ SIRVENT). *2014.*

**Ilargiraino!**
MIKEL ORBEGOZO. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
JOSEBA ARREGI. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
KEPA ETXEBERRIA ETA XABIER UGARTE. *2016.*

**Kuku erlojua**
KEPA ETXEBERRIA ETA XABIER UGARTE. *2016.*

**Haizea**
HAINBAT EGILE. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
IBON MUÑOA. *2016.*

**Kartzelako kronikak**
JEXUXMARI ZALAKAIN, *2016.*

**Axelko eta Otsoko bertsotan**
KEPA ETXEBARRIA. *2017.*

**Udaberrian biziko gara**
IBON MUÑOA *2017.*

**Errezel berdeak**
JEXUXMARI ZALAKAIN. *2017.*

**Txori mezulariak**
JOSEBA EROSTEGI 'ELTZIKORTA' / LOREA EROSTEGI FERNANDEZ. *2018.*

**Hamaika desio utopiarako**
IBON MUÑOA. *2018.*

**Egia baten egunerokoa**
OIER GOITIA. *2018.*

**Gure memoria, gure historia**
IBON MUÑOA. *2019.*

**Basatza**
HODEI IJURKO IROTZ. *2019.*

**Amonaren ipuin magikoak**
JOSEBA EROSTEGI / LOREA EROSTEGI. *2019.*

**Zaldi Zoro**
MARI SANDOZ (ITZULPENA: AITOR FRESNEDO GERRIKABEITIA). *2020.*

**Gure Ama-Lur feminista da**
IBON MUÑOA. *2020.*

**Órale, compadre... ¡Nos vemos en Iparralde!**
ARANTZA EZIOLAZA GALAN. *2021.*

**Urrun da zeru urdina. Ataramiñe 2002-2017**
EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOAK. *2022.*

**Zaldi Berdea**
JOSE MARI SAGARDUI MOJA «GATZA». *2022.*

**Barruan**
GARTXOT. *2022.*

**Araguaney lorea**
MARTIN DE ARANEZIO. *2023.*

Hau ez da autore honi idaztea gustatuko litzaiokeen liburua. 1961eko udan Maria Mercedes Antxeta euskal-venezuelar gazteari Donostian gertatu zitzaiona ahalik xehetasun handienekin kontatzea baitzen helburua hasiera batean. Gertaera haien kronika zehatza egin ordez eleberri forman idazteko erabakia urrats bakoitzean aurkitutako informazio faltaren ondorioa izan da. Ezin izan da Maria Mercedes gaztearen zuzeneko ondorengorik edo familiakorik aurkitu, ez Venezuelan, ez Euskal Herrian. Espainiako poliziarengandik jasan zituen torturei buruzko argibiderik ematen digun dokumentu ofizialik ez dago Venezuelan, emakume gaztearen senideak saiatu ziren arren garai hartan Hego Amerikako herrialde horretako agintarien aurrean nolabaiteko salaketa jartzen. Espainiako artxibo ofizialetan kasua ez da existitzen.



**atara**miñe

**www.literaturakoadernoak.org**